

# Bakarmortuko kronikak

MIKEL ANTZA



EGILEA:
**Mikel Antza**

Albisu Iriarte, Mikel (5 508)
Maison d'arrêt de Lyon-Corbas
40 boulevard des Nations
BP 351
69 962 Corbas Cedex
Frantzia



AZALEKO IRUDIAREN EGILEA:
**Joseba Arregi Erostarbe**

C.P. Jaen II
23071 Jaen

**www.literaturakoadernoak.org**

---



ISBN: 978-84-936917-6-9
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
NA-3247-2011

# Bakarmortuko kronikak

## (idatzi nahi ez nituenak)

Mikel Antza

atarамiñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

www.literaturakoadernoak.org

# ATARIKOA

Ia zazpi urte igaro dira kronika hauek idatzi nituenetik. Orduan idatzitakoa irakurtzeko adorerik ez dut izan denbora luzean. Izan ere, kronikak idatzi nituen garaiari buruz gogoeta egiten dudan bakoitzean, orduko zauriak orbaindu gabe ditudala konturatzen naiz.

Lau hilabete egin nituen isolamenduan, bina hilabete Moulins-Yzeure-n (Frantzia) eta Naoneden (Bretainian). Batetik besterako lekualdatzean, Lyongo ospitale bateko kartzela-moduluan egonaldi laburra egin nuen, zazpi egunetako gose eta egarri grebaren ondorioz hara eraman banindu-ten. Isolamendu erregimenarekin amaitzea erabaki zutenean, Okzitaniako Toulousse-Seysseseko kartzela ireki berrira lekualdatu gintuzten, modulu arruntean kokatuz.

Hiru kartzela horietako bakoitzean kaiera bana bete ondoren kronikagintzari amaiera ematea erabaki nuen; nahiz eta kartzelako egunerokotasunak iradokitzen zizkidanekin orriak eta orriak betetzen jarrai nezakeen. Neurri batean, senide eta lagunei idatzitako gutunetan eta bestelako idazkietan jarraitu dut mundu bestelakotu honen berri ematen. Sartu berritan ia egunero dago zerekin harritu. Urteak pasatu ahala, asaldatzeko ahalmena ez galtzean dago bizirauteko gakoa.

Kartzelak min ematen du, beldurra sentiarazten digu eta gugan inoiz sumatu ez genuen gorrotoa ernarazten du. Horiek izan ziren nigan ordura arteko indar ezezagunez nagusitu ziren sentimenduak. Eta sentimendu horiek garaitu ez nintzaten aurre egiteko modua aurkitu behar izan nuen. Nire burua antolatu nuen eta borroka egiteko prestatu.

Kartzelak irentsia ez izateko, norberak hobeki egokitzen zaion jarrera hartzen du. Isolamenduaren aurrean, idaztea izan zen nik hautatu nuen defentsa tresna. Hastapenetik ohartu nintzen tortura zuriaren bidez zigortu behar nindutela, eta gertatzen ari zitzaidanarekiko distantzia jartzea erabaki nuen, senez esango nuke.

Planeta ezezagun eta gaizto batean bat-batean esnatzen den kazetari ausartaren mozorropean babestu nuen nire burua. Jasanaraziko zizkidatenek

izatearen sakonenean zauritu ez nintzaten, umorea zeharo galdu eta betirako ez mikazteko baliagarri izango zitzaidalakoan.

Ondorengo orriotan irakurgai direnek ez dute orduan bizitako gertakizunen kontakizun kronologiko xehe-xeherik eskaintzen. Batzuetan nire burua mugatu nuen, idazten ari nintzena zelatatzeko kaiera kenduko zidaten kezkagatik. Beste batzuetan egoerak berak ezarri zidan muga: lerro soiletan baino ez dut aipatzen gose eta egarri grebako egun eta gau amaigabeetan bizitako sufrikarioa. Ez nituen kaierean jarri Moulinsetik gauerditan irtenda Lyongo ospitaleraino egindako izu-laborrizko bidaiarenak, non nengoela inork ez zekiela, gau ilunean errepide bazterrean autoa gelditu eta kartzelazain eta jendarmez inguratuta zain eman genuen bitartean bizitako ezinegona; ezta bizpahiru egunen buruan handik atera eta Naonederaino kartzelazainen gorputz berezien zaintzapean zazpi ordutako bidaiakoak, umilazioak... Ez nintzen, nonbait, gertakari batzuek beharrezko distantziaz hartzeko gai.

Atxilotu eta bederatzi hileren buruan, berriro ere emaztea, haurra eta hirurok elkartzea lortu genuenean eten nuen idazketa. Ez zen eten ordea frantziar *Maison d'Arrét*etako oihaneko bizitza bakartua. Guztira bi urte eta ia erdi eduki gintuzten beste euskal presoengandik bereiz, kartzelaz kartzela goizaldeko lekualdatzeak, ustekabekoak, furgoitik ikusten genituela senideak ikustaldira sartzeko kartzela atarian zain. Marseillako Baumettes, Italiako muga ondoko Draghinhan eta Kataluniako Perpinyako kartzelak ezagutarazi zizkigun Frantziako Kartzela Administrazioak, 2007ko otsailean Paris inguruko Fresnesera eraman eta beste kideekin elkartu gintuzten arte.



Bi urte eta erdiz, hilean behineko ziega aldaketez gain, kartzelaz aldatzearen ia pareko diren modulu aldaketak jasan eta zigorren erantzun gisa gose eta egarri grebak eta bestelako borrokaldiak burutu genituen. Isolamendua eta bakartasuna ezagutu duenak soilik daki zer den kolektibo zabalago baten partaide izanik ere, kartzela-sistemari aurre egiteko egin behar den indarra.

Lerro hauek idazterakoan, oraindik ere badira beste kideen laguntasunik gabe dauzkaten euskal presoak, eta batzuek urte luzeak daramatzate horrela, zigor erantsi hori jasanez. Gainera, presoarentzat ez ezik sakabanatutako kartzeletara doazen senide eta lagunentzat ere zigorra da, beste senide eta lagunen babes eta laguntzarik gabe, eta hizkuntza ezagutu gabe gehienetan, kartzelazainen larderiaren menpe baitaude.

Atxilotu aurretik ez nuen nahi izaten kartzela gaitzat zuten liburuak irakurtzea. Nirekiko nioen gauzak okertzera neronek deskubrituko nuela

mundu beldurgarri eta triste hori. Une hori iristerako nire ikuskera kutsatu gabe gorde nahiko banu bezala. Horregatik, lekukotza honi ekin nionean, oharpen hau idatzi nuen kaieraren lehen orrialdean:

> "Euskal Herriaren askatasun borroka dela-eta, noizbait etsaien eskuetan erori eta bahituta izateko arriskua duenak ez luke zertan ondoan datorrena irakurri, tamalez, lerro hauen iturburuan dagoen egoera latza bere kabuz deskubritzeko aukera izango baitu.
>
> Gainera, ez du orriotan aurkituko biziko duen egoera horri aurre egiteko bide orririk. Ez baitago egoera horri aurre egiteko formula magikorik, duintasuna kosta ahala kosta gordetzea ez bada. Haien eskuetan gaudenean kendu ez diezaguketen bakarra horixe da eta".

Orain ez dakit 2004ko urrian idatzitako oharpen horretan aipatzen dudan aholkuaz gain, duintasuna kosta ahala kosta gordetzearenaz, alegia, beste irakaspenik aurkituko duen inork lerrootan.

Izatez, gizakia xehatzeko asmatutako sistema baten barrutik egindako salaketa idazkia da kronikok osatzen dutena, nire ikuspegitik egindakoa. Horrela egin nion aurre nik kartzelari, bizirauteko aurkitu nuen nire modua izan zen, nire jarrera eta jokabidea aurrean nuenaren arabera moldatu nuen. Niretzat baliagarria izan zen, hori besterik ez. Oharpen hartan nioenez, ez baitago formula magikorik.

Argitara emateko asmoz kaierok berriro irakurri ostean, bere horretan utzi ditut orduan idatzitakoak (ulermena errazteko ezinbesteko orrazketa kenduta). Ez dut nahi izan hausnarketa berririk gehitu, zazpi urteotako kartzela aldiak orduko egoera hobeto ulertzen lagundu didan arren, ikuspegia aberastu eta zorroztearekin batera.

Moulinsen hasitako kaiera hari "Sarrera" ere idatzi nion. Honela nioen horko pasarte batean:

> "Kronika hauek 2004ko urriaren 6an hasi nituen arren, gaur arte, urriaren 27a, orri solteetan edota nire burmuinean egon dira gordeta.
>
> Gaurtik aurrera, zaharrak garbira pasatu eta berriak koaderno honetara biltzen hastea erabaki dut.
>
> Zeregin honi ekiten diodanean ez dakit kronika hauek, nire basamortuko bidaldi bakarti honen testigantza izan nahi dutenak, inoiz inork irakurriko ote dituen. Neronek ere, behin idatziz gero ez dut berriro irakurtzeko asmorik. Bakarmortuko ibilbidean norabidea markatzeko, ez galtzeko, harri txintxar batzuk balira bezala botatzen ditut kronikok... Eta baita ere, noizbait ibilbide behartu honetan galduko banintz, eta kronika hauek

norbaiten eskuetara iritsiko balira, nondik nora ibili naizen jakiteko balio dezaten.

(...) Berez, kronika urriaren 5ean hasten da, emazte eta semearengandik banandu eta gero, sei polizia frantsesek, ni bezala esku loturik zegoen beste euskaldun bat eta biok Euskal Herritik Parisera abioi txiki batean eraman gintuztenean.

Ez dut gogoratzen eskuak aurrean edo atzean lotuak nituen. Miarritzeko Parma aireportutik hegaldatu zen hegazkina. Baiona-Tarnoseko inguruak atzean utzi eta Landetan barrena gindoazela itxi nituen begiak. Ez nituen ireki Parisera bitartean. Boligrafoa eta papera eskuan izan bezain pronto, abioitik kartzelarainoko ibilbideak sortu zidan sentsazioa islatu nuen". (Ikus MUNSTROA).

Bahitu eta sei urte ondo pasata epaitu gintuzten, 2010eko azaro-abenduan, eta orain 2012an egingo diguten helegite auziaren zain gaude. Denbora guzti honetan kartzelari aurre egiteko izan dudan babes-jantzia, isolamenduan eta bakartuta eduki gintuzten garai horretan ehundutakoa da. Eta oraindik ere, kartzelak bere aurpegi zikinena erakutsi eta zigor ziegara igortzen gaituztenetan, edota arbitrariotasun handienaz gure gizatasuna kentzen saiatu eta animaliak baino okerrago erabiltzen gaituztenetan, garai hartan ereindako amorruak gainezka egiten dit, orbainduta zeudela uste nuen zauriak odoletan hasten zaizkit, eta ikusten ez diren malkoz egiten dut negar. Baina une berean, injustiziari eta nagusikeriari aurre egiteko grina badudala ohartzeak irribarrea ekartzen dit aurpegira. Bizi gara!



Kartzela ezagutu duenak, hurbiletik edo barrutik, ez du zalantza handirik egingo: kartzelak desegin egin behar dira. Besterik da, noski, kartzelarik gabeko jendartea nola eraikitzen den, nola garatuko litzatekeen. Jendarte batek ezinbestean sortzen dituen arau hausteen aurrean zein jokabide hartu beharko litzatekeen.

Jendarte aurreratuena dela uste dugun mendebalde kapitalista honetan amets lortezina dirudi kartzelarik gabeko mundua; irudikatzeko ere zailtasunak izaten ditugu gure burua ezkerreko iraultzailetzat dugun askok. Are gehiago, kartzela gero eta *modernoagoak*, sofistikatuagoak eta handiagoak eraikitzen ari direnean gure herrian bertan (Norte I, Norte II eta Norte III, noren iparra garen ahaztu ez dezagun, nonbait); sekula baino finkiago kartzela eta errepresio sistema jendarte aurreratuenaren erdigunean mozorrotuta kokatzen ari direnean.

Mendebalde ustez aurreratuko jendarte sistemak sortzen dituen mota guztietako arazoak kartzelaren bidez eta kartzela zigor gero eta gogorragoz

konpontzea proposatzen dute agintariek. Jakinaren gainean dauden arren kartzelak ez duela deus konpontzen, ez bada arazoa larriagotzen. Ez ote duten horrexegatik sustatzen gizon eta emakumeak lau hormaren artean bizirik lurperatzen dituen sistema hau. Kartzela, kapitalaren pilaketa gutxi batzuen eskuetan gordetzean oinarritzen den sistemaren ezinbesteko osagai gisa agertzen baita azpi-mundu honetan gertatzen dena aztertzeko nekea hartzen duen edonorentzat.

Kartzelarik gabeko hautabidezko sistemarik ez dela munduan onartuta ere, gure burua iraultzailetzat dugunok, inoiz bestelako jendarte sistema aske eta zuzen bat eraiki nahi badugu, kartzelaren errealitateari, errepresioaren auziari eta jendarte sistema orok sortzen dituen arazoei nola erantzun hausnartu beharko dugu. Hausnartu ez ezik hautabideak, eraikitzen ezin bada, bederen irudikatzen ere hasi beharko dugu. Bestelako jendarte bat irudikatzen dugunean eguneroko arazo errealei aurre eginez irudikatu eta eraiki behar baitugu. Eta kartzelarena ezin da izan zerrenda bateko azken gaia. Bere baitako arazoak konpontzeko, pertsonaren askatasuna eta duintasuna kentzean oinarritzen den jendarte sistema bat ez baita inoiz zuzena eta iraultzailea izango.

Euskal Herniaren askatasunaren alde borroka egiteagatik bahitu gintuen Frantziako Errepublikak, eta berak hainbat goresten dituen giza eskubideen, berdintasunaren eta zuzentasunaren hilerri diren kartzelotan bizirautera kondenatu.

Gaur artean ezagutu ditudan zortzi kartzelak, hormen eta zimenduaren berritasuna gora behera, nahiko antzekoak dira: jendartearen zabortegi eta erraustegi. Hondakin bezala pilatzen dute jendea, birziklatzeko asmorik edo esperantzarik gabe. Atearen alde batean eta bestean jendarte maila xumeenetakoak daude gainera. Aberatsek txiroei beren artean zaintzeko zeregina eman bailien.

Kartzelotako etxartean aurrera eta atzera edo errotarrian ibili izan naizenetan, bakarrik edo kideekin, biharko mundu askea, Euskal Herri askea, zabortegian usteltzen den jenderik gabe irudikatzen saiatu izan naiz. Zeregin itzela begitandu zait aldioro. Baina zeregin albora ezina. Ez badugu etorkizunean guk ere sudurrak itxita ibili nahi, gaur egun gu zanpatzen gaituztenek egiten duten bezalaxe. Kartzeletako horma sendoenek ez baitute eragotziko ziega-hilkutxotako kiratsak gure itxurazko zorionaren gezurra agerian uztea.

Lyon-Corbas, 2011ko irailak 29

# ATEA BOTA ONDORENGOAK

[*Goizeko seiak. Etxerako maldan gora ziztu bizian datozen autoen zaratak esnatu gintuen. Txakurrak! Minutu gutxiren buruan, sarrerako atetzarra botata barruan zeuden armekin destatzen gintuzten mozorrodunak: altxa besoak, etzan lurrean, eskuak atzera, eskuburdinak, «zure izena!», ostikada. Bukatu da aldi bat. Hasi da beste bat. Jarraitzen du borrokak*].

## IDENTIFIKAZIOA

Nor naizen. Ez dut agiri beharrik, neronek esaten duen huraxe naiz: Lurrean ahuspez, eskuak bizkarrean lotuta, mozorrodunak buruan ostikada joz, *ton nom*!, nortasuna eskatzerakoan, deus esateko ez duela erantzuten duena naiz.

Emaztearen senarra. Semearen aita. Euskalduna. Euskal Herriaren aldeko borrokalaria.

## ITZULTZAILEA

Elkar ulertzen ez duten bi pertsonen arteko komunikazioa bideratzen duen hirugarren pertsona da itzultzailea.

Baina zertarako da bat-bateko itzultzailea bi pertsona horien artean hizkuntza komuna dagoenean, eta ustez itzuli beharrekoa jadanik ulertua izan denean.

Zertarako da bat-bateko itzultzailea, bi pertsona horietako batek, jadanik ondo ulertu duen galderari itzultzaileak ulertzen ez duen hirugarren hizkuntza batean erantzuten duenean?

Poliziak frantsesez egiten du.

Bahituak frantsesez badaki.

Itzultzaileak frantsesetik gaztelerara itzultzen dio Bahituari.

Bahituak ez du ahorik irekitzen.

Galdeketarekin jarraitzen du poliziak, harik eta frantsesez egin eta gaztelerara itzulitako galderari, Bahituak Itzultzaileari euskaraz erantzuten dion arte:

POLIZIAK: Nationalité?

ITZULTZAILEAK: Nacionalidad?

BAHITUAK: Euskal herritarra.

## MESTIZAIA

Modazko hitza. Kultura, azal-kolore, jatorri desberdineko pertsonak bildu nahi dituena. Batzuetan zanpaketa gupidagabe baten ondorengo emaitzari ere deitzen zaio «mestizaia».

Nik Baionako polizia-etxeko hormetan aurkitu dut: tunisiar, marokoar, aljeriar, errumaniar, kosovoarren idazkiak... eta noizean behin «GORA» bat eta azkazalekin idatzitako «ETA».



## MINISTROA

Bi moto aurretik. Auto bat atzetik. Erdian, auto zaindua. Denek sirenak topera, argi keinukariak, argi urdinak jirabiraka.

Gidaria eta albokoa armaturik daude. Hirugarren gizon armatu bat doa atzean. Laugarrenaren bizkartzainak dira.

Konturik gabe, hiritarrak bidetik baztertzen dituzte, geldiarazi, azkarrago joan arazi, pasabidea zabaltzen dute auto pilaketaren erdian. Izugarrizko anabasa, hiriaren lasaitasuna apurtuz.

Aireportura goaz, fite, ministro bat bezala naramate, eskuak atzean loturik lituzkeen ministro bat bezala.

—Ministro bat bezala naramazue —esan diet txantxa-doinuz.

—Bai, tamalez gauzak asko aldatu dira azkenaldian. Baina etorriko dira bere onera berriro ere —erantzun dit mehatxuz albokoak.

## MUNSTROA

Gaua da. Goitik ikusita, beldurgarria da hiria, munstro erraldoia.

Irudi luke ahoa zabaldu eta ahokada bakarrez irentsi gaitzakeela. Munstroak arnas lasaia du, ordea. Hiritarrak axolagabe dabiltza bere erraietan. Hiribideetan, gora eta behera, argi hori eta gorrizko ilara amaigabeak munstroaren arteriak eta zainak begitandu zaizkit. Jendea lanetik etxera bidean, erosketak eginda edo etxetik lanera. Futbol-zelai baten belar berde artifizialaren gainean inurriak, harat-honat ulergaitzean.

Abioi ttipia, hegalaldia mantsotuz eta altuera galduz, aireportu batean lurreratu da[1]. Munstroaren ipurtzuloan.

Eskuak katez loturik, bertsolarien moduan atzean, munstroaren hesteetan barrena, estoldetan barrena, garamatzate.

Hilerrikoan bezalaxe, hemengo atarikoak ere idazki bat behar luke abisu emanez: «ate hau gurutzatzen duenak gal beza pertsona gisa hartua izateko esperantza oro».

Boterearen larderiaren geltoki bakoitzak bere izena eta bere funtzioa du: lehena, bortxa; bigarrena, mehatxua; hirugarrena, gezurra; laugarrena, xantaia; bosgarrena, umilazioa; seigarrena, mespretxua; zazpigarrena, ukazioa; zortzigarrena, inposaketa; bederatzigarrena, bakartzea. Hurrenkera horretan edo nahasian, zaldiko-maldiko krudelean ezagutu ditugu denak.

Geltokiz geltoki, munstroak harrapakinak sailkatzen ditu, digestio geldoari ekiteko, pertsona xehatzeko errotarrian kokatzen ditu. Kartzelan gaude.

Egin du Munstroak naturaz kontrako betekada. Hiritar zintzoek, botako duen korrok usaintsua, putz nazkagarria ez sentitzeko, leihoak itxi dituzte.

Dena ondo doa. Ez dute deus ikusi, usaindu, entzun nahi. Ez dute deus esan nahi. Lasai egin dezakete lo. Munstroak zaintzen ditu. Munstroak zaintzen gaitu.



1 Handik gutxira, Yasser Arafat gaixotuta Frantziara hiltzera ekarri zutenean jakin nuen Villacoublay-ko aireportua zela.

## BERTSOLARI ISILAK

Bertsolariak aritzen dira
beso-eskuak atzean,
ni ere berdin eduki naute
igande goiza ostean.
Baina hitzik ezean,
bertsolaritza mutuan.
Bertsolaritza mutuan,
Euskal Herrian ugari dira
denak txapeldun borrokan.

*(2004-X-6, 13, rue Saussaies)*

## BERTSOTAN

Frantziako Barne Ministerioan egin nuen lehena, «13, rue Saussaies» beldurgarrian. Urriaren 6an. Emazteari kantatu nion airea sartzeko zirrikitutik. Ziega blindatuan, argituan, kameraz filmatuan, 24 orduz.

# Moulins-Yzeure-ko kaiera

(2004ko urriaren 8tik abenduaren 13ra)

[*Goizaldeko hirurak inguru atera ninduten Parise erdian dagoen Justizia Jauretxeko kalabozoetatik, auto batean lau polizia mozorroturekin sartu eta Frantziaren erdialdean dagoen Moulins-Yzeureko kartzelara eraman ninduten errepideko abiadura-arau guztiak hautsiz. Goizeko zazpiak inguru iritsi ginen. Atzetik ekarri genuen autotik emakume ilehori bat jaitsi zen eta kartzelako sarrera filmatu zuen. Sarrerako izapideak eginda ate bat eta beste bat eta beste bat... gurutzatuz azken estairaino igo ninduten. Hango gela batean, beren burua kartzelako zuzendari eta buru gisa aurkeztu zuten bi gizonek isolamendu erregimena ezarri zidatela jakinarazi zidaten. Nire burua euskal preso politikotzat jotzen nuela eta neurri hori ez nuela onartzen esan nien. Ondoren, ziega txiki eta ilun batean sartu ninduten, deus gabe. Hor egon nintzen bitartean, bizpahiru liburu, harpidetzaz jasotako Euskal Herriko egunkariak eta isolamenduko beste presoek ate azpitik sartzen zizkidaten Frantziakoak, eta auzokoak eman zidan irrati-kasete bat eta telebista baino ez nituen izan denbora pasa. Eta denbora zedarritzeko, auzoko berak oparitutako uhalik gabeko ordularia*].



## ELKARTASUNA

Hitz bat. Hutsa maiz. Baina baita ere: horman kolpe bat, kax-kax. Alboko ziegako ezezagunak te bat egiteko beharrezkoak helaraztea (ura berotzeko gailua, te-zorrotxoak, azukrea). Beste albokoak pasatako ordulari lokarri gabea...

Inork oztopa ez dezakeen elkartasuna. Inola ere eskertu ez daitekeen elkartasun beroa.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

BAKARMORTUA
KARTZELUA

## DENBORA-ALDARTEAK

Iragana, indarra.

Oraina, negarra.

Etorkizuna, izarra.

Oraina, irrifarra.

## KUTXA

Kutxan bakarrik nago. Txikia da. Ez dut neurtu nahi. Atetzar bat du. Ezin dudana ireki. Ez dut begiratu nahi. Ez dut pentsatu ere egin nahi atera nahi dudala. Kutxan 23 ordutarako bainago.

Zerbait nahi badut botoi bat sakatu behar dut. Argi gorri bat pizten da ziega barruan, txikia. Dei-argi gorria pizten da ere ziega kanpoan, handia. Komeni zaionean etorriko da zaindaria. Bi minuturen buruan, hogei minuturen buruan, berrogei minuturen buruan. Beren menpe nago. Arratsaldeetan deitzen diedanean nahiko azkar etortzen dira, bai baitakite jadanik arratsalde batzuetan dutxa hartzeko *ohitura* dudala.



Bestela, goizeko 7etan zakarrontzia atera eta egon daitezkeen gutunak hartzeko eta jana emateko egunean beste bitan baino ez dute irekitzen atea.

Behatze zulo bat du ateak —ipurtzulo bat—. Noizean behin zaindariak begiratzen du, eta komunaren ate zabalduak ikusmira oztopatuta ikusten ez banau, atea irekitzen du ere. Gau osoan goizaldera arte, zaintze txanda bakoitzean, klask, argia pizten dute eta esnatu egiten naute.

### GOIZA

Goizean jaiki eta
bakardade astun,
leihoa ireki arren
dena dago ilun,
burdin-sare artetik
haize fresko kuttun,
begiak itxi eta
hegan noa urrun.

## KAIOLAK

Isolamenduan, ordubetez baino ez naute ateratzen ziegatik, «txangorako», kaiola batera. Zazpi dira eta txandaka ateratzen naute batera edo bestera. Ziega baino handiagoak dira. Luzera desberdinekoak dira, oinetakoekin neurtu ditut: laburrenak hogeita lau oinetako neurtzen ditu, hogeita hamabi luzeenak.

Zenbakituak daude kaiolak. Gradudunak kartzelariari iragartzen dio zeinetan sartu behar nauen: «la une!», «la cinq!», «la deux!». Hurrenkera logikorik gabe, segurtasun neurriren batengatik. Isolamendua azken estaian dago, eta txangorako kaiolaren sabaia burdinazko sare batek isten du. Hortik ikus dezaket zerua.

Ezagutu ahala bataiatu egin ditut kaiolak: *Antena, Solariuma, Lorategi botanikoa, Ezezaguna, Aldapeta, Luzea* eta *Harrobia*.

Kaiolan aire librean nago, sabaia sare lodi batez itxia badago ere. Bakarrik egoten naiz bertan. Ondoko kaiolak hustuta daude, piztiarik gabe. Kutsakorra naiz nonbait. Ordubeterako nago bertan. Eta ordubetez *aske* sentitzen naiz. Ia deus eramateko eskubiderik ez dudan arren (mukizapia, sagar bat eta gozoki bat soilik).

Bertan, ETA hizkiz zizelkatuak ditudan horma zikinen artean bai nagoela bakarrik nire buruarekin. Noizean behin ordea euli bat, eltxo bat, edota behin ziegara ekarri nuen amona mantangorri bat ere izan ditut kide. Gainaldean antenak dituen kaiolara naramatenean, berorietan pausatzen diren txoriak ere izaten ditut lagun. Ez dakit zer txori klase diren ordea. Kaiola batzuetako ertzetan belarrak eta *kartzela-landareak* hazten dira.

Luze egiten zait ordubetea, ondo betetzen saiatzen naizen arren.

Goizean ordu batez
kaiola batean
gora eta behera nabil
piztien antzean.
Bakartuta naukate
kartzela barnean.
Goresten dut Herria
urrats bakoitzean.

## KUTXATIK KAIOLARA

Kutxatik kaiolara. Kaiolatik kutxara. Askatasunaren leihoaren bila.

## DUTXA

Egunerokotasunaren ohikeria apurtzeko, bi edo hiru egunean behin baino ez dut dutxa hartzen, nahiz eta albokoak diostan lez egunero hartzeko eskubidea dudan.

Noizean behinekoa dutxarako irtenalditxoa kitzikagarri izan dadin saiatzen naiz. Gainean jarri didaten harlauza astunegia egiten hasten zaidanerako aringarri. Monotoniak, berririk ezak edo besterik gabe kartzelan egoteak dakarren gabezia guztien minak itoko nauela iruditzen zaidanerako.

Ez naiz luze egoten bertan. Ura hotz dago hasieran, baina botoiari gero eta gehiago sakatu orduan eta beroago ateratzen da, erretzeraino.

Dutxan ere *aske* sentitzen naiz, bai baitakit bertan nagoen bitartean ez dela inor sartuko. Lehortu, jantzi eta banator kutxara.



## KARTZELAKO GAIA

Kartzelako gaia: «kartzelan zaude, doinu eta neurri librean nahi adina bertso».

Kaiolara ateratzen nautenean, egunero-egunero *Eusko Gudariak* kantatzen dut, ukabila altxatua, horman zizelkatu dudan «ETA» baten aurrean. «Gora!» ozen bat botatzen dut amaitzeko, eta azkenaldian irrintzi bat ere. Ondoren «Txikia» kantatzen dut.

Ordubetea betetzeko, memoria ariketak egiten ditut aurrena, gero zizelkaritza (kaiola bakoitzean «ETA» bat), zazpi jauziak dantzatzen ditut eta azkenean bertsolaritza.

Urriaren 16an hasi nintzen bertsotan, nahigabean ia. Bertsolaritza tartean, artean asmatutako bertso guztiak errepasatu eta gero berri bat edo bi asmatzen ditut.

Kaiolaren alde batean jarri eta bertsoa botatzen dut. Amaierako errepika beste hormarantz oinez noala kantatzen dut. Beste hormaraino iristean, itzulia hartu eta lehen nengoen lekura begira botatzen dut bigarrena. Eta ho-

rrela, lekuz aldatuz, txandaka, bertso guztiak botatzen ditut, nire buruarekin bertsotan.

Denbora soberan dudanez, azken ordu laurdena, aurreko bertsoen giroko bertso berri bat asmatzen ematen dut.

**BERTSOLARIA**

Borrokaren erdian
sarean jausia,
mutu egon naiz eta
kartzela saria.
Kartzelan sartu eta
naiz bertsolaria,
kaiolan kantatzen duen
euskaldun txoria.

## EGUN ON

Kartzelazainak ez daude pozik.

«On egin!», «Egunon», «Arratsaldeon», «Gabon», «Ondo?» eta horrelakoak esaten dizkidate. Nik ez diet erantzuten. Hasieran frantsesa ulertzen ote nuen zalantzan zebiltzan. Orain badakite nire jarrera dela, eta ez daude pozik.

Ez dute ulertzen; edo ez dute onartzen otzan-otzan ez erantzutea beraiek hain aratz eta gizalegeko direlarik. Zeren, azken finean, zer egin didate beraiek niri? Zerbitzu bat betetzen dute, funtzionarioak dira.

Makinaren torlojuak baino ez dira, beren eskuetan jartzen dituzten pertsonak fisikoki eta psikologikoki xehatzeko zeregina duten torlojutxo inozenteak. Sentiberak.

Beren agurrei begirada bizigabez erantzuten diet. Zerbait behar dudanean normaltasun osoz eskatzen diet, ordea. Eta ez dute ulertzen.

Indarrez eta katez loturik ekarri gaituzte. Gure gogoaren kontra gaude. Ez. Ez gaude, gaituzte. Eta beraiek dira urriaren 3an etxeko atea apurtuz sartu ziren gizon armatuen kate bereko begiak.

## USOAK

Usoak hegan badoaz
Hegoaldeko bidean
Ni, hementxe, geldirik nago
aingura bana hanketan.

Begiradaz jarraitzen ditut,
hasten nauzu ametsetan;
haiek zugana naramate eta
zu zaitut ene barnean.

## UDAZKENA

Haizeak ibili du
batetik bestera,
hostoa erori da
kartzela barnera.

Hegan joango nintzake
hemendik etxera
iritsi den lekutik
ahal banu atera.



## MEDIKUA

Isolamenduan gaudenoi astean bitan datorkigu bisita egitera. Behartuak gaude, gainera, bera hartzera.

Atea ireki eta kartzelazainak urrats bat egiten du atzera. Bata zuridun emakume bat agertzen da. Irribarre urduria du. Bere atzean erizaina izan behar duen beste bata zuridun bat.

Ez du bere burua aurkeztu, ez dit izenik galdetu. Zertarako, atearen ondoko etiketatxoan jartzen du.

«Medikua naiz», esan dit emakumeak. «Bai noski, nirekiko, aitasantu izatearen trazarik ez duzu». «Zer-moduz-ondo?-Zerbait-behar-al-duzu?», galdetu dit, dena segidan.

Kartzelazainak ez du atea uzten, medikuak ez du urrats bat egiten ziega barrura.

«Ez, dena ondo dago» esaten diot.

Mediku andereak ez dit erantzun baina barru-barruko lasaitasun ufada entzun egin da ia.

Krisk-krask, bukatu da.

Presatua zegokeen, piztia guztiak bazkalordua baino lehen bisitatzeko.

## MEDIKU-LAGUNTZAILEA

Mediku-laguntzaile izateko asmoak dituen kartzela-zaindaritxoa hurbildu zait: «Zer moduz morala?». Nik ulertu diodana: «Zenbat gehiago xehatu zaitzakegu guztiz hautsi arte?».

## MEDIKUA (bis)

«Tout va bien?», irribarre urduriz.

«Oui», lehor.

Eta badoaz.

Ai!

## VOYEURRAK

Eguneroko ordubeteko txangorako galdera eginez zabaldu dute burdinazko ate sendoa. Jantzi egin behar naizela-eta, itxaroteko eskatu diet.

Atea irekita, beraiek begira. Arropak aldatu bitartean atea ixteko, mesedez eskatu diet.

«Ez! nahi dugunean ikusten zaitugu-eta biluzik!».

## IZENA = ZENBAKIA

Epailearen aurrera eraman behar nautela jakinarazteko bileratxoa egin dut kartzela-buru batekin.

Nire izena ez zegoela zuzen idatzita eta protesta egin dut. Ezarri didaten kartzela zenbakiarekin ez direla tronpatzen eta izena errespetatzeko eskatu diot.

## DEBEKUAK

Miaketa sakonagoa txangora ateratzerakoan.

Aurrerantzean ezin dut irakurgairik eraman, ezta sagarrik, gozokirik... Zigarretarik ere ez, erreko banu... Eskerrak ez dudan erretzen!

## ELKARRIZKETA IMAJINARIOA

MEDIKUAK: Zer moduz zaude?

BAHITUAK: Ondo eta zu?

MEDIKUAK: Ni naiz medikua!

BAHITUAK: Bai, baina norena? Nirea ala haiena?

## AZTERKETAK

Azterketak egin dizkidate. Emaitzak eskatu ditut. Ahaztu egin zaizkie.

«Lasai, dena normal dago», esan dit erizainak, «zerbait bazenu esango genizuke».



Arrazoi dute, azken finean azterketak ez dituzte niretzat egiten, beraientzat baizik.

Ziminoei ere azterketak egiten dizkietenean ez diete emaitzen berri ematen.

## GORPUTZ MIAKETAK

Gorputz miaketa desberdinak jasan behar izan ditut orain artean.

Batzuetan gorputza arropen gainetik haztatuz, sakonago ala arinago. Beste batzuetan biluztu araziz.

Bigarren hauetan guztiz biluztu aurretik berriro ere janzten hastea eskatzen diet. Batzuek onartu izan didate.

Biluzterakoan, batzuetan arropak ondo arakatu eta gero janzten uzten didate. Beste batzuetan aldiz besazpiak eta oinazpiak erakutsi behar izan dizkiet. Behin bakarrik makurrarazi eta eztul eginarazi didate, formalismoz-edo.

Azken aldikoak ordea, plazer bereziz egin zidan miaketa. Ez zidan utzi guztiz biluztu aurretik berriro ere janzten, gainera buruko ileak astindu zizkidan, oinazpiak eta behatz-arteak arakatu, besazpiak ukitu, ahoa ireki arazi. Bere latexdun hatza ipurtzulotik sartzea baizik ez zitzaion falta. Umilazioa. Plazer sadikoa.

**HAMAIKA BERTSO**

Kartzelan sartuz gero
hona hamaika bertso,
loturik dauzkat eta
hanka eta beso.
Beraz mingainarekin
egin dut eraso,
burua tente eta
barne indarra oso.

## LOA

Loa apurtzen ari zaizkit.

## DICKENS

Dickensek zioen isolamenduan oinarritzen den kartzela sistemari buruz «edozein tortura korporala baino krudelagoa» dela.

Konparazioetan sartu gabe ere bakartzeak pertsona xehatzea du helburu. Su txikian egostea. Askatasunaren hegalak ezin erabiliaren erabiliaz, usteldu eta eror daitezen. Pertsona kutxa batean sartu eta bere mugimenduak geldiaraztea du helburu. Hanketan kateak eramatea bezalakoa da.

[*Gurasoei liburuak ekartzeko eskatu nien. Bereziki Michel Foucault-en* Surveiller et punir*, liburu hori irakurtzeko egokiera ezin hobean nengoela pentsatuz. Ondoko esaldia kopiatu nuen kaierera*].

> **ZAINDU ETA ZIGORTU**
>
> «Zaintza iraunkorra ez izanda ere, zaindua izatearen eragina etengabea izan dadin; boterearen hobezintasunak agintearen agerpen oro hutsal bilaka dezan; arkitektura-aparatuak berak sortu eta bermatuko lukeen botere-harremana boterea duenarengandik independente izan dadin; azken batean, presoak, haien barren-barrenean txertatutako botere-egoera baten mendean harrapatuak egon daitezen».
>
> MICHEL FOUCAULT

## DOILORKERIA ARINTZEKO

*Philadelphia Society for Alleviating the Miseries of Public Prisons* (Kartzela publikoetako doilorkeria arintzeko Filadelfiako Elkartea) delakoak lortu zuen isolamenduan oinarritutako kartzela eredua indarrean jartzea.

Elkartekideak kuakeroak ziren, eta beraientzat preso oro zen «erreformagarria» («birgizarteragarria» liokete gaur egun), baldin eta erabateko isolamenduan badago. Konpainia txarretatik libre.



«Jainkoagana itzultzeko abagune hoberena» bakardadea dela uste zuten.

## BENTHAM

1822tik 1829ra egin zuten kartzela. 1791an Jeremy Bentham arkitekto ingelesak «Panopticon or Inspection House» lanean argitara emandako eredua oinarritzat hartuz egin zuen proiektua John Havilandek: begi erraldoiaren ikusmiran dago presoa, zaindarien nahikeriazko begiraden pean etengabe. Ziega bakoitzak du komuna, eta preso bakoitzak paseatzeko bere patiotxoa. Ziegatik egunean ordubetez ateratzeko eskubidea du, mozorroa jantzita!

Eredu horren arabera munduan beste 300 kartzela eraiki izan dira, Herbeheretan, Japonian, Argentinan, Belgikan, Finlandian… eta Frantzian, euskal herritar askok ezagutu duten Fresnesekoa.

## DPS/DSB/HKM

Euskal borrokalariak kartzelan sartu bezain pronto «DPS» zigiluz markatzen gaituzte: «Detenu Particulièrement Signalé». Hau da, bereziki *markatutako* presoak gara.

Horrek, kartzelaratu ahala alde txar batzuk ekartzen ditu. Puntakoena bakartzearena izan daiteke, egoera hori bermatzeko eraikitzen den izuaren antzezpenerako osagaiekin: bisitarik eza, komunikazioak moztea,...

Bakartzearena ordea, euskal borrokalarioi ezartzen zaigun zigor berezituaren hirugarren urratsa baino ez da. DPS izendapen horrek DSB hizkiekin adierazten genezakeen errealitate bat mozorrotzen baitute euskaldunon kasuan: Deserriratu, Sakabanatu eta Bakartutako presoa.

D hizkiak, beraz, desterrua edo deserriratzearen berri ematen du. Euskal Herritik kanpo eta urrun dauden kartzelatan giltzaperatzen gaituztenean, senide eta lagunengandik urruntzeaz gain herriarekiko loturak dira zaildu nahi dituztenak, azken finean borrokalaria herriarekin lotzen duten sustraiak agortu daitezen.

Bigarrena, sakabanaketaren S hizkia da. Euskal borrokalaria, borroka antolatu baten partaide da. Eta etsaiaren eskuetan erori eta kartzela batean bahitzen dutenean kolektibo baten partaide da. Sakabanaketaren bidez kidetasun hori da apurtu nahi dena, burkideen arteko loturak oztopatuz eta moztuz, kidetasunetik «norbanakotasunera» igaro dadin.

Hirugarrena, B hizkia, bakartzearena da. Bakartzearen helburua pertsona apurtzea da.

Deserrian, sakabanatuta eta bakartuta dagoen euskal gudariari nortasuna ezabatu nahi zaio horrela, panpina bat bezala apurtzeko eta botere sistemaren azken katenbegi den kartzelazainaren esaneko otzan bihurtzeko.

DSBari aurre egiteko antidotoa dugu ordea. HKM: herria, kolektiboa eta maitasuna.

Euskal Herriaren aldeko borrokan aritzegatik bahitu gaituzte: herriarentzako ari gara, herriarenak gara.

Bahituta gauden guztiok kolektibo bat osatzen dugu, eta kolektibo horren ildoaren arabera ekiten dugu.

Herriarekiko eta gure senide eta lagunenganako maitasunak eraman gintuen borrokan engaiatzera. Bakartze egoeran, maitasun horren sugarra da gure indarrik handiena. Inork ukitu ez dezakeen txokoan babesten dugu erasoetatik: bihotzaren habian.

**TXORIAK**

Txoriak han dabiltza,
saretik harantza.
Ni ere han nengoke
txoria banintza.
Antzara izan gabe
deitzen naute «Antza»,
horregatik naukate
begira gorantza.

**EGIA IZANGO DA**

Iparragirre omen da
gaizto eta deabru,
Antzak ba omen zeuzkan
milaka dokumentu,
biek dute isatsa,
sei hanka, bost buru...
Egia izango da,
etsaiak esan du.



## EZINTASUNAREN ERRESUMA

Kartzela, ezintasunaren erresuma. Mendekotasunarena. Mendekuarena. Helduak berriro ere haur bilakarazten den makina xehatzailea.

## UR AZPIAN

Bakartzea ur azpian murgilduta egotea bezalakoa da, lasto fin baten bidez arnastuz, doi-doi.

## BOLIGRAFOA

Jendarmeak erosi berria nuen boligrafoa kendu zidan miaketan. Gero ez zidan itzuli.

Abokatuei boligrafo bat lapurtu nien. Baina ziegara bueltatu aurreko miaketan zaindariak kendu eta abokatuei itzuli zien, «goian baduzu beste bat, ezta?». Bat ez, bi ditut, biak bukatzear, ordea. Gogorra izango da asteburua, auzokoak boligrafo bat eman diezadan ez badute onartzen zaindariek. Astelehen arte ez baitizkidate-eta ekarriko erositakoak.

Ezintasuna. Boligrafo bat! Hau miseria! Gehiegi ariko naiz idazten!

Ustekabean zaindaria etorri zait jendarmeak kendu zidan boligrafoa ematera. «Greffe-an ahantzi zenuen».

A! Tira! Asteburua salbu, idatz dezaket nahi edo ahal adina.

> **KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**
>
> BEHATXULOA [*Gara egunkarian argitaratutako Sonia Gonzalez idazlearen ipuin batean ikasia*].

## IMPECCABLE!

Leihotik entzundako bi presoren arteko elkarrizketa:

— Ça va? (Zelan?)

— Impeccable! (Ezin hobe!)

Zalantzan nago ironiaz edo benetan ari ote diren. Doinuagatik benetan ari dira, baina infernu txiki honetan nola egon daiteke inor *ezin hobe*?

## HERIOTZA

Kartzela hiltzea bezalakoa da.

Hiltzea da lehengo bizimoduarekiko, askatasunarekiko.

Hiltzea da, bizirik egonik.

Beraz, berriz jaiotzea bezalakoa da.

Helduak izanik jaiotzen garenez kartzelara, botereduenen helburua da presoa haur bihurtzea.

Batzuetan katez, ukitzen diren katez, erakusten zaio presoari bere muga. Besteetan ikusten ez diren kateak dira, pixkanaka-pixkanaka presoaren mugimenduak zamatzen dituztenak, bere ibilera dorpetzen dutenak.

Hil. Jaio. Haur bihurtu.

## SEXUA

Haurra, pertsona bezala baino bere sexuaren arabera hazi ohi da. Horrela da oro har gizartean, nahiz eta aldaketa sakonak egon diren eskolan eta lan munduan.

Kartzelak, bere zaindaritza eta zigor lana betetzeaz gain, gizartearen atzerakoikeria guztia biltzen du bere baitan: gizonak eta emakumeak bereizten ditu. Ez du sexuen arteko desberdintasuna gainditzea helburu, kontrakoa baizik.

Bere helburua, sexuan oinarritzen den zanpaketatik hasita (kontaktu sexuala debekatuz), bakoitzari bere sexuaren kontzientzia azpimarratzea da.

Sexu bereko preso-kideekin soilik harremanak izatera behartuz, gizonen kasuan bederen bere gizontasuna nabarmentzen dute. Edota *gizontasun* gabezia, baldin eta sexu joera homosexualeko presoa emakume izaerakoa den.



## KARTZELA

Kartzela. Hil. Jaio. Haur. Ez pertsona. Ar. Irendu.

**KARTZELA**

Kartzela da fabrika
izugarrizkoa
«HOMO HOMINIS LUPUS»
da bere leloa:
giltzapean sartzea
ez zaie nahikoa,
bertan ekoizten dute
mina eta malkoa.

## USAINA

Usaina. Zaindariak atea irekitzen duenean sartzen dena. Sarkorra. Lurrin gozoa. Gehiegi bota du eta ziega bete du. Itolarria. Leihoa irekita ere bere presentzia bertan dago. Ziegan bakarrik baina lagunduta egotea bezalakoa da. Nahi ez dudan konpainiarekin.

## GARDENA

Ez dut asko maite menuan dagoena. Hasieran ez hartzeko asmoa nuen, baina gero, itxuraren arabera agian hartu, dastatu eta maite ez izatekotan zakarrontzira botako dudala pentsatu dut.

Bazka hartzeko platera jarri dut.

Zaindariak asmatu egin du:

— Ez al duzu nahi?

— Ez.

Behatzaile iaioak dira, eta bakartutako presoa, animalia behatua, gardena da beraientzat.



## BAKARMORTUTIK ATERATZEAN...

Bakarmortutik ateratzean, denbora luzez indar eginez eutsita egon den besoaren moduko efektua egon daiteke: besoa askatuta, bera bakarrik doa gorantz.

Bakartuta egon denak, zigorretik ateratzerakoan aurrean jartzen dioten lehenarekin barruan duen guztiaz hitz egiteko *arriskua* du...

## LEIHOAK

Benetakoak, gezurrezkoak. Arnasbideak. Benetakoak, gezurrezkoak.

Hemen benetako leiho eta arnasbideak itxita daude, itsututa daude. Ziegako leihoa. Horman egindako zulo bat da leihoa. Horma sendoa.

Ziega aldetik kristaldun leihoa dago, kanpoaldetik burdinaduna. Barrualdetik sei burdina-barra etzan daude. Hiru kristal zati daude, bi estu eta zabal bat. Zabala da irekitzen den zatia, kanpora bultzatuz, goiko zatia zie-

gan sartzen da. Gehiago ala gutxiago ireki daiteke leihoa, horizontalean, burdinazko barren artean geratzen delarik.

Kanpoaldeko egiturak hiru barra horizontal ditu eta sare bat, diagonalki mozten diren burdinaz egindakoa.

Benetako leihoaren funtzioa argia sartzen uztea da. Ziegakoarena, presoa kanpora ateratzea eragoztea. Eta horretarako presoaren kanpoarekiko interesa gutxitzea.

## TELEBISTA

Telebistaren funtzioa presoa lokartzea da, zerbaitetan aritu dadin erraztea. Esfortzurik gabeko zeregina da gainera telebista ikustea. Droga modernoa. Herriaren opioa. Piztien lo-arazlea. Bestelako hezkuntzarako denbora ebaslea. Benetako leihotik adiera urruntzen duen sirena-dei gaiztoa. Irteerarik gabeko ihesbidea, denbora irenslea, kontzientzia irenslea. Hezi beharreko piztia arriskutsua.



## ARNASBIDEAK

Maite ditugun pertsonei idaztea. Maite ditugun pertsonak ikustea, ukitzea, musukatzea. Pertsona izaten jarraitzeko oinarrizko harremanak mantentzea.

Hori da debekatzen, zailtzen, oztopatzen dena.

Presoa kartzelaren elementu bilakaraztea da helburu.

Bere arnasbideak, harremanak kartzela barruan bila ditzan, egokitu dadin. Zigorra onartu dezan. Benetako bizitzak itolarria eragin diezaion eta gizonek eraikitako infernuan arnasa hartzen ikas dezan.

Kartzelan egonagatik pertsona aske izaten jarraitzea da erronka handiena.

## BIOMETRIA

Kartzelatik ateratzeko edo kontrol-gunetik pasatzeko nortasun agiri bat egin zidaten. Aurpegiaren argazkia eta eskuaren argazki *biometrikoa* duen agiria.

Agiria zirrikitu batean sartzen dutenean nire eskua jarri behar dute gailu batean, hatzek bertan dauden zedarritxo batzuk ukituz. Ondo jarriz gero

makinak onartzen du nire nortasuna. Bestela, behin eta berriro saiatu behar da, onartu arte.

Bart telebistan ikusi nuen eskola bateko jantokian sistema bera erabiltzen hasi zirela haurrak kontrolatzeko. Beren kodea sartu, eskua jarri eta makinak adostasuna ematerakoan erretilua agertzen zitzaien. Modu horretan haurraren presentzia ziurtatzen zuten.

Irakasleak oso pozik zeuden, horrela haurren bat falta bazen ordu bietarako posible zutelako gurasoak ohartaraztea. Lehen ordea arratsaldeko zazpiak arte ezin baitzuten abisatzen ahal.

Ikasleak ere pozik ageri ziren erreportajean: modernoa zelako, elektronikoa zelako eta norbaitek buruan sartutako bestelako arrunkeriak esan zituzten.

Niri horrorezko film baten promozio-trailerra iruditu zitzaidan.

## OKALAN

Okalan irla batean daukate bakartuta.

### BAKARTUTA

Bakartuta naukate
ez nago bakarrik,
zazpiehun gerade
sakabanaturik.
Herriaren arnasaz
gaude gu bizirik,
borroka egin gabe
ez da Askatasunik.

## GUANTANAMO

Guantanamo.

### KARTZELAKO HIZTEGIRAKO

GUANTAMOULINS

## LEIHOTIK BEGIRA

Leihotik begira nago.

Neska preso hartu dute, leku sekretu batera eramateko. Torturatzeko. Ez da mintzo.

Ziegara itzultzen dutenean, hortxe dauka ziega-kidea. Harrigarria iruditu zait, baina tira.

Ziega-kidea bere aurrean labainkatzen hasi direnean, presoarekin kupituta, torturaren bidez lortu ez dutena esaten die neskak.

Alabaina, presoa ez da benetako presoa, gorputzetik ateratzen zaion odola bezain faltsua da. Polizia da.

Neska bahituaren psikologia ikertuta jakin zuten torturaren bidez lortuko ez zutena lortuko zutela modu horretan.



### IRITSIKO DA GURE ORDUA ERE

Esperantzaren zuzia piztu genuen
eta ez zen itzali
etsipenaren basamortuan
aurreikuspen bat izan genuen
adorearen arbola landatu genuen
eta loratu egin zen.

[*Egunkarian irakurri eta kaierera aldatzea erabaki nuen Irlandako independentziaren aldeko boluntarioen oroitarriko idazkuna*].

## IKUSTALDIA

Arratsaldeko sei eta erdiak dira oraintxe. Etxerako bidean irudikatzen zaituztet laurak, neka-neka eginda.

Ez dakit ikusi nauzuen, Aintzik oparitutako paperezko ikurrintxoa plegatu eta zirrikitutik aterata agur egiten.

Nik zuek ondo baino hobeto ikusi zaituztet.

Leirek ikurrina atera duenean kolorez bete da udazkena, eta iruditu zait bele beltzek ere lumak aldatu dituztela, urdin, berde, arrosa, gorri; eta beren ohiko iseken ordez maitasun-kanta goxoa abestu digutela.

Inguruko ziegetan iskanbila ederra, leihora aterata denak galdezka hasi dira, «norentzat da? norentzat da?». Eta bizilaguna, horman joka «Mikel! Mikel!». Eta nik «bai, bai», ezin oihu egin eztarria eta begiak (oraintxe bezala) malkoz beteak nituelako.

Eta joan zarete, ni zoriontsu utziz.

Bota ditut zakarrontzira kartzelako bazkako xerra lehor hotza eta patata frijitu izoztuak. Leihoan dudan despentsatik urdaiazpiko azken xerrarekin eta brie gasnarekin bokata ederra egin dut!

Hizketan pasatu dugu ikustaldia, nik hitz egin dut. Bai motza! Eta zein betea! Nigatik, hasieran besarkatu garen bezala, mugitu gabe pasatuko nukeen denbora guztia. Isilik. Dena esaten. Malkoak trumilka aterako zitzaizkigun ordea! Eta diskrezioa ondo ikasi dugu. Eta gure barruak arrotzei ez erakusten ere. Horregatik, normal egon gara, eta barruan gorde dugu hainbeste urtetako banantzeak eragindako samina, urteek eta distantziak eta elkarri esan gabeko maitasun hitzen gabeziak ezabatu ezin dezakeen maitasun sakona, goxotasuna.

«Milesker, milesker!» esan dizuet agurtzerakoan... Badakizue ez naizela oso abila (gure familiako marka) sentimenduak agertzen eta are gutxiago ahoz adierazten. «Milesker» hori nire ohiko ez-asmatze linguistikoaren ondorio izan da. Baina zer beste esan nezakeen «milesker» ez bazen. Ez dut orain ere beste hitzik aurkitzen.

Horrelaxe egon gara bostok, elkar besarkatuta, eta nirekin Marixol zegoen eta hor ondoan Ane eta Jexux Mattinekin, eta Ioritz eta Aintzi eta Haritz eta Lidia Mikelerekin eta erdian Peru. Gure bizitza, gure zauria, gure poza, gure mina, gure iragana eta gure etorkizuna.

Lokutorio txiki horretan besarkatuta geunden, eta familiaz gain lagunak hurbildu dira, aspaldikoak, minak batzuk besteak ez hainbeste. Eta ezezagunak ere hurbildu dira isilik. Mundu bat. Herri bat. Une horretan gu goxatzeko.

Eta une berean beste zazpiehun preso goxatzeko. Eta sasian daudenak. Borrokan ari direnak. Kanpotik gogor, eta barrutik xamur-xamur. Guztiok

gure Herriaren askatasuna amets, ametsa gauzatzeko grinaz. Baldar askotan, bihotz zabal beti.

Herriarenak garelako, Herriarenak egin gaituzuelako eta Herriarentzat garelako.

Euskaldun jaio ginen
besteren menpeko,
borroka egin behar da
aske izateko;
dena eman dugu eta
ez gara damutuko,
Herriarenak gara
Herriarentzako.



## MAITASUN ADIERAZPENA ASKAPEN BORROKA FRONTETIK

Eskuak lotu dizkigute bizkarrean
Eta ezin fereka
Zaindarien oharkabean emandako musuan
Gure maitasunak zutik dirau

Hankak trabatu dizkigute
Eta ezin elkarrengana hurbildu
«Maite haut!» ozenetan
Gure maitasunak zutik dirau

Mehatxuz isilarazi gaituzte
Eta maitasun oihu gabe
Gure begiradetan
Gure maitasunak zutik dirau

Begiak itsutu dizkigute
Eta elkar ikusi gabe
Alboko ziegatik datorkigun presentzian
gure maitasunak zutik dirau

Gero
Banandu gaituzte
Urrundu gaituzte
Bakartu gaituzte
Elkarren berri gabe
Eskuak lotuta
Hankak trabatuta
Mutu
Eta Itsu gauzkate

Eta hala ere
Ferekarik gabe
Musurik gabe
Maitasun oihurik gabe
Begiradarik gabe
Elkarren presentzia txikienik ere gabe
Gure maitasunak zutik dirau.

Yzeure (2004-XI-13/14)



**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

HERRIMINA
MAITEMINA

## GIZALEGEA

Urdinei ez diet egunonik ematen, ez eskerrikaskorik, beharrezkoa ez bada (hau da beste ziegako batek egunkariak igorri eta emateko atea irekitzen didatenean, adibidez).

Medikua zegoen eskaileretan ni txangora ateratzen nindutenean. Zain. «Bonjour, monsieur» alaia esan dit. Eta nik bitan pentsatu gabe «Bonjour!» alaia ere (ez dakit «madame» esan ote diodan).

Ez ditut zaindarien aurpegiak ikusi. Lehen aldiz entzun didate hitza. «Monsieur» hori ote gakoa? Edo uniformea?

## TORTURA

Aspaldian entzuna nuen Espainiako polizia edo Guardia Zibilaren eskuetan egon eta gero, kartzelara iristea infernuaren amaiera bezalakoa zela burkide atxilotuentzat.

Niretzat, Frantziako polizien eskuetan egon eta gero kartzelaratu nautenean hasi da tortura.

## EZINDU, ZIGORTU, UMILIATU

Lehen urratsa: Bahituaren erreakzionatzeko eta hausnartzeko gaitasuna ezabatzea: ordu luzeak eskuak bizkarrean lotuta, argia piztuta polizia-etxea.

Bigarren urratsa: Bahitua psikologikoki zigortzea: «Bukatu da gerla», «Orain kartzelara urte askotarako», «Haurrak egun bat gehiago pasatuko du dagoen lekuan, ez duzulako jaio zen hiriaren* izena eman nahi izan», «Ez duzu emaztea gehiago ikusiko».

Hirugarren urratsa: Bahitua umiliatzea: DNA frogarako ahoa irekitzeko, uko egiterakoan galtzak kenduta galtzontziloak hartu; galtzontzilotan inguruak ikustera eraman; eskuak bizkarrean ura ahora eman nahi izatea; betaurrekoak kentzea; biluzaraztea, behin eta berriz; hatz-markak, argazkia, behin eta berriz; miaketa bitartean gauza pertsonalez trufa egitea, gauza pertsonalak berariaz apurtzea.



## BEGIRADAK

Ez dut beste presorik ikusten. Ez bada txangora naramatenean edo itzuleran haien atea aurrean geldituta, behatze zulotik deformaturik edota gimnasioko ateko kristalaren atzetik.

Ez dugu begiradarik gurutzatzen.

Zaindariei ez diet begiratzen.

Maite ditudanen begiradak ditut begietan ongi gordeta.

## HIZKETAN

Oihuka. Leihotik leihora. Edo atetzarraren alde batetik bestera.

Konfesatzea bezalakoa da. Ez dugu mintzakidea ikusten. Ez dugu ezer funtsezkorik esaten. Ez dakigu norekin ari garen. Eta hala ere, amaitzean, gure barne minak arinduta gelditzen gara.

## ERLEA, EULIA ETA INURRIA

Etzandako botila huts bat. Botilaren ipurdi aldean, kanpoaldetik, argi bat dago, kandela bat agian.

Botilaren barnean Erlea, Eulia eta Inurria daude, hirurak argira iristeko helburuz, botilatik irteteko ahaleginean.

Erleak bere burua jotzen du hiruren arteko azkarrentzat, ziur dago aterako dela. Badaki eta argitasunak erakusten duela irtenbidea. Hor dabil botilaren ipurdian, argitik hurbil-hurbil, askatasunetik hain hurbil. Hor egongo da indarrak ahituta hiltzen den arte. Erlea ez da aterako.

Eulia ere argiak erakarrita dabil. Bere hegalaldia ez da Erlearena bezain tematia, zoroa da. Batetik bestera dabil, kolpeka kristalaren kontra. Botilaren ahotik aterako bada halabeharrez izango da. Hara! Lortu du! Baina bere hegalaldiak botilaren ipurdian kokatutako argitik urrundu du, beste argi batzuek erakarrita, agian.

Hor dabil Inurria, gora eta behera, botilaren luze-zabal osoan, metodikoki. Ez du argia ahantzi ordea. Noizbait botilaren ahoa aurkituko du eta berriro ere patxadaz botilaren kanpoaldetik helburu duen argira iristea lortuko du.

### AMONA MANTANGORRI

Amona Mantangorri
hi haut lagun bakar,
hemendik kanpo ditut
gutxienez hamar.
Maitasun mezu honekin
hoa azkar-azkar
hegal txiki horietan
beste hamar ekar.

## IGORRI GABEKO GUTUNAK

Idatzi eta igortzen ez diren gutunen kontua. Bahituei egiten zaie.

Gaur irakurri dut Belgikako haur bahitzaileak hori egiten ziola neskato bati, gurasoei idaztera behartu baina gutunik ez igorri. Gurasoek bertan behera utzi zutela, ez zutela maite sinestaraztea zen helburua.

Bahitua errudun sentiaraztea, kanpoko munduarekiko harremanak moztea eta kartzelarekiko mendekotasun egoeran lotzea bilatzen dute, bere erruduntasuna ontzat eman eta kartzelan egotea onartzea.

Gutxika-gutxika «erosotasunak» eskaintzen zaizkio, bere «egunerokotasuna» betetzen da, badu zer irakurri, margotzeko tresnak, esku-lanen bat.

Ordura arte bizitako hustasuna eta bakardadea aurrerantzean bere aurka erabiliko den mehatxu bihurtuko da.

## BURDINA GORIZ ZEREBROAN

Kutxan giltzapetuta, pasabidean entzuten diren zaratek elkarrizketek barre algarek ezinegona elikatzen dute.



Zer ote da? Atea irekitzera ote datoz?

Zarata ezezagun bakoitzak, ulertzen ez dudan oihu edo elkarrizketa bakoitzak, iturburua asmatu ezin diodan barre algara bakoitzak burdina goriz irartzen dute nire zerebroko haragian «Ezin dut atea ireki. Ezin dut ikusi. Ezin naiz irten» errealitate gordina.

## ATEKO AFIXA

Zaindari batek nire abizenez deitu nau. Atean aldarrikapen afixa dut jarrita. Kentzeko agindu dit. «Bai, bai, gaur gauean» erantzun diot.

### GURE BELAUNALDIAREN ERRONKA

«Bizitzaren geroratzearekin amaitzea da gure belaunaldiaren erronka handiena ».

[*Egunkarian idazle bati irakurria. Ez nuen haren izenik hartu*].

## *AILETUNTXIKITUN*

Egunero bezala ziegatik kaiolarako bidean *Eusko Gudariak* abestu dut. Oihuak egin ditut. Irrintzia bota dut.

Pasabidean, ezkutuan, norbait kantari entzun dut: «Ailetuntxikitun ailetun aile, ailetuntxikitun ailetun aile, ailetun txikitun ailetun aile, ailetuntxikitun aile!». Ondoren barreak eta giltza zarata.

Elkartasuna? Trufa?... Zakurraren putza!

## ATEAK IREKI

Burdina-hesiko ateak ukitzeari uko egiten diot eskuarki. Haiek ireki ditzaten itxaroten dut beti. Beren zeregina da.

Ohartu dira eta beti saiatzen dira nik ireki ditzadan.

Gaur, irratia ekarri zidanak fakturaren ordaina eskatu dit: atea irekiarazi dit.

## BERRIRO

Berriro ere irekiarazi didate atea. Beste zaindari bat izan da.

Ziegan sartu aurretik minduta bezala esan dit: «Nik ez dizut zuri ezer egin».

«Ezta nik ere zuri», erantzun diot.

Baina, egia al da ez didala ezer egin?

### «KARTZELAN IKASTEN DA...»

«Kartzelan ikasten da instituzioaren gezurra, etengabeko iruzurra. Birgizarteratzerik ez dago, estamentu errepresibo hutsa da eta kito».

[*Iñaki Garcia Koch-ek egunkariko elkarrizketa batean esandakoa*].

## MUTU

Ez diet hitzik egiten.

Bazkaria banatzerakoan nire mututasunetik atera nahi izaten naute: «Pastak?», «Gehiago?». Kaiolara ateratzerakoan berdin: «Nora zoaz boligrafoarekin?». Eta gero, abegikor: «Gorde ezazu poltsikoan arazorik izan nahi ez baduzu».

## ARKATZA

Arkatza lortu dut. Medikuaren kontsultan, txosten bat hartzera altxa denean oharkabean kendu diot, boligrafo eta arkatzez betetako poto batetik.

## ISILTASUNA

Telebistaren mendekotasunetik askatzen. Irratiarenetik ere. Fraide etxeko isiltasunera ohitzen.

Kanpoko zaratek erakartzen naute, kasu gehiago egiten diet orain.

Gaur pasabidean «giroa» egon da, preso bat seko haserretu da eta oihuka eta gaizkiesanka aritu da munduaren kontra, zaindarien kontra.



Atearen alde honetan, ezintasuna eta ezjakintasuna.

## BAZKA-ERREFUSA

Kartzelako bazkaririk ez dut onartu.

Arratsaldean zaindariak gose greban ote nagoen galdegin dit. Ezetz esan diot. Kito.

**BAZKA**

Sukaldetikan dator
usain arraroa,
zer izango ote da?
Kezka da gaiztoa!
Prefabrikatua da,
eta plastikozkoa!
Guk nahiago genuke
txingar eta taloa.

## ATEAN KOX-KOX

Behatxulotik begiratzen dutenean, komunean nagoelako ikusten ez banaute, atean kox-kox jotzen didate.

Burua ateratzen dut presoren bat delakoan... zaindariak dira.

## SENDAGILEAK

Sendagileak jakinarazi dit niri ezarritako erregimena «erabateko bakartzea» dela. Esan dit ere besterik ere ezagutu dutela lehenago.

Normala iruditzen zait hainbeste urtez jendea sufritzen ikusi eta gero sentiberatasuna galtzea. Are gehiago, sentiberatasunik ez izatea, hemen lan egitea onartzerakoan halakorik baldin bazuen...

Kirola egiteko gomendatu dit, debekatua dut ordea kirol-gelara joatea. Berak azaldu dit zergatia, ez dago ordu librerik kirol-gelako plangintzan, eta ni bakartuta nagoenez ezin naute beste inorekin batera jarri. Segituan ohartarazi dit berak ez duela kartzelarekin zerikusirik.

Nire egoera gogorra dela ba ote dakien galdegin diot. Inozoa ni. Nola ez du jakingo bada?

Kartzelako sendagilearen lana ez da sendatzea. Ezinezkoa da. Kartzela gaixotzeko egina baitago. Beste bat da bere zeregina.

Argia piztuz loa apurtzen didatela esan diodanean, zaintze txandak direla argitu dit. Eta zozoa ni, berak esan arte ohartu ez naizelako! Ondo nagoen jakiteko eta ihes egin ez dezadan izango dela gaineratu du, hemengo agintariek esango luketen moduan.

Hortxe egin dut planto. Esan diot ez niola esango nire ustez jasanarazten didaten zigorrak zer helburu duen, ez baitagokio berari halakorik entzutea, baina idatz dezala egoeraren ondorioz «hauskor» nagoela.

Tortura zientifikoak sendagileen beharra du.

### BERRI GABE

Hilabete pasa da
haurra ez dut ikusi,
bere Amaren berri
hona ez da iritsi,
nire berri ez dute...
malkoak irentsi,
bihotzaren habian
gaude eta ez etsi!!

## LEIHOKO SAREAK

Duela astebete kendu zituzten isolamenduko leihoetako sareak. Nirea ez beste guztiak.

Herenegun ohartu nintzen astebetez egon direla beste presoak sarerik gabe. Ohartzerako hor datoz burdina-barra berriak jartzera. Ez dira sareak, sendoagoak dirudite ordea.



Bizpahiru egun pasatuko dute egun osoa lanean. Langileak haien artean hizketan, inoiz, zigarretak errez, gu bertan ez bageunde bezala. Lan teknikoa da. Kaiolatutako piztiontzat, enetzat bederen, krudelkeria izugarria erakusten duen zeregina.

Presoaren giza kontzientzia kolpatzen duen mailukada berria da: nola espetxeratzen duten zuzenean ikusten du, espetxea bere begien aurrean nola berritzen eta indartzen den erakusten zaio, bere erresistentzia zapuzteko ekimen lotsa gutxiko eta mingarria.

### KARTZELAKO HIZTEGIRAKO

BURUGARBIGAILUA: Telebista.

## LANGILE ESANEKOAK

Sudurren aurrean aritu zaizkit sopletearekin, mozteko tresnekin, burdina berriak ongi tinkotzen.

«Garaiz bukatuko dugu!», esan du batek.

Langileak dira, soldatapekoak.

Atea ireki eta ixten didatenak bezalaxe.

Torlojuak dira, sistemarenak, urka-bilurra estutzen dutenak.

## «NIKEZDAKITEZER»

Pilato txikiz betea dago hierarkia guztia. Boleibolean bezala batak besteari baloia pasatzen dio. Aldea, baloia pertsona baten egoera dela.

Horrela, inork dena egin gabe, denen artean estutzen dute kondenatuaren zintzurra. Lan banaketa. Horrela funtzionatzen du sistemak. Hori da oinarria: ardura-gabezia orokorra, menpekotasuna, boterea duenaren oinak musukatzea makur-makur eginda, eta ardura partzial zehatza: «Nire lana zure atea ireki eta ixtea besterik ez da, kito».

Zerbait behar baldin baduzu, hari edo halakori galdegiteko esango dizute. Eta erantzunik ez jasotzekotan, lasai, tematzeko, erantzungo dizutela eta noizbait: joateko beste inora... antzarak ferratzera!.

## HAMAIKA ORDU

Hamaika orduko bidaia egingo dute senideek, bi orduko ikustaldia emango digutelakoan daude. Ez dakite ez dutela onartu.

Koldarkeria eta giza miseria. Aurpegira esan ziezadaketen: ordubeteko bisita izango duzu beti. Eta kito!

### AZKENEAN

Ia bi hilabetez
haurra ez dut ikusi
bere amaren berri
hona ez da iritsi
nire berri ez zuten...
malkoak irentsi
bihotzaren habian
gaude eta ez dugu etsi.

## HEZIKETA

Hezten naute, piztiak bezala.

Ikustaldirakoan neuk ireki dut isolamendu-moduluko atea. Pozik nindoan.

Itzuleran, ohikoaren kontra, ez zegoen inor isolamendu-moduluko ate ondoan nire zain. Ziegako ate ondoan nituen zain «afaria» zerbitzatu eta beren zeregina ahalik eta azkarren bukatzeko. Bakarrik nengoen burdina-hesiaren aurrean. Nahita utzi naute bakarrik, atea ireki dezadan.

Oharkabean ireki dut, hartu dut jatekoa eta giltzapetu naute.

## ZOMORROAK

Ez dago zomorrorik. Negua hurbil delako, agian.

## MIAKETA

Txangorakoan, kaiolara noan bakoitzean, ziegatik irteterakoan haztatuz miatzen naute.



Batzuek, eskuak arin pasatzen dituzte arropen gainetik; beste batzuek ordea, gorputz atal batzuk ukitzen dizkidate, edo enborra.

Ukitzen ez nautenean oparia da niretzat. Ukitzen nautenetan, burua goratzen dut nire nazka, desadostasuna eta ezinegona argi erakutsiz.

## NOR HAIZ HI?

Iskanbila presoa eta zaindariaren artean.

Belarria atean jarrita entzuten dut. Azkenean zaindariak: «Ez, nik ez diat hika egin!».

Eta segituan bere jokabidea presoaren aurrean arrazoitu izanaz damututa edo: «Eta gainera, nor haiz hi?!».

## ESNATUKO ZAITUT

Argitxoa piztu dut gaueko zaindariari deitzeko.

Atzo hamaika laurden gutxiagotan deitu nion. Hamaiketan zutela zaintza-aldaketa esan zidan zaindariak ate-ostetik.

Beraz, gaur, hamaikak eta bostean sakatu dut kanpoko argi gorria pizten duen botoia.

Hogeita hiru minutu berantago agertu da Begia, behatxuloan. Bezperakoa errepikatu diot: «ohera noa, oso ondo nago, argia piztuz ez esnatzea eskatzen dizut». «Zergatik?», galdetu dit. Nirekiko... «nola zergatik? Zergatik ez nauen esnatu behar?». Azalpena eman diot berriro, argia pizterakoan esnatu egiten nautela, alegia. «Tant pis», erantzun dit, «ziega kontrolatzeko piztuko dugu».

Goizeko laurak hogei gutxiagotan esnatu nau, bete du bere zeregin krudela.

## LOA (bis)

Gu bahitzera etorri zirenean emazteak entzun zituen. Horregatik ez gintuzten ohean harrapatu. Emazteak semeari zer gertatzen zen esplikatzeko denbora izan zuen. Lo arina, intuizioa... Auskalo.

Beraiek iritsi aurretik esnatu ginelako ari ote dira gure loa apurtzen? Segur aski ez, baina neurriko zigorra dirudi, beren ikuspegitik.

Emazteak horrela dio jaso dudan gutun bakarrean: «Egun gogorra izan da gaurkoa. Gaua horrelakoa izan baita, goizeko ordu batak aldera edo, polizien orduan alegia, atea joz esnatu naute. Ez omen ninduen ikusten! Akabo gaua, eta akabo eguna! Kanpora atera naizen arte ez naiz lasaitu. Itzuli batzuk eman patioari eta hobeto nengoen. Dutxa azpian botatako kantaldiak ere on egin dit. Gainera, ezin dut jakin nor izan den gauean esnatu nauena. Goizeko bostak aldera edo aldatzen dutelako txanda. Hala ere, denak dira gauza bera egiteko gai. Atea irribarretxo batekin irekitzen dutenetatik hasita. Zer moduz moldatzen haiz hi?».

## LEHEN GATIBU-GAUAK

Baionako polizia-etxeko ziegako ateko etiketan «X-H1» jartzen zuen. Ongi zekiten arren nor ginen. Emaztea «X-F1» zen.

Lehen gaua, tapakirik gabe egin nuen. Bazegoen bat, zikina, pixez betea iskina batean. Goizaldean, emazteak hotz zela-eta tapaki bat eskatu zuenean harexen bila etorri ziren. Emaztearen oihuak entzun nituen ziega blindatuaren hormak trabeskatuz.

Ez ziguten argia itzali gau osoan, ahotsak, barreak, iskanbila etengabea. Une batez grabaketa bat zela pentsatu nuen... Ez zitzaidan iruditzen posible zenik polizia-etxean jendeak gau osoa isildu gabe ematea!

Bigarren gauean hobeto deskantsatu nuen, ordurako leher eginda nengoelako (guztira hogeita hamar ordu eman ditut eskuak atzean lotuta, jarrera deserosoan) eta jaka bat hartu ahal izan nuelako estaltzeko.

Hirugarren gaua Barne Ministerioko ziega blindatuan egin nuen, argia piztuta eta kameraz zainduta une oro, Baionan bezala.

Hortik aurrera ez dut gaua eta eguna bereizten. Justizia Jauretxera garamatzate gauez, ziega batean sartzen naute, zurezko hiru ohe bata bestearen gainean, koltxoirik ez, tapakirik ez, hezetasuna, hotza, argia piztuta, Baionan eta Barne Ministerioan ez bezala hemengoan leiho bat dago burdina eta sarez estalia. Hogeita hamar bat ordu ematen dut hor barnean. Bitan ateratzen naute, behin instrukzio-jujea ikustera gaueko hamabietan; bigarrena askatasun jujea ikustera goizaldeko lauretan. Amesgaizto bat bezala dira ordu horiek.

Goizeko lauretan, lau polizia mozorroturekin autoan sartu eta 190 km./orduko abiaduraz kartzelara nakarte. Zazpietan ohean sartu eta hamar t'erdietan Zuzendariak eta Zerbitzu-buruak hamar minutuko «bilera» batean nire isolamendua jakinarazten didate.



Geroztik 50 gau pasatu ditut kartzelan. Lehen egunetan ez nintzen asko jabetzen gertatzen zenaz... Bosgarren gauean edo jabetu nintzen nire esnatzearen arrazoia argi-pizketaren ondorio zela.

Zortzigarren gauaz gero esnatzen ninduten bakoitzean ordua apuntatzen hasi nintzen. Beraz, berrogeita lau gau ditut kontsignaturik eta horietatik hogeita lautan esnatu egin naute. Esnatu ez nauten gauetan ere bakarrik esnatzen naiz. Gogoan dudanez, denbora guzti honetan bi gau oso eta lasai baino ez ditut egin.

Gizarte modernoak, lo arazoak dituztenentzat klinikak sortu dituen moduan, zigor gisa loa galaraztea onartzen du. Kartzelako medikuei bederen ez zaie nabarmentzeko kontua iruditzen.

### ARGI-PIZKETA

Goizeko lauak dira
eta zer arraio!
argia piztutzea
bururatu zaio!
Bertan ote nagoen
kezka duk lakaio?
Hormako zulotikan
esan nian aio.

## IGANDE ARRATSALDEAK

Udazkena. Igandea. Euria. Isiltasuna. Arratsalde aspertuan preso batzuk atetik atera elkarri oihuka ari dira hizketan.

Oihuak entzuten ditut, baina ez naiz ohartzen zertaz ari diren. Muskuilua bere oskolean bezala nago. Ireki ezin dudan ateari bizkar emanez, ate horretatik kanpo gertatzen denari kasu gehiegi egin gabe.

Bat-batean, preso bat oihuka hasi da: «Non à la dispersion». Eta gero «Vive l'ETA!». Bigarren eta azken ostiraletako nire manifestaldietako oihuak ondo ikasi ditu. Oihuka egiten baitut ziegatik kaiolara eta itzulera ere.

Eta jarraitzen du: «Non à la réinsertion!». «Non à la Star Academie!». «Solidarité».

Igande arratsaldea da. Ohiko asperdura askoz ere lodiagoa da kartzela barruan.

## UMOREA

Irribarrea eta umorea deportaturik daude. Hemendik kanpo.

Kontrabandoz sartzen dira. Presoek elkarri pasatzen diote. Miaketa guztiak gaindituta. Baina norbait behar baino umore kargamentu handiagoarekin harrapatuz gero zigortu dezakete. Irribarrea eta umorea subertsiboak dira mina eta malkoa gailen izan behar diren izuen gordelekuotan.

## *EUSKO GUDARIAK*

Orain ziegatik atera bezain pronto hasten naiz *Eusko Gudariak* kantatzen. Lehen txango-patioan egiten nuen bakarrik, zaindariek burdinazko atea itxi eta gero, ukabila altxatuta.

Orain lekukoekin kantatzen dut.

Zaindariek ez dituzte oihu eta harrabotsak maite.

Kantatzen hasten naizenean zurruntzen dira. Ez dakite nola erreakzionatu (oraingoz) eta gero *Eusko Gudariak*-aren erritmora eramaten ditut ene aurretik eta atzetik, kaiolan giltzapetuta uzten nauten arte. Horman zizelkatu dudan ETAren anagramaren aurrean ukabila altxatuta, ereserkia amaitzen dut.

**GRAFFITIAK**

Horma, burdin eta sare,
ate eta maratil,
munstroaren azala
tatuatzen nabil,
harri txintxar batekin
ez naiz oso abil,
baina «LORTUKO DUGU»,
«ABERRI ALA HIL».

MIKELEK

Munstroaren azala
tatuatzen nabil,
harri txintxar batekin
marra ta biribil.
Hormak gogorrak dira
ez naiz oso abil.
Betiko idatzi dut
«Aberria ala hil».

MARIXOLEK



## MIAKETAK

Bi miaketa mota dago. Bata, benetakoa da, zehatza. Helburu argia duena: presoa jaio zenean bezain esku-huts doala egiaztatzea. Arropak ere xehe-xehe miatzen dituzte.

Bigarren miaketaren funtzioa oso bestelakoa da. Helburua ez da presoak gainean izan dezakeen zerbait antzematea. Miaketa arinegia da horretarako, eskuez gorputza haztatuz egiten da. Batzuek sakonago egiten dute, besteek arinago. Helburua presoak gainean daramana harrapatzea izatekotan alferrikakoa da miaketa mota hau.

Beste bat da helburua, nork agintzen duen erakustea, alegia. Presoari bere egoera zein den ahantz ez dezan oroitaraztea. Umiliatzea. Zaindaria

presoaren gainetik dagoela oroitaraztea. Zaindari batzuek gogogabe egiten dute zanpaketa-lan hori, ziega ireki eta ixteak ematen dien boterearekin aski eta sobera balute bezala. Beste batzuek ordea, gogoz egiten dute, hitz bat azpimarratzen denean bezala (miaketa sakona hitza ezabatzea bezalakoa litzateke). Agian, miaketa sakontxoago horiek egiten dituztenek nolabaiteko plazer morbidoa sentitzen dute ere.

Zalantzarik gabekoa dena zera da: edonolako gorputz-miaketak presoa pertsona gisa gutxiesten duela, umiliatzen duela, zanpatzen duela, eta nazka ematen duela.

Azken sentimendu hori, nazkarena, da botereak miaketaren bidez sortu nahi dituenen artean ez dagoen bakarra, eta, ondorioz, kontrola ez dezakeena.

**MIAKETA**

Haiek nahi dutenean
behar naiz biluztu,
ziegako txoko denak
dituzte miatu...
Hala ere hortxe daude
larri eta estu,
buruan zer daukadan
ezin dute asmatu.

## «VOUS N'ETES PAS SEUL!»

Atzo jakin nuen istripua izan zuela beste bahitu baten senitarteko batek. Kalte fisikorik ez. Baina istripua izan duen orok daki zer eragin duen horrelako takateko batek, nahiz eta zauri ikusgarririk ez izan.

Afixak berritu ditut. Plana egin dut. Berandu arte egon naiz. Goizean, ohi bezala, ziega ireki didate zakur zintzoak bezala itzuliñoa egitera joan nadin. Ohiko itxurazko miaketa egin eta hasi naiz dispertsioaren aurkako oihuekin eta euskal presoak Euskal Herriratzea aldarrikatuz.

Azken egunetan ziegako irteera *Eusko Gudariak*-ekin agurtzeko ohitura nuenez, harritu egin zaizkit. Espero gabekoaren aurrean larritu egiten dira. Eta zer esan ez dakitela gelditzen dira. Zerbait esan behar dute ordea, eta ha-

laxe bota dit, «vous n'etez pas seul!», alegia, ez nagoela bakarrik. Norbaiti meditazio saioa eragozten niola edo esan nahiko zuen.

Ez diedanez hitz egiten ez diot hariari tiratu, baina iruditu zait ateraldiak bazuela, eta baduela, mamirik: Seul, isolé, bakarrik, bakartuta; ez zaude bakarrik, ez zaude bakartuta...

## GUTUNIK EZ

Gauza txarra da zain egotea, egunero, postariak ekar dezakeen aire freskoaren zain, kutxan sartuta: «Oraingoan bai, ekarriko dik!».

Eta, batzuetan, ekartzen du, baina ez espero dugun huraxe: emazte maitearen gutuna. Laster bi hilabete. Gutun bakar bat. Duela 10 egun. Behin eta berriz irakurritakoa.

Hiru eta erdietan irits daiteke, lau eta erdietan, bostetan ere... txarrenean bost eta erdietan. Eta bost eta erdietan ez badator, agian berandu egingo zitzaiela pentsatzen jartzen naiz, eta ordu laurdeneko epea luzatzen diot esperantzari, «Gaur, bai» izena duen behar gorriari.



«Gaur ere ez» da erantzuna, ordea.

Ez da halabeharra, ez da kontrola ez daitekeen zerbait. Norbaitek bere eskuetan gordetzen ditu nik jaso behar ditudan gutunak. Eta ondoan ditu nik igorri ditudanak. Hortxe daude gutunak, marmarka, batak besteari amodiozko hitzak klandestinoki pasaraziz. Begi arrotzek ulertu gabe begiratzen dituzte, fotokopiatzen dituzte, hola-hala berriro ere esku arrotz berek gutun-azaletan sartzen dituzte, hain maitekiro prestatutako gutun-azaletan, orain zabarki.

Irekita ematen ditugu gutunak, ezkutatzekorik ez baitute gutun-azalek barruan. Eta horrexegatik, gehiegi erakusten dutelako, gehiegi esaten dutelako, itzali ezin den adore, grina eta maitasunez sutan daudelako, beren bidea egiten utzi gabe, bahituta geratzen dira etsaien bulego arrotzetan, asteburu luzetan, gau bakartuetan inork beren oihuak entzuten ez dituztela.

Gutunak bederen elkarrekin daude, hartzaileek izango duten pozari buruz ariko dira orain. Begirada eta haize korronte hotzen aurrean, etsipenari lekurik egin gabe, barnean duten goxotasuna epel mantenduko dute.

Beste egun bat, eta beste bat, astebete jada. Igorleek etengabe idazten dute, gutun bahitzaileak amodiozko gutunez bonbardatzen dituzte. Bi hila-

bete laster maitea, gutun bakar bat, bakarmortuko ur tanta bat bezala, uholde bat ene bihotzean.

Zain egotea txarra da, okerragoa da baina esperantzarik ez izatea. Iritsiko zaizkigu. Eutsiko diogu. Maite haut. Betirako.

### GURE ZILBORRESTEA

Gure haurraren begiak
bertan naiz murgildu,
igeri egin gabe
han zaitut aurkitu.
Bera da zilborreste
arnas eta ispilu
musukatzen dudanean
musukatzen zaitut
TRALA LARA LARALA
musukatzen zaitut.

## ESALDI BATZUK

Gorputzak ez du hesirik.

Arimaren odola dira malkoak.

Gurpila aurrera doa bidean, ondo markatutako norabidean. Lasai nago.

### BIHOTZETIK ERAUZI

«Pertsona bere herrialdetik erauz dezakezu, baina ez herrialdea pertsonaren bihotzetik».

[*Egunkarian irakurri nuen*
*John Dos Passos-en aipu hau.*
*Nire burua islatua ikusi nuen*].

## BELDURRAREN ERREGIMENA

Kartzela hau eta bertako ostalierrak ezagutu ditudan neurrian, zein erregimen den gurea ohartzen naiz: Beldur Erregimena. Haiek dutena, eta guri eragin nahi digutena.

Kartzela sistema beldurtzeko, kikiltzeko egina dago. Pertsonaren berezko joera sakonena kamusteko, irensteko. Norberak egin nahi duen horretatik, bestek egin nahi duen horretara behartzeko. Arauak eta aginduak. Eta presoa beti menpeko. Ez du eskubiderik. Eman egiten zaizkio. Kentzeko mehatxuarekin.

Betaurrekodunok errazago dugu sistema hau irudikatzea. Betaurrekoak kentzea bezalakoa da. Ortzi-muga hurbiltzea, difuminatzea. Erdi Aroan, salbaiagoak zirenez, zuzenean itsutu egiten zituzten, mundutik aparte ziega-zulo ilunetan, gaixotasunez, gosez hil zitezen. Eta senitartekoak deserriratzen zituzten.

Gaurko zigor sistema haren oinordekoa da. Eta itxurak eta moldeak aldatu baditu ere, bere sakoneko izaera sustrai berekoa da: pertsona deuseztatu, ezindu, erauzi. Orain «aldatu» deitzen diote, «birgizarteratu».

Hortxe gauzkate, gutxi gora behera.

**BERTSO-IRAGARPENA**

Jatea beharra da,
edatea ere,
biak utziak ditut
duintasun eske.
Eskubide guztiak
kendu dizkigute
ez dugu ez etsiko
eskuratu arte.

*[Azaroaren 10ean bertso hau egin nuenean ezin nezakeen irudikatu hilabetea baino lehen iragarpena beteko zenik].*



## HAREA-ALEAK SISTEMAN

Egunak aurrera joan ahala, preso bilakatu gabe pertsona izaten jarraitzen dugunez, sistema horren araubideetan harea-aleak bilakatzen gara.

«Denak gara errugabe» kartzela-esaldi klasikotik at dagoen zerbait da. Ez da ere «gu ez gara hemengoak» soila. Baizik eta gure borroka eta borrokaren ondorioz egin ditugunak juzgatu eta behar izanez gero zigortu ala sa-

ritzeko lekua hau ez dela adieraztea da, eta ahalmena ere ez dutela jakinaraztea.

Guk frantsesa hitz egiten dugu, ulertzen dugu, ulertzera iristen gara. Baina haiek ezin gaituzte ulertu. Onartzen duten gauza garbi bakarra zera da: beste zerbait dela gurea. Eta, noski, ez dute aztertu nahi zer den, lehen azterketa-frogekin segituan lortuko luketelako emaitza: «askapen borroka bateko borrokalariak dira, herritar xumeak dira, erresistenteak dira». Eta hori ez da konpontzen zigor eta sententziekin. Horrek konponbide politikoa du.

Horrexegatik uzten gaituzte ez ikusi eta ez entzun egiten duen «justizia» polizial baten hatzaparretan. Zigor arrosarioa aurrez ikasia eta aldatzeko aukerarik ez duen makina gero eta gupidagabeagoaren beso odoleztatuen artean.

Hortxe gauzkate! Hementxe gauzkate. Noski, kanpotik begiratzen duenarentzat, esan nahi dut sentimenduz inplikatua ez dagoenarentzat, jasaten dugun injustizia ez da hainbesterako: senideak ikusten ditugu, idatz dezakegu, jan eta lo egiten dugu, telebista dugu!

Haien kontzientziaren lasaigarri honokoa erabiltzen dute: «okerrago izan zitekeen». Eta pentsamendua eratu bezain azkar, bere egoera injustuagatik protesta egiteko asmoa lukeenari honoko mehatxua egiteko aukera ikusten dute: «kontuz, okerrago izan daiteke!». Eta kontzientzia lasaitzen dute. Beren sistema inperfektua dela onartuz... baina dagoen hoberena dela argudiatuta.

Beraz, lehendabizi beldurtu, gero pixka bat laxatu, okerragoa izan daitekeela ikustarazi, gero «erosotasunak» eman eta azkenerako, pertsona preso bihurtu: etsipena, ezinbestea, «horrela da», eta kito.

## ANTOLAKETA ETA BORROKA

Gureari dagokionez, ondokoagatik da hain garrantzitsua antolaketa eta borroka: kartzelak inposatzen duen erritmoaz at, gure borroka eta ekimen bidea eraikitzea, pertsona izateari utzi gabe, borrokalari izaten jarraitu.

Kanpora begira gara preso. Ez barrura begira.

## AMETSAK GAUZATU

Askatasuna amets
nituen armak hartu,
etsaiak kolpe batez
nau kartzelan sartu.
Kateak apurtzeko
borroka indartu,
denok zerbait emanez
ametsak gauzatu.

## DENBORA

Denbora igarotzen da. Edo denbora egin egiten da.

Denborak zamalkatzen gaitu. Edo denbora zamalkatzen dugu.

Denbora doa. Edo denbora dator.

Denborak egiten gaitu. Edo denbora egiten dugu.

Denbora gure menpe.



Denborak zaintzen gaitu. Edo denbora zaintzen dugu.

Denborak agintzen du. Denborak guk agintzen dioguna agintzen du.

Denborak bere sistema du. Guk gurea aurrejartzen diogu.

Denboraren zurrunbiloan, denboraren arrabolaren azpian erori gabe, guk jotzen dugun doinura luzatzen edota laburtzen da denbora.

Gu gaituzte preso. Baina denbora gurea da.

## ASTROEN DANTZA

Eguna pasatzen da
poliki-poliki
Ekia ez dut ikusi
oso aspalditik
ezta izarrak ere
ilargiarekin
buruan denak ditut
dantzan elkarrekin.

## KENDU HORI HORTIK!

Borroka-ekimen eguna dudanean, afixa jartzen dut atean. Goizean, irekitzean ikusten dute.

Oraindik ez dakite arautegia, baina ari dira ikasten.

Ni haiena bezala.

Egunean zehar ateko afixa kentzeko esaten didate.

Nik ez dut erantzuten, baina pentsatzen dut «kendu, bai, kendu 'isolamendua', kendu 'sakabanaketa'».

Lehengoan beraiek kendu zituzten sakabanaketaren auka ezarriak nituen afixak. Ohe gainean utzi zizkidaten.

Afixa bera erabiltzen dut beti, artaziz eta kolaz, izuaren zenbakiak gehitzen dizkiot. «40» jartzen dut «39»aren gainean, «1» kolatzen dut «110»aren «0»aren gainean. «20» kolatzen dut «19»aren gainean, «4» kolatzen dut «3»aren gainean.

Astebururoko euskal preso politikoen senitartekoek hautatu gabe parte hartzen duten herio tonbola franko-espainiarraren zenbakiak dira.

15 ez dut aldatu behar izan. Ez dezadala inoiz aldatu beharrik izan!

15 senitarteko eta lagun hilik.

40. istripua aurten, 111 zauritu/kaltetu.

Azken istripua azaroaren 20an gertatu da.

Isolamenduarena desagertu da. Ziegako horman neukan. Norbaitek eraman du *souvenir* gisa? Grafologia-frogaren bat egin nahiko dute? Charles Dickensen esaldiarekin osatu nuen, atsegin izango zuten: «Isolamendua edozein tortura fisiko baino krudelagoa da». Auskalo, konparazioetan sartuta... baina krudela bada.

Arratsetan, ohar taularaino joaten naiz. Horretarako ateko dei-argia pizten dut. Irekitzerakoan, «ohar taulara noa» esaten diet. Asteko menua bertan jartzen dute. Biharamuneko «menua» apuntatu eta borroka-egunari dagokion afixa kolatzen dut. Gutxi irauten du, badakit, segituan kentzen dute. Badakit ere haiek bakarrik ikusten dutela. Gainontzeko preso guztiak beren ziegetan baitaude.

Lehengoan, zer jartzen zuen begiratu ere egin gabe, nire aurrean txiki-txiki egin zuen zaindari batek: «zertarako jartzen duzu? Ez zara konturatzen ez duela merezi?».

Gaur eri diren euskal preso politikoen askatasuna eskatzeko afixa jarri dut. Zaindaria haserretu da. Nire abizenez deitu nau, «kendu hori hortik!» agindu dit. «Horixe baietz, pentsatu dut, 'kendu' itzazue bai kartzelatik Barandalla eta Rego; kenduko nituzke nik, ahal banu...». Ez entzunarena egin diot. Beste zaindariak uzteko keinua egin dio.

## ISILTASUN ZARATATSUA

Bi hilabete bete dira etsaien eskuetan jausi ginenetik. Bi hilabete bahituta... isolatuta. Isolamenduak modu asko izan ditzake. Niri, lehen, isiltasunarekin lotutako irudipena eragiten zidan hitzak... Nik ezagutu dudan isolamendua ez da isila. Ez da RAFeko iraultzaileak espetxeratuta izan zituzten tortura zuriaren antzekoa.

Isolamendu zaratatsua da. Isiltasun zaratatsua. Isolamendu mota hau presoa eta munduaren artekoa da. Mintzaide bakarrak zaindariak dira. Eta saiatzen dira gogotik hitz egin arazten. Eraikia dudan horman pitzadurak eragiten.



Isolatuta nago, baina ahotsez, elkarrizketaz, hitzez betea dut burua. Emazteari idatzitakoak, arrebarekin izandako elkarrizketa ustezkoa... Isolamenduan, hitzak preso daude, bizi dira, baina ezin dira gure ahotik atera. Eta batzuetan, nire burua konbentzitu behar izaten dut, halakoarekin elkarrizketa eduki izana ezinezkoa dela, ez bainaiz aurrez aurre egon ez pertsona horrekin ez beste inorekin, hemen sartu nindutenetik. Hizketan ari naiz, isilik.

## KIROLA

Bi hilabetez eduki naute 23 orduz ziegan sartuta.

Ia hastapenetik jakin nuen isolamenduko besteek kirola egiten zutela. Eskubide hori aldarrikatu nuen niretzat.

Azkenean, tartea aurkitu didate, arratsaldean, ordu batetatik hiruretara noa kiroldegia deritzon gelara. Bi ziega elkarturen tamainakoa da. Jadanik

30 km. egin ditut bizikletaz, soka saltoan lau jauzi jarraian egitea lortu dut, *putching-ball*-ari sekulako kolpeak eman dizkiot eta beso-ariketak, ziegan ez bezala, leihoaren edo ziegako armairu modukoaren aurka jotzeko beldurrik gabe egin ditzaket. Saioa bukatzeko kirol-lastairan etzaten naiz erlaxazioa egitera. Eguzkia denetan eguzkia sartzen da.

Bi hilabetez utzi naute usteltzen, elbarritua, besoak eta hankak lokartzen, abailtzen.

**GOGORTZEN**

Gogortzen ari zaizkit
hanketako zainak,
Eta moteltzen ari zait
baita ere mingaina,
non dago itsasoa,
non dira mendi-gainak?
eskuak fereka minez
eta umezurtz dut soina
TRALA LARA LARALA
umezurtz dut soina!



## NORK EGIN DU HORI?

Bainugelatxoan dago zakarrontzia. Zakarrontziaren estalki gainean, lurreko hautsa kentzeko erratz txikia dago.

«Nork jarri du hor?», galdetzen diot harrituta nire buruari. Nik jarri dut, noski. Oharkabean. Ez naiz noiz izan den jabetzen. Baina ziurtasun osoa dut ni izan naizela. Isolamenduan nago, ziega itxita dago. Hirugarren estaian gaude, ezin da inor igo, eta leihotik sartu. Bost eta erdietan afaria zerbitzatzen etorri direnetik ez du inork atea ireki. Ni izan naiz, beraz.

**BERTSO-IRAGARPENA BETETZEN**
(abenduaren 4an)

Jatea beharra da,
edatea ere,
lehena utzia dut
duintasun eske.

[*Abenduaren 3an utzi zidaten lehen aldiz isolamenduko gimnasio txikira joaten. Iluntzean ozta-ozta harrapatzen nuen irrati espainiarrean tertulianoen trufak entzun nituen, Marixol Iparragirre gose greban omen zegoela kartzelako baldintzengatik protesta egiteko. Biharamunean gose grebari ekin nion, kartzeleroei deus esan ez banien ere. Astelehenean, abenduaren 6an, senideen ikustaldian jakin nuen gose greban ez ezik egarri greban ere bazegoela Marixol, astebete zeramala. Abokatuaren deia jasotzekotan zeuden ikustalditik aterata. Arrebarekin kodea adostu genuen: nire ziegatik kartzelaren atzealdeko errepidea ikusten zenez, autoa bertan gelditu eta greba bertan behera utzi bazuen irrintzi egingo zidala. Ez zuen irrintzi egin. Hiru egun neramatzan barau eta ordutik aurrera egarri grebari ere ekin nion*].

## GOSE ETA EGARRI GREBAN



Laugarren eguna egarri greban eta oraindik badut malkorik hormako argazkiei begira jartzen naizenean.

* * *

Gorputzak edatera ematen dit, setatsu, maitekiro.

* * *

Nire gorputzarena al da medikamendu usaina?

* * *

Borrokan ari direnekin busti nahi ez duena, boterearen zipriztinekin zikintzen da.

* * *

Duintasuna, boterearen botatzarrak zanpatu nahi duenean, punta zorrotza gorantz duen iltzea da.

* * *

Ez naukate preso idazle izateagatik. Ez naiz idazle bihurtu kartzelan. Idazlea naiz eta preso naukate.

* * *

Mendi gorenetan eta infernu gordinenetan ni beti hirekin, maitea.

* * *

Gaztea naiz oraindik, baina hiltzekotan ez dut nire gorpuzkina erretzea nahi. Itsasoari begira, sartalderantz lurperatua izan nahi dut. Mendian. Igeldon.

# Lyon-go ospitalean

[*Abenduaren 12ko gauerdian etorri zitzaizkidan ziegara bila, grebaldiko ordura arteko sei egunetan azaldu ez zen Zuzendaria kartzelero andanaz lagunduta, erizainek gurpil-aulkia zekarten. Uko egin nion eta oinez atera nintzen Moulinseko isolamendutik, ahotsik gabe Zuzendariari koldar hutsa zela behin eta berriro esanez. Eskuburdinak eta hanka-trabak jarri eta ohatila batean etzanarazi ninduten eta medikalizatu gabeko anbulantzia batean sartu. Ez nekien nora ninderamaten. Bidean, leihoa irekitzeko eskatu nien, itotzen bainintzen. Ezin zela erantzun zidaten. Tabakoaren usaina sarkorra zen. Halako batean bide bazterrean gelditu zuten autoa eta motorra itzali. Goizaldea, abenduko gau hotz-hotza. Isiltasuna. Noizean behin auto bat igarotzen zen. Egarria. Neke izugarria. Zeren zain ote zeuden? Eskolta-lanak egin behar zituztenen zain uste dut. Halako batean berriro ere abiatu zen konboia. Lyonera iritsi ginen. Lyon erdiguneko kartzela bietariko batean sartu zen ibilgailua, ohatilatik altxatu gabe ere nire hatz-markak hartu zizkidaten eta kartzelako sarrera ofizialdu zuten. Segituan atera ginen, oraingoan bai, ospitalera. Iritsi ahala gatzura jartzeko agindu zieten. Erizainak ni ados ote nengoen galdetu beharko zidatela aipatu zuen. Militarren kamuflaje jantzia zeramaten zaindari nituen mozorrodunek. Orratza sartu eta nire gorputza elikatzen hasi ziren, ospitaleko segurtasunezko atal berezi batetara eraman ninduten bitartean*].

«Zelan dago? Laster osatuko al da?». Polizia-burua, mozorrodunak, ospitaleko zaintza-arduradun nagusia, zaindariak. Denak kezkaturik, nire hobe beharrez, azkar-azkar senda-kutxatik atera eta zigor kutxan sar nazaten eta beraiek arnasa har dezaten: Uf!

* * *

Laranja baten bi atal bost minutuz. 15:04/15:09. Mantso-mantso ddastta-ttuz. Hurrengoen iguriki. Munduko plazerik handiena! Orain ea noiz dakarkidaten URA!!

* * *

Kobazuloetako eskuen negatiboak egiteko zein alde jartzen zuten paretaren kontra, eta beraz, zein koloreztatzen zuten, gainaldea ala ahurra?

* * *

18:10 laranja ataltxo bat baino ez dut, uretan sartu asmo nuena; baina ez urik, ez sagarrik eta ez madaririk ez dut ordea. Pentsa, 11:00etan erabaki dut gose eta egarri grebarekin amaitzea eta harez gero laranja lehor gozo batekin nabil!

* * *



Dutxara: bi zaindari eta bi mozorrodun. Ene abizenez deitu naute. Dutxarako txanda. Nik, ez dudala eskatu. Zaindariak lehentasuna dudala eta beharra. Zalantzati, puskak biltzen ditut: xaboia, xanpua, zapiak… Oraino ez didate urik eman eta beraz, laranja ataltxoekin nago. On egingo ote dit dutxak? Bagoaz/naramate Kontxako pasealekua baino luzeago egin zaidan pasabidean barrena, dutxa azken muturrean baitago. Iritsi, begiratu dut barrura, erridaua ixteko keinua egin dut, mozorroduna begira baitaukat. Ez! Irekita!. Orduan, nik, «pas de douche»; «PAS DE DOUCHE», berak. Bagoaz «Kontxan» barrena, ni arnasestuka, oinak arrastaka. Ohean etzan naiz. Une batzuez arnasa bere onera ekartzen egon ondoren, erizainei deitzeko botoiari sakatu diot. Beiraren bestaldean agertu den buruari nire hatz-lodia ahora eramanez erakutsi diot ene beharra: URA!

* * *

Hamar minuturen buruan banatuko diete afaria eriei. Nirea lehen gela den arren ni izanen naiz azkena. Gurditxotik atera dituzte niretzako diren litro eta erdi ur garden, lau sagar eta bi madari. Hortxe utzi dituzte, ongi ikusten ditut. Niri eman ordez, badoaz. Laranja aletxoa baino ez dut. Hor daude

fruituak. Hor dago ura. Niretzat dira. Atearen bestaldean. Beiratik dakuskit. Mozorrodunak aurrean ez direla ezin diezadakete atera ireki… Ordu erdiz itxaron behar izan dut.

***

Zazpietan. URA. Udarea. Ura eta fruituak sartu dizkidate. Behar ditut. Joan diren arte aritu naiz txukunketa-lanean. Gero edalontzia bete dut. Ispilu deformatuan nire irudi penagarria ikusi dut. Ukabila altxatuz, ahotsik gabe kantatu dut *Eusko Gudariak* eta paradisua erori zait ahotik barrena, eztarrian barrena, sabeleraino, frexko, bizigarri. Berpizkundea.

***

PARADISUA LARANJA ATAL BATEN LEHEN ZUKUAN DAGO.

***

Nola hala kendu diot azala madariari (hatzekin, hortzekin). Bere mami zuria eskaini dit. Zuri-zuri. Ezpainak hurbildu eta musukatu dut behin eta berriz, zuku guztia irentsiz, sakonki begiak itxita. Munduko mamirik goxoena musukatu dut maitekiro, xeraz.

***

Montoiaren «Elektrika» irakurtzen. Frantsesek «Evian» markako ura ekarri didate egarri grebaren amaitzeko…

***

Denbora, poliki-poliki pasatzen da beste zereginik ez duenean.

***

Ispiluan: Il Greco, *Fideo de Mileto*.

***

Torturan torturatzailea eta torturatua daude. Umilazioan batzuetan umiliarazten duena baino ez dago.

* * *

Atzo arratseko zazpietan ekin nion edateari, zazpi egunen buruan, abenduaren 6an utzi bainion.

* * *

ASMAKIZUNA: Kalean noala ez nau nehork begiratzen. Lanean ez nau nehork ezagutzen/ikusten. NOR NAIZ?

* * *

Ispilu deformatua.



* * *

Beti dago «Atxik gogor!» dioen norbait.

* * *

Ez dut idazle-presoa izan nahi. Ezta preso-idazlea. Preso naukate. Idazlea naiz. Irtenbidea?

* * *

Zergatik daramazu mozorroa?, galdegin dio erizainak. Tamalez, ez dut erantzuna aditzerik izan.

## BI MILAGARREN URTEAK ZITUEN BESTE LAU URTE JADANIK

Bi milagarren urteak zitu(e)n beste lau urte jadanik
Urriko igande goiz goizean hirua zen hasi berri
Gure etxean sartu zitzaigun jende armatu ugari
Geroztik preso gauzkate eta semeagandik urruti.

Bata Bordelen bestea Yzeuren bi ziegatan bakarturik
Bi hilabetez ez dugu izan ia elkarren berririk
Semea aldiz ikusi dugu baina ordubetez soilik
Bizirik gaude, guk dakigula, baina lurpean sarturik

—Yzeuren nago ziega ilunean, sare estua leihoan
Egun osoa bertan naukate ordubetez kaiolan
Gauez orduro argia piztuz apurtzen didate loa
Ez dut norekin hitz egiterik, hitz egiten dut bertsotan

—Bordelen nago estu zainduta, mozorrodunak alboan
Biluzaraziz zanpatzen naute, ziegaz aldatuz askotan
Gauetan ere argia piztuz eragozten didaten loa
Lauren artean kolpeka naute zigor ziegara eroan

—Duintasuna defendatzeko egarri greba hasi dot
—Elkartasunez ta maitasunez berari jarraitu diot
Gorputza ihartuz indartu gara, elkarrekin gaude biok
Zorionean, sufrimenduan ezkondu gara berriro

# Naoned-eko kaiera

(2004ko abenduaren 17tik 2005eko otsailaren 1era)

[*Abenduaren 16an, hiru egun besterik ez neramatzanean indarberritzen, goizean goiz esnatu ninduten mozorrodunek. Hiruzpalau sartu zitzaizkidan gelan eta biluzteko agindu zidaten. Batek kamera txiki batekin gertatzen zena filmatzen zuen. Umilazioa. Eskuburdinak eta hanka-trabak jarri zizkidaten berriro eta ERIS izeneko kartzeletako segurtasun indar berezien auto batera sarrarazi. Atzeko eserlekuan haietako bi alde banatan nituela abiatu ginen. Hasieran Moulinsera ninderamatela uste izan nuen, baina segituan gelditu zen ordura arte ezagututako kartzelarako bidea alde batera. Zazpi orduko bidaia izan zen. Eskatu arren ez zidaten urik eman. Hitzik gabe, botila atzealdean zegoela erakusten zidan mozorrodunak. Hamabost egun neramatzan garbitu gabe, kiratsa haientzat jasangaitza izango zela pentsatzeak soilik kontsolatu ninduen. Frantziaren punta batetik Bretainiaraino. Naonedeko Maison d'Arrêt zaharreraino. Sarrera ere filmatu zuten: bizar eta ile luzeak, kateak eskumutur eta txorkatiletan. Kendu zizkidatenean* Eusko Gudariak *abestu nien. Eta segidan… isolamendura! Artatu ninduen medikuak esan zidanez Marixol eta biok kartzela berera eramatea onartu zuen epaileak, eskatu bezala semeak ez zezan gu biok ikusteko Frantzia punta batetik bestera ibili behar*].

Berriro ere zigor kutxan. Atzo bota ninduen hona munstroak, nire azken energiak ondo digeritu ondoan. Hemen uso tristeak eta kaio alaiak ikusten ditut. Eliza edo komentu zaharra izandakoa da leku hau. Orain bi abadesa ditu buru. Erregelak esplikatu zizkidaten. Zaindariekin otzanago nabil. Nekeagatik? Auskalo.

### KILO BATZUK GALDUTA

Kilo batzuk galduta
berriz nago hementxe
bizarra luzatuta
baina ez hainbeste
kartzelaz aldatuta
baldintzak ez batere
inkomunikatu eta
bakartu egin naute.

## LEHEN ESNATZEA

Bart, lo egiteko ere nekatuegi, telebista ikusten nengoela, begia. Hiruretan piztu zidaten argia. Ai ama! Telebista itzali eta lehen lo-arnasarekin etorri ziren berriz. Goizaldean, seiak bost gutxitan, interfonotik ahots bat? Seiak eta lau minututan argia piztu didate. Seiak eta hamarrean berriz interfonoa, oraingoan pixa-eginean nengoen. Oheratu eta, sei eta erdietan ate sarraila, argia, «bonjour» esan eta itxi egin du. Bart prest utzitako posta hartu/ikusi ere gabe! Ikusi ote nau ohean? Geroztik, dei-argia piztu dut, atea kolpatu… deus.



Esan zidan bai zaindari-buruak niri irekitzera etortzea luzea izango zela, beti graduak dituen norbait egon behar baita… Baina bederen nire deiaren arrazoiaz galdegin zezaketen behatxulotik begiratuta…

Zapata-kolpe on batzuk eman dizkiot aterari, ukabilarekin ere jo dut… Dena isilik dago. Usoen marrumak entzuten ditut ireki berri dudan leihotik. Haize freskoa ere sartzen da, eta han goian, New Yorkera edo Parisera, abioi bat doa.

## GELAREN TAMAINA

Gela txikiak itolarria eragiten du.

Gela handiak bakardade sentsazioa handitzen du.

## HURBIL

Zuzendari andereak: «Eta non bizi da zure semea?», «Saint-Sebastien», «Bai ondo! Hurbil-hurbil».

Nire harridura keinua ikusita, barkamenak eskatuz bezala, «hemendik hurbil St-Sebastien izeneko herria dago-eta...»

## KAKINARAZI

«Badakizu? Gu ez gaude zu kakinarazteko, e? Zure aurretik hemen egon zen S. eta ez zen inoiz arazorik izan berarekin».

## KASURIK EZ

«Garrantzitsuegia zarelako ez dizugu segituan kasurik egiten...».

## HIPERMEDIATIKOA

«Zure kasua hain izan da hipermediatikoa ezin dizudala irratirik eman».

## MIXERIA

Idazteko tresnak bukatuko zaizkidan beldur naiz.

## BAHITUTA

Ba al daki inork non nagoen?

Denbora aurrera doa. Segundoen gainera erori dira minutuak, haien gainera orduak, eta gero egunak. Astebetea joan da beste kartzelatik anbulantzian atera nindutenetik. Laugarren eguna hemen nagoela. Asteburu luzea joan da.

Ba al daki inork hemen nagoenik? Ez da irteteko ezintasuna soilik. Inorekin kontaktatzeko ezintasuna da okerrena. Eta berriro «bihar» pentsatzen hasteak ematen didan goragalea. Zer gertatu ote da munduan? Erori ote da atomikoa ezker abertzalearen gainera? Nire senideen gainera?

## ESKULARRUAK ETA TXANOAK

Beste kartzelan, Moulinsen, txanoa nuen. Hemen ez dut eskubiderik. Koloreagatik ote? Ez dakit. Aldiz eskularruak ditut. Han ez nituenak... Nork emanak ote? Noiz?

> Han debekua eta
> Hemen debekua,
> Eskularruak han ta
> Hemen da txanua

## SUA

7:30etan esnatu naute. «Ur beroa nahi?» «Ez» erantzun diot euskaraz. Ulertuko zuen. Atea itxi eta joan egin dira.

Bederatziak laurden gutxiagotan jaiki naiz, gau txarra izan baitut, argiarekin esnatu naute lauzpabost aldiz. Zaratak altxarazi ote nau? Edo jaiki ondoren izan da iskanbila? Nire eskuinean daukaten presoak su eman dio ziegari.

Atea ireki didatenean pasabidea keztatua ikusi dut, zaindariak kearen aurkako maskarekin. Batek zerbait esan dit. Kaleko jantziz jantzi naiz segituan, sagar bat eta laranja bat hartu ditut, ura botilan. Atea ireki didate eta promenadara eraman naute. Goiz hotz-hotza gaurkoa.

Isolamenduko besteak taldeka jarri dituzte beste bi txango-lekuetan. Ni bakarrik nago erdikoan.



*Eusko Gudariak* kantatu dut ukabila altxatuta, ohi bezala. «GORA!» batzuk bota ditut. Eta «GORA!» erantzun du norbaitek edo norbaitzuk.

## PASTILLAK

Pastilla bi biltzeko zorro hutsak zeuden lurrean.

## BEGI HIZTUNA

Oso lanpeturik dabiltza, horregatik ez dator ez zerbitzu-bururik, ez erizainik eta ez kristorik. Soilik «Begia» agertu da behatxuloan, graduazioko inor ez dagoenez ez baitu atea irekitzeko baimenik.

Galdegin dit: «Promenatzera aterako zara?». «Ez» erantzun diot. Baina aurrerantzean ez diet hitz egingo aterik irekitzen ez badidate.

## DUTXA

Dutxara joan nahi badut argitxoa piztu behar dut (argitxoa zernahitarako piztu behar dut, noski).

«Begia» agertzen da. Nik «begiekin» ez dut hitz egiten, baina nik nahi dudanez dutxa, esaten diot ea ezin duen atea ireki hitz egiteko. Ezin duenez, dutxa hartu nahi dudala esaten diot. «Oraintxe gradudunari deituko diot». «Oraintxe»ren itzulpena minututan 15 minutu dira.

Dutxarako bidean atzoko sutearen ondorio nabarmenak ikus ditzaket: atea belztua, ate aurreko zoruaren gainean tapaki bat jarri dute eta ate aurreko horma zatia ere belztua dago.

Dutxa beroa, bizigarria. Beroegia niretzat. Beranduegi ohartu naiz hemen termostatoa dagoela.

Dutxa amaitzean atea jotzea beste erremediorik ez dago. Jo dut. Zainetan. Lasaitu naiz. Itxaron dut. Berriro jo dut. Azkenean, ditudan oinetakoen punta oso sendoa denez kolpe erritmiko oso zaratatsuz eta etengabez jo dut atea: boun! boun! boun! boun! boun! boun! boun! boun! boun! boun! Hogeita hamar bat aldiz bai. Hantxe etorri dira lasterka. Garrasika. Aski dela. Nik ireki arte, segi.

Ateratzean, zer esango eta dutxatik irtetean kamiseta janzteko. Lehen dutxa hartu eta gero batek esan zidan emakumezkoak gurutzatu nitzakeela pasabidean eta kamiseta jantzi behar nuela. Oraingoan ere kasurik ez. Bera haserre «Gorra bihurtu al haiz orain?». Ni aurrera, gelaraino.

Nahi dutenean biluzarazi eta ukitzen gaituzte eta dutxatik kamisetarik gabe ateratzea debekatzen dute. Absurdoa!

Dutxa eskatu eta dutxa bukatuta itzuli bitarteko denbora: berrogei minutu!

> «Dutxatik irtetean
> Jantzi gainekoa!»
> Inork ez nau ikusten
> Arau absurdoa …

## *EUSKO GUDARIAK*

Atera naiz ziegatik txangorako bidean. Miatu naute. Kito. Ohi bezala *Eusko Gudariak* abesten hasi naiz. Lehen ahapaldia amaitzen ari nintzela, isiltzeko agindu dit zaindari batek. Errepikari ekin diot. Sorbaldan ukitu nau isiltzeko aginduz. Segitu dut. Bukaera arte.

## «EZ ZAUDE BAKARRIK»

Presoa eskean hasi da. Zaindaria gainezka, ezin denari erantzun. Bere ezina azaltzeko zer esango eta: «Ez zaude bakarrik!».

Ironia krudela bakartuta daukatenarentzat!

## ARBITRARIOTASUNAREN ERRESUMA

Arbitrariotasunaren erresuma da hau. Han posible zena, hemen ezin da. Han ezin zena, hemen posible da.

Helburua: preso daukatena zalantzan mantentzea.



## EURIPEAN

Txangora atera naute. Euria ari zuen. Ondoko patioak, hutsik. Denbora antolatu dut ordu eta erdiz egoteko.

Bi ordu eta erdiz utzi naute bertan. Mendeku txikia. Buruari ordutegiaz galdetu diodanean, han eduki nauen zaindariak «alarma» egon dela-eta hor eduki nautela aipatu du. Zigortxoa.

Afalorduan igo naute. Janariaren gurditxoa ziega aurrean zegoela.

## TXANTAIA

Zuzendariaren arabera Moulinsen nuen irratia ez omen zen nirea, utzi egin zidan presoak, horregatik ez zuten nire gainontzeko puskekin Naonedera ekarri.

Oparitu egin zidala berretsi dut.

Ziurtagiria eskatu dit orduan.

Ez dut noski. Non den irratia galdetu diot.

Jabeari itzuliko ziotela.

Nik ezetz. Ni bertan nengoela aldatu zutela kartzelaz.

Tira, saiatuko dela ea irratirik dagoen ikusten, nire jarrera aldatzen badut…

## NIRE JARRERA

Ez diet zaindariei begiratzen. Ez diet hitzik egiten.

## HAIEN JARRERA

Ziegatik ateratzen naizen bakoitzean arropa gainetik haztatuz miaketa xehe-xehea eta ondo ukituz egiten didate.

## ZIGOR ETA MENDEKU TXIKIAK

Irratia kendu didate. Gainera, nire kontuan ez dago dirurik, beste kartzelakoek transferentzia ez omen zuten zuzen egin… beraz, nahi banu ere ezingo nuke irrati berri bat erosi…

Zigor eta mendeku txikiak, inongo arautegitan ez daudenak. Preso nahi naute, esaneko, menpeko. Pertsona naiz ordea, nire arauen arabera nabil.

Preso hartu naute, ez naiz presoa.

## ZIGOR/SARI

Presoaren jarreraren arabera gertatzen dira gauzak. Zigor/Sari.

Ondo portatuz gero: sari. Gaizki portatuz gero: zigor.

Neutroa. Deus. Beraz saririk ez.

Haur bihurtzeko prozesua martxan!

## GUTXIEGITAN DUTXATZEN…

Ez omen naiz asko dutxatzen. Horrela esan dit zerbitzu buruak. Zerri deitu al nau? Auskalo. Edo agian dutxako irteerako ‘istilua’ kontrolatu nahiko dute.

Hurrengoan niki gabe ateratzen banaiz… Hurrengoan nikiarekin aterako naiz. Noski.

## IKURRINA EZ

Ikurrina debekatua dago.

## EUSKAL LIBURUAK

Ez dakite utziko ote dizkidaten… Nola jakin zer dagoen idatzita?

## DIRURIK EZ

Nire dirua bidean galdu da. Oso egoera 'desatsegina' da beraientzat.

## «EZ DUZU ZEREGINIK»

«McDo» afari-merienda bukatu berri nuela etorri zait Zuzendaria, oso nekatuta. Ezin izan diola deitu abokatuari. Aitzakiak jartzen hasi zait, lanpetuta dabilela.



Nire protesta aipamenei erantzuteko mahaia mespretxuz seinalatuz horrelaxe esan dit: «Noski, zuk egun osoan zereginik ez duzu …».

## IZEN BERTSUKORIK EZ

Emaztea kartzela berean egotekotan zigilurik gabe idatz diezaiokedan galdetu diot Zuzendariari. Baietz.

Ea nola jakingo dut emaztea kartzela berean ote dagoen.

Galdegiteko.

Galdegiten diodala.

Baietz.

Noiztik?

Antzerkia: «Ez dakit. Zer egun da gaur? Atzo edo herenegundik…».

Ea bere kartzela zenbakia nola lortuko dudan.

Idazteko, zenbakia ez dela garrantzitsua, ez duela uste izen bertsuko asko egongo denik.

## HARROKERIAREN MUGAN

Kexu da Zuzendari anderea: ez naiz atsegina beraiekin, harrokeriaren muga-mugan omen nabil…

Zer ez luketen emango hauek burua makurtu nezan lortzeagatik!

## BOLIGRAFOA

Boligrafoa amaitzear.

«Burua» ziegan sartu zait izapide batzuk egiteko. Nirea bezalako boligrafoa du… betea.

Inprimakiko datuak betetzeko hartu dut.

Ondoren, esku-joko baldarra egin dut trukatzeko. Konturatu da. Eman dit.

Hau bai mixeria nirea!

## KENDU ARGAZKIAK

«Kanpora» ematen duen horman itsatsi ditudan argazkiak kentzeko agindu didate. Bestela beraiek kenduko dituztela.

Kendu ditut. Eskuineko horman jarri ditut, eta mahaia ere argazkiei begira kokatu dut berriro.

## HIZKETAN

Txangora atera naute. Ondoko txango-lekuan beste preso bat. Ez dakit zer itxura duen.

Berak esan dit garaia dela, 1,87 m. Paristar-bretoia. Hizketan pasatu dugu ordu eta erdia, burdinsaredun atetik mugitu gabe.

## GAILETAK

Hizketaldian paristar-bretoiari aipatu diot gaileta batzuk banituela.

«Afalorduan» horman jo dit. Leihoa ireki dut.

Zer?

Gailetak? Eskatu dit.

Orain nahi al dituk?

Baai!

Sakatu dut argitxoa. Ordubetea joan da inor etorri aurretik. Zaindariari eman dizkiot eman diezaion. Jaso al ditu? Ez dit deitu eskertzeko. Ez diot deitu galdetzeko. Bihar jakingo dut.

Bai egoera tristea. Hau berritasun beharra. Hau gozotasun beharra. Hau goxotasun beharra!

## GABON GAUA



Txango bitartean kontrabandoz nirekin eraman dudan emaztearen gutuna irakurri dut. Zorionaren arintasunez dantzatu dut gero.

Izokina eta arroza eman digute afaltzeko. Senideek Gabonetan sartutako paketetik gorde ahal izan dudan turroitik zati bana igorri diet txango-kide ezezagunei. Ezkerreko auzoko dudanak horman jo eta leihotik eskertu dit, oso ona zegoela esanez.

Afalostean bertso batzuk idatzi ditut. Arrebari eta ezkonanaiari idatziko diet, (afaldu bitartean ezkonanaiak zaborrari buruz egunkarian idatzitako gutun bat irakurri dut). Emazteari idatzi diot. Telebistaren aurrean jarri naiz turroia, aranpasak eta gaileta batzuekin.

Zaindariak, behatxulotik begiratu eta argia piztu du, zortziak eta laurdenetan. Eta bederatziak bost gutxitan, eta hamarrak hogei gutxitan, eta hamaikak eta laurdenetan… Goizaldeko ordu batean piztu duenean esnatu egin nau; eta esnatu egin nau ere seiak hamar gutxitan, eta berriz etorri da seietan, argia piztuz.

Jaiki naiz, dei-argitxoa piztu dut. Ez da etorri.

Zazpietan atea irekitzera datorrenak tentuz ireki du behatxuloa, dei-argia piztua zegoen artean. Nire protestei erantzunez berak deus ez dakiela esan dit, iritsi berria dela, gaueko txandakoak izango zirela.

«Hau al da zuen Gabon gaueko oparia?» esan diot. «Nola du izena gauekoak?». «Ez dakit» esan dit gezurtiak. Zaindari-burua etortzean galdeginen diot…

Oheratu naiz. Lo pixka bat egin dut.

Jaikitzerakoan Eguzkiaren Diosalaren ariketa eginez semearen eta emaztearen alaitasuna eta indarra barneratu dut, egun ona izan dezatela opa diet.

Bart gaueko ekaitzak euria gela barruraino sartu zuen, gaur ortzia argi dago.

## MARRAZOA ETA XARDINAREN ARTEKO ELKARRIZKETA

Atea ireki eta bi zaindari agertu dira:

—Albisu, promenada?

—Ez… Baina gero dutxa hartuko dut.

—Nahi baduzu orain har dezakezu.

—Ez, gero.

Izan ere, ni dutxara ateratzeko zaindari gradudunak aurrean egon behar du. Plangintzan ni ziegatik ateratzea ez egotekotan gradudunak alde egin dezake… Dutxarako deitzerakoan auskalo zenbat denbora igaroko den etorri arte.

Horregatik, nire oharpena: promenadara ez noan arren kontuan har dezaten gero dutxarako atera beharko nautela.

Eta horregatik ere haien «eskaintza»: «Zoaz orain dutxara, graduduna hemen dagoen artean» esan nahi duena.

Eta nire erantzuna: «Ez, ni dutxara nahi dudanean joango naiz».

Eta segur aski beraien aldetik jasoko dudan bat-bateko erantzuna: «Ba dei ezak nahi duanean, gu ere nahi dugunean etorriko gara eta!».

## GABON EGUNA

Zaindariak lanpetuta dabiltza Gabon eguneko bazkari berezia banatzen.

Goizerdian bazkariaren lehen zatia ekarri digute: izokin kedartua eta «bûche de Noël» pastela.

## GUTUNAK ATE AZPITIK

Igortzeko gutunak gauez ate azpitik ateratzeko esan zidan zaindari batek lehen egunean. Horrelaxe egin dut hainbat egunez.

Zaindari-buruak lehengoan: «Gutunak ate azpitik ateratzea gutunak galtzeko modu egokiena da. Goizetan atea irekitzerakoan lo bazaude utzi itzazu begien bistan jaso ditzaten».

Nik: «Zuk zer uste duzu, niri bururatu zaidala gutunak ate azpitik ateratzearena? Zaindari batek esan zidan».

«Nork?» galdegin dit.

Nahita ere ezingo nioke esan, zaindarien izenik ez dugu inoiz jakiten.



## GOAZEN EROA IKUSTERA

Atea ireki didate erizaina ikusi nahi dudan galdetzeko. Galdetzeak harritu nau. Are gehiago orain arte ezagutu gabeko gelatxo bateraino lagundu nautenean.

Atea itxi eta zaindariak kanpoan. Gelatxoan bata zuririk gabeko andere bat… Nire izena du idatzita orri batean.

Jaiotze data galdegiten dit.

Begiratzeko nire dosierrean erantzuten diot jadanik zalantzaren bat badu!

Psikologoa dela.

A! Gauza berria da niretzat. Ez dudala deus nahi esan arren, hitzak nahigabe bezala ateratzen zaizkit, gose eta egarri grebarena, emaztea kartzela berean ote dagoen dakien, hala bada agurtu dezala, ez dudala inoren berririk, ez abokatu ez beste inorenik.

Idatzi ote diedan galdegiten dit.

Baietz erantzuten diot, baina auskalo…

Bere harridura aurpegiari erantzunez Frantzia ez dela herri demokratikoa gehitzen diot, abokatuen posta ere zelatatzen dutela.

Behean ikusi behar ninduela esan dit, baina ez diotela utzi: «Eta orduan esan dut, beno, ez bada jaisten, gu igoko gara eroa ikustera!».

## KONPARAKETAK

Kartzela bakarra ezagutzen duenak, sartu eta segituan konpara ezina konparatzen hasten da: ASKATASUNA/KARTZELA. Ez dauka beste erreferentziarik. Dena da ilun, min, gabezia, irentze, etendura, zauri, ezintasun, umilazio, zanpaketa, abailtzea, etsipena, miseria, degradazioa.

Eta basamortuan bezala, lore bat aurkituz gero, haren edertasuna deskriba ezina zaio: elkartasuna.

Bigarren kartzela ezagutzen duena sistemaren segadan erotzen hasten da. Ez baitago bi kartzela berdin. Ez soilik zaindari eta agintariak aldatzen direlako. Ez soilik kartzelaren arkitekturak, adinak, kokapenak barruko bizimodua baldintzatzen duelako… baizik eta barne araudia ere ez delako bera ere.

Hortik aurrera presoa hasten da, nahi gabe ere, rankinga osatzen: argitasuna, espazioa, ikusmira, ordutegia, txango-lekua, alderdi fisikoari dagokionez. Eta zaindariak, zuzendaria, auzokoak… giza alderdiari dagokionez.

Kartzela eta askatasunaren artean bezala bi kartzelen artekoa ere konpara ezina dela jabetu beharko genuke. Bi tortura tresnen artean konparatzea bezalakoa baita.

Lehen erreferentzia gorde behar dugu beti, alderatu ezina dena, kendu digutena, gurea dena: ASKATASUNA.

## UNERIK GOGORRENA

Arratsean, atea itxita dagoen arren munstroaren zerbitzariek beste bi sarraila ixten dituzte.

Zarata beldurgarria da: KRAN-KREIN-KRAN (E-TZA-RA IR-TEN-GO), KRAN-KREIN-KRAN (E-TZA-RA IR-TEN-GO).

Bukatu da eguna.

## ATEA NOIZ IREKITZEN DIDATEN

Goizean, zazpiak ingurutan. Jaiegunetan hori ere ez, ez baitute posta hartu beharrik. Eta ura norberak berotzen badu, gosaritarako ekartzen duten ur beroa zerbitzatu beharrik ez dute izaten.

Goizeko txangorako.

Arratsaldeko txangorako.

Zuzendaria, zerbitzu-burua edota medikua (astean bitan) etortzen denean.

Norberak dutxara joateko eskatzen duenean.

Bisitara joateko…

Hamaika eta erdietan bazkaria emateko.

Bost eta erdietan afaria emateko.

Batzuetan metalezko erretilua biltzeko…

Arratsaldeko bost eta erdietatik goizeko zazpiak arte ez da atea irekitzen. Hamahiru ordu eta erdiz.



## «BEGIA» HIZKETAN

Bazkalostea, Gabon eguneko betekada, xakean ari nintzela «begia» mintzatu zait:

«Aterako al zara txangora?»

«Ezin al duzu atea ireki hitz egiteko?»

«Orain ez».

Ez diot erantzun. Txangora atera gabe utziko nindutelakoan nengoen…, baina etorri dira txango orduan. Gabon giroagatik izango da…

## MENU BEREZIA

Izokina letxuga eta tomatearekin. Indioilar paparra gaztaina saltsarekin, patata biribiltxoak, letxuga. «Gabonetako enborra» (Bûche de Noël). Tripakada.

## LOAREN GUDA / ARGIAREN GUDA

Gertaerak ikusteko modua izan daiteke.

Nik egun osoa ematen dut nire burua gauez lo egiteko prestatzen. Ariketa fisiko askorik ez dut egiten, baina aske nintzenean egin ohi nuen lo-kuluxkarik ere ez.

Haiek, egun osoa dute nire gaueko loa nola galarazi prestatzeko. Ni bakarrik nago, haiek txandak dituzte.

Aurre-prestaketa: gaueko zortzietan hasten dira. Argia itzalita telebistaren aurrean banago, argia pizten dute. Mahaian lanean banago, eta ez banaute ikusten argia pizten dute, atea jotzen dute, deitzen naute…

Oheratzen naiz. Ez dut loak hartzeko arazorik izaten. Ziplo lokartzen naiz.

Gauerdi inguru, goizaldeko ordu batetan pizten dute argia lehen aldiz, loa galaraziz. Gero, segur aski, nire loak irabazten du eta ordu bietan, hiruretan, lauretan ez dute ni esnatzea lortzen. Goizaldean nagusitzen dira ordea, bost eta erdiak eta seiak artean. Horretarako oso epe laburrean argia bizpahirutan piztu behar izaten dute edota luzaroan piztuta utzi. Zazpietan, goizeko txandakoek atea ireki eta egunonak ematen dizkidate, gauean deus gertatu ez balitz bezala:

«Aterako al zara promenatzera?».

## DIMENTSIOA

Hurkoaren arabera doitzen da norberaren dimentsioa.

Bakartuta dagoenak bere dimentsioa handitzen ikusteko arriskua du. Ez baitu norekin egokitu, birdimentsionatu. «Ni» bakarra dago…

Gaur goizean, ohean nengoela nire gorputzaren tamaina bikoitza zela sentitu dut. Beso eta hanka lodi-lodiak nituen. Aho barrua ere puztua. Elefante baten tamainakoa nintzela sentitu dut.

## ZERGATIK TXANORIK EZ

Kartzela honetan ezin da txanoa eduki, ez txanodun txanbergorik. Ezin da burua babestu.

Zergatik? galdegin diot zaindari-buruari.

«Une oro presoa identifikagarri egon behar delako».

«Baina ni egon nintzen aurreko kartzelan ez zegoen arazorik».

«Bada hemen horrela da, ez da zurekiko neurri berezia…».

Ez, noski, nirekiko neurri berezia txanoa uztea litzateke, zeren, isolatua nago, dutxara ere bi edo hiru zaindarik laguntzen naute. Ziegatik txango-kaiolara berdin. Kaiolan bakarrik nago, talaiako zaindariaren begiradapean. Norekin nahas nazakete?

## IDATZI NAHI EZ NITUEN HITZAK

Hau izan liteke izenburu egoki bat kronika hauentzat.

## SUIZIDIOA, EROMENA, SENDAGILEAK

Sendagileak sendatzeko daude. Kartzelako sendagileen funtzioa ez da sendatzea ordea. Sendatzeko, pertsona kartzelatik ateratzea diagnostikatu beharko luke.



Beren begien aurrean dute pertsonaren endekatzea: eguzkiaren argirik gabe hogeita bi orduz ziegan; harremanik gabe; bakardadean edo promiskuitatean… Suizidioa, auto-zauritzea, gose greba, egarri greba, eromena.

Hitz horiek agertzen dira lehen pertsona osasuntsu eta orekatuak zirenen dossierretan.

Hitz horiek garraiatzen dute pertsona preso bilakatzeko prozesuan, lerratzean.

Eta sendagileak, arriskuan dagoen pertsonari laguntza ez emateagatik konplize bihurtzen dira. Badakitelako kartzela zigor psikologikoa eta fisikoa dela. Torturatzailearen ezinbesteko kolaboratzaile dira. Nahita ala nahigabe.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

GAZUR, SUERO, GERLI

## *EUSKO GUDARIAK* (bis)

Txangorako bidean egunero kantatzen dut *Eusko Gudariak*, beste kartzelan bezala.

Hemen ordea segizioa daramat atzetik eskaileretan behera goazela. Irudi bitxia, ni buru eta zaindariak lerroan nire atzetik…

Txangora iristean kaiolatzen naute, atea ixten dute, nik ukabila gora kantua amaitu eta *Gorak* eta irrintzia botatzen ditut.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*LE PUITS*: Isolamendu modulua

## PUTZUA

Beraz, putzuan nago.

## KARTZELAREN EGITURA

Kartzelaren arlo nagusietakoa da bere egitura.

Kartzelan sartzen dutena espazio ezezagun batean kokatzen dute. Gainera, espazio hori irudikatzeko baliabide mugatuak ditu ziegan daukaten artean. Ziegatik ateratzen dutenean ikusten ditu kartzela-infernuaren atal desberdinak, eraikin eta korridoreak, ateak zenbatu ditzake. Gutxika, bere buruan kartzelaren egitura bat osatzen du, zuzena ala okerra, baina non dagoen jakiteko ezinbesteko laguntza zaiona.

Zuzenean putzura eraman eta bakartuen erregimen estupean daukatenak askoz ere aukera murritzagoa du. Kartzelako sarreratik putzuraino egindako ibilbidearen oroitzapena besterik ez du bere espazioa eraikitzeko. Gainera, labirinto batean bezala, norabide bakarrean eta behin egindako hori, ikusten ez duten begi irekiekin egindako ibilbidetzat har genezake.

Hortik aurrera, ziegako leihotik ikusten duenak laguntzen dio espazioan kokatzen; gainekoen zaratak eta txangora joateko eskailerak jaitsi beharrak erdiko solairuan dagoela ziurtatuko diote. Dutxara joateko (beste irteera bakarrenetakoa) ezker, korridorea, ukondoa eta ezker bukaeraraino ia. Txangorako ordea, eskuin eta eskailerak jaitsi.

Kalea hortxe dago, txango-patioen bestaldean. Zaindariek talaiatik kalea eta patioak kontrola ditzakete.

Datu gutxi horiekin puzzlearen zatiak osatzen hasten da: korridoreak irudikatzen ditu, ikusten ez zuten begiek inkontzientean grabatutako irudi, ibilbide eta pasabideak erreskatatzen ditu, beste piezekin ahokatzeko.

Inon daukate presoa. Non dagoen irudikatzea ezinbestekoa du ezerezaren larridurari ihes egiteko. Kartzelari, izenaz gain egitura ematen dio, eta hor, putzuan, bere burua ikusten du, irudikatzen du.

Badakit non nagoen. Orain badakit nondik irten behar dudan.

**ELKARTASUNAREN IZEN PROPIOAK**

— 2004ko azaroaren 16an, Unai Dañobeitiarekin, senitartekoek jasandako istripuagatik.
— 2004ko azaroaren 19an, Juan Pablo Ussiarekin, senitartekoek jasandako istripuagatik
— 2004ko azaroaren 19an, isolamenduan dauden guztiekin, tortura egoera horretatik atera ditzaten.
— 2004ko azaroaren 20an, Jurdan Martitegirekin, senitartekoek jasandako istripuagatik.
— 2004ko azaroaren 20an, Asier Virunbralesekin, senitartekoek jasandako istripuagatik.
— 2004ko azaroaren 30an, Txomin Lesenderekin, senitartekoek jasandako istripuagatik.
— 2004ko abenduaren 3tik 13ra, Marisol Iparragirrerekin, jasanarazitako tratuagatik.
— 2004ko abenduaren 7tik 10era, Ekain Gerrarekin, bere amaren heriotzagatik
— 2004ko abenduaren28an, Gorka Perezekin, jasandako jipoiagatik
— 2004ko abenduaren 3an, Bautista Barandallarekin, eritasunagatik aska dezaten.
— 2004ko abenduren 3an, Juan Jose Regorekin, eritasunagatik aska dezaten.



## NIRE LANA DA

Kartzela honetan, bakartuta gaudenoi goiza lasaixeago uzten digute. Atea irekitzeko ordua zazpi eta erdiak arte luzatzen dute. Gauean, aldiz, maiz piz-

ten dute argia. Seietan edo aldatzen dute txanda. Eta iritsi berriek ere beren zeregin ankerra burutzen dute, argia piztuz.

Gau zaila izan dut bart. Goizean, zazpietan piztu didate argia goizeko txandakoek. Zazpiak eta hogeita bostean berriro etorri dira. Atea ireki eta posta hartuko zutela pentsatu dut. Ateko morroiloak ireki eta argia piztu didate… baina ez dute aterik ireki. Atea ireki gabe postarik ezin jaso! Jaiki naiz, argitxoari sakatu diot etor zitezen eta pixa egitera joan naiz.

Nahiko azkar etorri zait «begia» zer nahi dudan galdezka. Nire posta ez duela hartu oihu egin diot komunetik. Normala zela erantzun dit, oraindik ez baitit atea ireki.

Haserre galdegin diot ea orduan zergatik piztu didan argia, esnatzeko ote zen?

Nire presentzia ziurtatzeko egin duela erantzun dit, bere lana egin duela esan dit.

Ez ditu entzun bere lanari buruz pentsatu eta esan ditudanak…

## *ZAINDARITZA ZORROTZA*

Jean Geneten antzerki lan hori itzuli nuen aspaldi.

Ez dut inoiz kartzelari buruzko liburuak irakurtzea maite izan. Are, ihes egin diet gai hori duten liburuei, biziki aholkatu dizkidatenean ere.

Hemen naukate orain. Eta hemen nago idatzi nahi ez nituen hitzak idazten.

Moulinsen ez bezala, hemengo patiora ez naute bakarrik ateratzen. Batzuetan, bi auzoko eta hirurok egoten gara. Geneten antzerki lan horretan bezala, hiru. Begiberde, Lefranc eta...

Batek kondena laburra izango duela espero du eta irteera prestatzen ari da. Laster ikusten du bere burua kalean, birgizarteratuta, informatika ikasten dabil.

Besteak, bizitza osorako kartzela du, jendarme bat hiltzeagatik agian. Poloniarra da jatorriz. Bere burua kartzelan 22 urte pasatzeko prestatzen dihardu, yoga egiten du. Esperantza du.

Nik, kondena luze xamarra dudala esango luke edonork. Bata eta bestearen artekoa. Baina ez dut horrela bizi. Egun bakoitzak askatasunera na-

rama. Laster gara denok kalean. Laster hori nola neurtzen den ez dakit. Esperantza, indarra, ziurtasuna. Antzerki lan bat egiteko gaia ematen du.

Baten proiektua, bestearen kondena luzea, azkenaren ametsak.

Lapurra, polizia hil duen lapurra, eta politikoa.

Hau ordea ez da fikzioa, errealitate gordina baizik.

## BARAUA

Gaur barau egin dut Gorka Pereak jasandako jipoiagatik protestan. Atean jarri dudan kartela goizean kendu didate. Ondoko horman handiago bat jarri dut.

Bazkalorduan, «Repas?». Ezetz. Afalorduan, «Repas?». Idazkia seinalatzen diet.

Zuzendaritzari idatzi beharko diodala esaten dit zaindariak. Idatzi diodala. Gaur, bi morroiloez itxi baino lehen ireki du atea zaindariak, «Gabon» esan dit. Itxi du. Kendu dut idazkia.

Bihar gosalduko dut.



**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

ELKARTASUNA

URA

## BARAUA (bis)

Txangoan zegoen presoari esan diot barau egiten nagoela.

Horrelako ekimenek deusetarako balio ez dutela pentsatzen dutenetarikoa da. «Zuek, euskaldunak…» edo antzeko zerbait esan dit.

Esan diot preso bat jipoitu dutelako protesta egiten ari naizela.

Elkartasunaren zentzua ulertzen dute. Oso garrantzitsua dela esan dit. Hemen ez dagoela.

### KARTZELAKO HIZTEGIRAKO

*POINTEUR*: bortxatzailea

*CONDÉ*: polizia

*BALANCE*: salataria

## ABEREAK BAIKINEN MARKATUAK

Ikustaldira. «Luzatu eskuineko eskua». Ikusten ez den tintarekin markatu naute. Duela 60 urte judutarrak bezala markatuko gintuzkete norberaren kartzela-zenbakiarekin. Zientziaren aurrerapenak ere horretarako balio du.

Ikustalditik itzuleran argi ultramoredun lanparatxoarekin baiesten dute eskuko markaren arabera...

## ARGAZKIA

«Sartu hor». Gela bat.

«Eutsi hori, horrela». Nire izena eta zenbaki batzuk idatzita dituen karteltxo bat da.

«Ez».

«Argazkia atera behar dizut».

«Moldatu zaitez».

«Ez du nahi», batak besteari.

«Zergatik?» galdetzen dit batek bitan.

Ni mutu.

«Goazen». Haien artean «Intzidentea».

### ELKARTASUNAREN IZEN PROPIOAK

Andoni Beroiz, Mario Ronco, Fernando Elejalde, Unai Dañobeitia eta Urko Labeaga, beren senitarteko eta lagunek izandako istripuengatik.

## ESPAZIOA NIREGANATUZ

Bederatzi eta erdiak aldera aski argi dago ziegan. Ditudan bi mahaietako bat leihotik urrundu eta gelaren erdian kokatzen dut. Argi artifizialik gabe irakur dezaket horrela. Arratsaldeko lau eta erdiak, bostak inguru arte. Bertan bazkaltzen dut.

Bostak eta laurdenetan, afaltzeko orduarekin, berriro ere leiho ondora nator, argitxoa pizten dut. Iluntzean, telebista ikusi nahi badut, mahaia ohe ondora hurbildu eta telebista jartzen dut gainean. Ez dut tele-aldagailurik, ez dago tele-aldagailurik.

Ohe gainean etzanda edota ohe barruan sartuta, besoa luzatuz aldatzen ditut kateak, deus interesgarri ez dagoen gauetan.

Goizean, jaiki eta telebista lurrean jartzen dut, armairu ondoan. Mahaia hormara hurbiltzen dut, eta kirola egin eta gero argia piztuta gosaltzen dut, bederatzi eta erdiak noiz iritsiko zain, berriro ere goian dagoen leihotik sartzen den argiaren argitasunean irakurtzearen plazera sentitzeko.

## «IREK AHOA!»



Bisitatik bueltan. 35 minutu soilik. Bihotza apurtuta, malkoak begi ertzean.

«Erakutsi eskua». Segi, korridorean gora.

«Biluztu».

«Guztiz biluztu aurretik janzten hasi nahi dut».

«Biluztu». «Altxa besoak». «Egin itzulia». «Ireki ahoa».

«Ez».

«Irek ahoa!».

«Ikusten duzu ez dudala ezer ahoan! Hizketan ari naiz».

Presatuak dira. Janzten naiz.

### BISITA LAPURTU

Gela txikian sartu
Besarkadan urtu
Guraso, anai, arreba
Semea agurtu,

Hasi baino lehenago
Behar da bukatu
«Bizitzaren Lapurrek»
Bisita laburtu
«Bizitzaren Lapurrek»
Bisita laburtu

## SUGEAK BELARRIRA

Ziegarako bidean, senideek ekarritako Gabonetako jakiekin. Euskarazko liburuak ez dituzte onartu. Ikurrina ere ez. Euskal Herriko eta Donostiako mapak ere ez.

Zaindaria hurbiltzen zait goxo: «Badakizu, gorputz-miaketarena ez da inoren gustuko lana. Horrela da mundu guztiarentzat. Ez baduzu onartzen, intzidentea probokatuko duzu. Txostena egongo da. Txostenarekin epaituko zaituzte eta kristalaren atzeko bisitarako eskubidea baino ez duzu izango!».

## «EZ ZARA TXINTXOA IZAN»

Bilera egiteko ziega ez den beste leku bat eskatu dudan arren Zerbitzu-burua ziega barrura datorkit ikustaldiaren ondoren. Ez dela luzatuko adierazten dit. Maite du hitz egitea ordea. Eta badaki hori dela isolamendukoon alde ahula.

Berri ona ematen dit hasteko: jujeari deitu diotela eta onartu duela hemen debekatuak diren puskak kanpora ateratzea: bizarra egiteko bitsa, txanoa, txanodun txanbergoa, luzagailuak eta mahai-argiak.

Primeran! Semeari esan berri diot Olentzerok aitatxo eta amatxori benetako mahai-argi bat utzia ziela berarentzat. «Noiz jasoko dut?» galdegin dit. Gaurko ikustaldian edo hurrengoan izango dela esan diot, ziur jakin gabe.

Beraz, Zerbitzu-buruari galdegin diot ea gaur eman dizkieten gauzak senideei.

«Ez, zeren atzo argazkia egitea errefusatu zenuen, eta zuzendariak erabaki zuen gauzak horrela, puskak ez ematea».

«Zigorra, beraz. Baina zigorra semearentzat izan da». Esan diot.

## ARGAZKI GABE EZ DAGO IKUSTALDIRIK

Gabon Zahar eguneko oparia: «Argazkirik ez baduzu onartzen, ez duzu kartzela barneko nortasun agiririk izango eta nortasun agiririk gabe ez duzu ikustaldirik izango».

## GABON ZAHAR

Musika egon da ipinita ziega batzuetan.

Gauerdian oihuak, suziriak, urteberriona opatuz.

Nik emaztearekin elkarrizketan eman dut gaua, bere abenduaren 20 eta 21eko gutunekin hizketan, gustura.

Semea goizean ikusi dut Aita eta arrebarekin. 35 minutuz. Honaino etorrita, ama-semeek ez dute elkar ikusterik izan.

Gauerdian, leihora atera naiz eta norabide egokian ez bada ere «Urteberri on!» oihukatu diot.

Kilometro gutxi batzuetara gaude bata bestearengandik. Zortzi egunez egin du gose eta egarri greba. Nik hamar egunez gose greba eta horietatik azken zazpiak egarri greban. Ospitalean eduki gaituzte biok (bera Fresnesen eta ni Lyonen), eta hona ekarri gaituzte, kartzela berera, baina kilometro batzuez bananduta dauden eraikin banara bakoitza. Gure semea Euskal Herrian dago. Hiru hilabeteotan ama ordubetez soilik ikusi du; aita bi ordu eta hamar minutuz. Urteberri on? Bai, URTEBERRI ON! Hala bedi. Bananduta, sakabanatuta, inkomunikatuta, zazpiehun gudari kartzelan zigortuta, eta haiekin beren senitarteko eta lagunak, Herria, eta hainbat gudari sasian; askatasunean, eguneroko bizitzan murgilduta, Euskal Herria askatzeko borrokan. URTE BERRI ON! Eutsi goiari gudariok! Irabaziko dugu!



## BURUAN ZAURIA

Ohean eserita irakurtzen egon naiz goizaldera arte. Gustura. Pablo Sastreren «Elurretako hotsek» bete dute urtats. Leihoa zabalik nuen. Inoiz egoten ez naizen moduan nengoen ohean jarrita. Azken orrialdeak ohe barruko epelean irakurtzeko asmoz jaiki naizenean leihoaren ertza indarrez jo dut buruarekin.

Segituan eseri naiz, bi eskuez heldu dut burua, mina baretu artean. Eskuei begiratu diet gero. Batean odola arrastoa. Harraskara iristerako tanta bat kopetan behera… toallarekin estutu dut zauria. Gero urez garbitu. Moulinsen emandako gasa, merkurokromoa eta desinfektagarriarekin nolabait moldatu naiz, ahal bezala, ispiluarekin ere ez baitut zauria ikusten.

Erizaindegira idatzi dut, bihar goizean ohartxoa har dezaten. Eta ohera liburua amaitzera.

Goizean burukoan odol pixka bat zegoen. Zazpi eta erdietan hartu dute oharra. Arratsaldeko hiru eta erdiak dira eta ez da inor ageri. Eskerrak ez den larriagoa izan!

## URTATSEKO BAINU HOTZA

Bederatzi eta erdietan joan naiz dutxara. Termostatoarekin hoztu dut ura, pixkanaka. Azkenerako hotz-hotza atera da. Bizigarria. Gorputza igurtzi dut. Buruarekin kontu gehiago egin dut.

Ez du itsaso edo errekako bainua balio, noski. Baina gorputza arindu dit!, dutxara ateratzerakoan miatu nauenaren olagarro-eskuak ahanzteraino!.

## URTATS BAZKARIA

*Coquille St Jacques* zegoen berezi, eta *bûche de Noël*. Letxuga leihoan, despentsan, jarri dut.

## URTATS IBILALDIA

Ordu bat eta erdietan etorri dira irten nahi ote dudan galdezka.

Bai, noski.

Lehen egunean ni «kakinarazteko» ez zeudela esan zidana da gaurko zaindaria. Ondo haztatu nau: sorbaldak, gorputza, poltsikoak, hankak.

Promenadatik itzultzerakoan, berriz. Oraingoan, izter paretik pasatzean ia barrabilak ukitu dizkit. Literalki.

## «BURUA IKUSI NAHI DIZUT»

Arratsaldea da. Emaztearekin hizketan ari naiz, duela bi hilabeteko gutunekin hizketan. Zaindariak behatxuloa ireki du. Ez nau ikusten. Armairuko atea zabalik dagoelako. Oihuka hasi da. Ateari kolpeka. Beste ziegatik erantzun diote. Ez, ez dira haiek. Nirekin ari da.

Oihu egiten dut, nire presentziaren berri badu.

Ez zaio aski. Ateari kolpeka hasten da. Seietatik itxi dizkidate gaueko bi morroiloak.

Eskuarekin keinua egiten dut, besoa ateratzen dut, gazteleraz zerbait esan dut, «¿Qué pasa?»-edo.

Ikusi du nire besoa. Ez zaio aski. «Zure burua ikusi nahi dut!» oihuka. Kolpeak atean. «Horrela bada…» hasten da, mehatxua airean. «Zure burua ikusi nahi dut».

Haserre mugimenduarekin burua mugitu dudanean bere ikusmiran jarri da.

«Hori da!» esan du.

Piztiak gara. Zanpatu beharrekoak. Badaki hemen nagoela. Besoa ikusi dit. Baina ez zaio aski. Bere agindua bete behar dut, absurdoa bada ere. Ni ez naizen beste inor ezin da hemen egon. Etengabe zaindua naiz! Helburua pertsona umiliatzea da, beraz. Nork agintzen duen erakustea. Edozein agindu eztabaidatik at dagoela ulertaraztea. Pertsona, menpeko bihurtuz, preso bilakaraztea.



Amorrazioz oihuka hasi naiz. Tristura, mina, ezintasuna, bakardadea, beldurra. Dena batera.

Altxa naiz eta atea kolpatu dut. Oihuka. Amorrazioaren amorrazioz.

Egun zaila gaurkoa, idazketan, emaztearekiko elkarrizketan, babestu banaiz ere.

## «JENDEA LO DAGO»

Igande goiza.

Kartzela honetan goizez eta arratsaldez atera naiteke. Nik bietako bat hautatzen dut. Aste barruan arratsaldez ateratzen naiz. Igandetan goizez, «mendi ibilaldi goiztiarra» bailitzan.

Ohi bezala, ziegatik irtetean miatu naute eta *Eusko Gudariak* kantatzeari ekin diot. Lehen egunean isiltzeko esan zidatenetik ez didate inoiz deus esan. Gaur zaindarietako batek «badago oraindik lo dagoenik» esan dit.

Hara, lo apurtzaile profesionalak presoen loa zaintzen!

## «MEZA BUKATU DA»

Bakarrik egon naiz patioan. Hau da, alboetako kaiolak hutsik zeuden. Dantzan, kantuan, bertsotan.

*Txori erresiñula* ikasten ari naiz. Gaur zazpigarren ahapaldiraino iritsi naiz. Gustura kantatzen dut. Ahotsari doinu berezia emanarazten dion kantua da. Gainera, patioko hormetan oihartzun garden berezia egiten du.

Kartzelazainen talaiari bizkar emanez, aurrean eraikina dut. Lehen estaian erizaindegia. Bigarrenean zigor ziegak, *mitard*-ak. Hirugarrenean, bortxatzaileak, *pointeur*-ak. Estai bakoitzean zaindarientzako gela bana.

Bat-batean, hirugarren ahapaldian nintzela, norbaitek, zigortu, bortxatzaile edo zaindari batek, «c'est fini la messe!» (meza bukatu da!) oihu egin dit.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

ISILAMENDUA

## DENBORA LIBREA

Emazteak gutun batean zenbat denbora libre dugun aipatzen dit.

Nik ez dut ordea. Denbora betea dut. Etengabeko ariketan nabil.

Hilabete beranduagoko gutun batetan, estresatuta nagoenaren itxura hartzen didala esaten dit.

Presaka nabil, bai, lasterka, bakardadeari ihesi.

## DUTXA (bis)

Kirol bizikleta ziegara ekarri didatenean esan diet ondoren dutxatuko naizela.

Amaitu dut kirol saioa. Argitxoa piztu diet (gorria da kanpoan). Galtza motxak eta nikia soilik badaramatzat ere arropen gainetik ukituz miatu nau. Nire nazka aurpegia nabarmena delakoan nago. Dutxara sartu aurretik, nire abizenez deituz galdegin dit ea zenbat denbora egongo naizen. Aurrerapena! Orain artean atea jo behar izaten nuen, eta hortxe egoten nintzen danbadaka, etorri arte. «Ordu laurden gehienez» esan diot.

Joan direnean, kezka: aski izango ote dut ordu laurdenarekin?

Bai, aski izan da. Hamabi-hamahiru minuturen buruan prest nengoen irteteko. Jo dut atea behin. Minutu pare batera berriz. Beste hiru minutu pasatu dira berriro jo dudanerako (ez ohi bezala, etengabe, goxoan baizik), eta orduantxe agertu dira.

«Aspaldi bukatu al duzu?».

«Duela bost minutu».

«Ez da ona leku heze horretan luzaroan egotea» esan dit.

«Deitu dut, baina inork entzun ote nauen ez nekienez berriro deitu dut». Esaldi luzea! Gero, «on egin!» eta «arratsalde ona pasa», erantzun gabe utzi dizkiot.



Betiko zalantza: «onak» dira edo preso gaixoaz trufatzen dira.

Azken honek bizikleta ziegan sartu dit. Aurreko aldian nik sartu behar izan nuen. Agian, ikuskatze aldia bukatu da eta orain pixka bat lasaiago utziko naute.

Lehengoan txangotik bueltan, *mitard*-eko aldean egon ohi den zaindariak euskal aire bat zerabilen ahoan. Oso ezaguna bada ere hemen entzutea harrigarria da...

## «BUKATU DA PROMENADA!»

Borrokaldia abiatzeko unea. Patioaren atea zabaldu didate. Zuzendariarentzat prest nuen idazkia eman diot zaindariari eta hondora joan naiz aldarrikapenak oihukatuz: «Isolamendu politikorik ez!», «Preso politikoen estatutua orain!», «Euskal presoak Euskal Herrira!».

Laguntza eskatu dute. Patioan sartu dira. Nire joan etorriak eragotziz inguratu naute eta bultzaka aterantz eraman naute, berdin jarraitu dute ziega bidean, eskaileretan gora. Oihuka jarraitu dut. Haietako bat edo

beste trufaz aritu da. Bultza egiteari uzten ziotenean, bertan geratzen nintzen.

Ziegara iritsi gara. Sartzeko unean ohartu dira ez nautela miatu patio irteeran! Arropen gainetik haztatuz miatzen naute beti, batzuk grinatsuago, bestetzuk lasaiago… Akatsa zuzentzeko-edo, ziega aurrean kendu arazi didate txanbergoa, eta xehe-xehe miatu dute, eskularruak atera, kleenex paketea ere… Nork agintzen duen erakusteko modu bat.

Bihar jarraipena. Arratsaldez hiruzpalau aldiz behatu naute behatxulotik. Ohikoa ez dena.

## BURUAN ZAURIA (bis)

Patioan nengoela etorri dira nire bila. Goizean sendagilea pasatu denean esan diot bi egun zirela ohartxo bat igorri nuela Erizaindegira. Berak, ez zekiela deus. Nik ere ez diot deus esan zaindariaren aurrean. Beraz, arratsaldean patiotik eraman naute sendagilearengana.

Lehen aldiz egon naiz erizaindegian.

Emaztea ikusi zuen sendagile bera berriro. Burua begiratu dit. Ez dudala ezer. Oharra noiz idatzi nuen ere ez zekien. Dossierrean grapatua zuen. Dispertsioaren aurka Erizaindegira igorri nuena zakarrontzira botako zuten…

Erizainarenagana igorriko nauela esan du, merkromina pixka bat jartzeko buruan. Tetanosa eginda ote dudan. Dossierrean baietz jartzen du. Moulinsen ere esan nien emazteak jakingo zuela txertoaren data, berak jarri baitzidan. Bide batez galdetu diot sendagileari ea emaztea ikusi duen…

Zalantza egin du, «aurten ez behintzat». Irrigarria zinez gizona. Ez, ez duela ikusi ni ikusiz geroztik.

Agurtzeko nire partez.

«Hori besterik ez bada!».

Lagundu nau erizaindegira. Korridorean pisatzekoa zegoen. 78 kg.! Jantzita. Aurrekoan hor berean 80 kg. nituen. Harrigarria hiru egunen buruan mehetu dudana. Erizaindegian beste pisu bat dago. Erizainak irriz esan du bien artean desberdintasuna dagoela. Igo naiz 76 kg.! Bost axola zaie.

Galdetu diot ea zaindariak gelatik irten zitezkeen. Ez. Jarri dit merkurokromoa. Atera dit odol tanta bat tetanoaren txertoa hartua ote dudan

ikusteko eta esan dit: «hogei minutu behar dira emaitza jakiteko… hogei minuturen buruan nire berri ez baduzu, arazorik ez dagoela esan nahi du». (!?)

Zaindariak lagunduta berriro patiora.

## NOIZ KAKA EGIN

Kaka lasai egitearena ez da gauerdiko ahuntzaren eztula kartzela barnean.

Intimitatearena da bahitzen duten pertsonari ebasten dioten lehenetariko eskubidea. Biluzik bahitzen dute; galtzontzilotan darabilte; biluzarazten noiznahi, gehienetan segurtasun-arrazoirik aitzakia gisa jarri gabe ere; arropen gainetik gorputz osoa alferrik haztatuz... boterea nork duen erakusteko, umiliatzeko.

Kakari buruz ari nintzen. Noiz egin kaka lasai. Zeregin intimoenetakoa. Ziega gainpopulatuetan zer ote den pentsatu ere ez dut egin nahi. Kontsolamendu bakarra ziega-kide guztiek egoera bera bizi izana izan daiteke.



Isolamenduan, ziega barnean ustezko intimitatea dago. Ustezkoa, zeren noiznahi ireki dezakete eta irekitzen dute atea. Noiznahi, behatxulotik begiratu eta ikusten ez banaute, oihuka, kolpeka, argia piztu eta itzaliz eskatzen dute nire presentzia. Ikusi egin behar naute. Beraz, noiz sartu komunean ongi kalkulatu beharreko zeregina da. Ez dute hesteek agintzen, zaindarien errutinarik gabeko joan etorrien kalkulu ez ziurrak baino.

Gaur atea ireki dutenean harrapatu naute lehen aldiz komunean. Beste noizbait behatxulotik begiratzerakoan harrapatu izan naute. Gaur ez, gaur atea zabaldu dute. Komunean nengoela esan diet, segituan aterako nintzela.

Berdin izan zaie. Barrura sartu dira, zapi eta toalla zikinak hartu dituzte eta kirol bizikleta utzi didate, ipurdia garbitzen ari nintzen bitartean.

## NIRE IZENEZ

Fase berrian gaude. Jadanik nire abizenez deitzen naute. Ikastea kosta egiten zaie edo ongi neurtutako egokitze prozesua da; bestean berdin egin baitzidaten.

## BOST NIRE BILA!

Promenada luze joan da gaur.

Bi geunden, norbera bere kaiolan. Nire bila etorri dira aurrena.

Azkenaldian, bina etorri izan dira. Gaur bost ziren!

Miaketa arduraduna grinatsu aritu da. Alferrik etorri direnez, desplazamenduaren gastua ordainarazi beharko zidaten...

## «INCIDENT!», «SILENCE!»

Azken bi egunotan, *Eusko Gudariak* abestuz noala, kartzelazaina «incident!» edo «silence!» esanez datorkit.

## «BEGIARI» HITZ EGIN DIOT

Mahaia gelaren erdian, ateari bizkar emanda nago.

Kartzelazainak ziegaz ziega dabiltza. Ireki eta promenadarako galdezka. Nirera iritsi denean ez du atea ireki.

Behatxulotik mintzo da «Begibakar»: «Aterako al zara promenadara?».

«Ezin al duzu atea ireki hitz egiteko?».

«Ez dut eskubiderik».

«...».

«Aterako al zara?».

«Bai».

«Zer? Aterako al zara ala ez?».

«BAAI!».

## «BEGIAREKIN» EZTABAIDAN

Dei-argitxoa piztu dut. Denbora gutxira, ez asko, «Begia» dator. Ni harraskan. Kasurik ez.

Barruko argia pizten du. «Zer nahi duzu?».

«Ezin al duzu atea ireki hitz egiteko?», haserre.

«Ez».

«Dutxa».

Denbora. Badatoz. Galtza motxak eta mahuka gabeko nikia dut. Lehengo eguneko «gisakoa» da; dutxan zenbat denboraz egon nahi nuen galdegin zidana. Nire abizenez deitzen nauena. Eskuak nire soinean jartzen ditu. Formalismoz. Nazka niri haien formalismoak!

Dutxarako bidean nire abizenez deitzen nau eta esaten dit: «Ez badut irekitzen ezin dudalako da, ez pentsa, nik ere ez dut maite atea ireki gabe mintzatzea».

Isilik ni. Dutxan sartu naiz. Ez dit galdetu zenbat denboraz egongo naizen.

Irteeran ez nau arakatu. Ziegako atea itxi gabe, erdi irekia dago. Bazterrera egin dut berak ireki dezan. Barrura. Krisk-krask!

## DUTXA (tris)

Emazteak dutxa une goxoa dela esaten dit gutunetan. Disfrutatzen du, erlaxatzen da, ihes egiten du. Egunero doa.



Niretzat dutxara joatea umilazioa da. Dutxa bidean ukitzen naute, ia biluzik banoa ere. Dutxatik bueltan, bi zaindariak atzean ditudala, gainekoa jantzita egin behar ditut ziegarainoko 20 metroak (ikustalditik ostean eta edozein unetan, biluzaraziko nauten kartzelazain voyeurrek ez dute jasaten norberaren erabakiz gorputzaren atal bat biluztea! Ziniko hipokritak!). Klaustrofobia sentitzen dut. Ez baitago leihorik. Atea, ziegakoa bezalakoa da (beste kartzelakoak goian irekidura zuen). Arropak uzteko berogailu txiki bat baino ez dago eta denok utziko ditugu hor gure arropak. Ilun dagoenez dutxa barruko zorua lurra nolakoa den ez dut ikusten eta oraindik ez dut txankletarik lortu (jadanik oinazpitan onddoak ditudala uste dut eta martxa honetan udaberriko zizak bilduko ditut).

Ateratzeko atea jo behar dut. Segundoak minutu egiten zaizkit. Kolpatzen dut. Ez datoz. (Moulinsen toalla ate gainean kanporantz zintzilikatu eta segituan etorri ohi ziren). Iruditzen zait atean jotako kolpeekin, animalien pare, piztia bainintzen, «dutxa bukatu dut, kaiolara itzuli nahi dut» adierazten dudala. Giltza zarata. Kanpoan dabiltza. Badatoz. Ez. Badute zeregin garrantzitsuagorik zimino gaiztoa dutxatik ateraraztea baino. Gurditxo bat

gora eta behera dabil. Zer ote? Beste zimino batek atea jotzen du. Nik ere. A! «Begia»! Parez pare du nire aurpegia. «Oraintxe!» esan eta badoa! Etorri dira azkenean. Zabaldu dute. Saria dut: ez naute ukitu.

> **KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**
>
> ZAINDARIA: kartzelazaina, matoia, alper jendea, voyeurrak…

## ISOLAMENDUKO KARKAILAK

Moulinseko isolamenduko pasabidea isila zen. Kartzelazainak beren estaiko zentroan egon ohi ziren. Guk ez genituen entzuten. Hemen maiz ibiltzen dira pasabidean gora eta behera, igogailu bidean, hizketan, barrezka. Ziega barrutik ez da ulertzen zer dioten. Soilik, giroa jasotzen dugu, kaiola handiagora naramatenetan ere beren artean hizketan aritzen dira. Edo bila datozenetan. Isolatuaren bakardade bortxatuz, ez dute errespetatzen lapiko batean bezala burua betetzen dioten ahoskatu gabeko esaldi irenduen dolua. Pertsonak baino gutxiago gara. Erakutsi ere egin ezin diren zoologikoko piztia ezdeusak.



## BESTE ZIEGA BAT ERRE

Atzo arratsaldez, pertsona batek itxita zeukaten ziegari eman zion su.

Ni kaiola handiagoan ninduten, haizea hartzen. Auzokoak hutsik. Kantuan. Zigortu batek edo bortxatzaile batek isiltzeko edo bukatzeko esan zidan arren berdin segitu nuen.

Beranduago, hausnarketan ari nintzela, erre usaina. «Ari da norbait sukaldean» pentsatu nuen aurrena. Ez baina, ez zen txuleta erretzen ari.

«Surveillant!» garrasiak. Erre usain kimikoa. Ni *mitard*-eko, zigor ziegetako leiho gupidagabeei begira (burdina-barra, sarea eta kanpoko txapa noizbait gardena izandakoa dute).

«Surveillant!» laguntza-eske larrituak. Goiko talaiako kartzelazainari keinuka hasi nintzaien, aurrean nituen ziegak seinalatuz.

Zenbat denbora pasatu ote zen? Lehen aldiz nengoen ordulari gabe!

Garrasiak, ezintasuna, amorrua.

Talaiatik begira izango nituen: ziminoa keinuka. Dibertimendu ederra. Beste ziminoa lagundu zezaten, larri!

Ikusi dut kea halako batean. Albo bateko *mitard*-eko leihotik atera da, gris, hori, lodi. Ziegako atea irekitzerakoan sortutako korrontearekin irtengo zen. Kea eta ke gehiago, hiriaren zeru grisean.

Euria ari du. Kaioak ere babestu dira.

Grisa eta horiaren nahasketa, etsipenaren kolorekoa.

Bigarren ziega, hamabost egunen buruan. Orain isolamenduan sei ziega baino ez daude. *Mitard*-ean bost.

## «ESAIOK HIRE LAGUNARI!»

Badakartzate *mitard*-ekoak kanpora. Binaka sartu dituzte ni nagoenaren alboetan dauden kaioletan. Badakite «Le Basque» naizela. Entzungo ninduten kantuan. Segur aski, lehentxeago kantari ari nintzela, haietako batek edo su eman dionak esango zidan isiltzeko.

Txanbergorik gabe datoz. Ez diete denbora eman txukun janzteko. Kaiola bidean, «Hotzak nago» kexatu zaio bat zaindariari, «zerbait jantzi nahi dut, izoztuko naiz!».



«Esaiok ziega erre duen hire lagun horri!».

Ordu eta erdiz eduki gaituzte euripean, plexiglasezko babes txiki bat baino ez dago eta haizeak jotzen duenean ez du deusetarako balio.

Txanbergorik gabekoak ia denbora guztia oihuka eta ateari danbadaka pasatu du, berarekin zegoenarekin hitzik egin gabe. Ezker aldekoak hizketan aritu dira. Eskuinaldekoari zigarreta bat pasatzen saiatu dira, ni tarteko. Iritsi da nirera zigarreta. Bota dut beste alderantz eta trabatuta gelditu da sarean! «Bota iezaiok zapata!» esan dit batek. Ordurako sagar mutxikinarekin hamaika saio eginda nituen. Talaiako kartzeleroen irriak erraz irudikatzen ditut, ziminoon miseriaren lekuko. Erori da zigarreta lehen zapata kolpez. Bustita dago lurra. Saiatu naiz berriz. Oraingoan putzura. Apurtu da. Esan diet. Ez didate kargu hartu, sinetsi didate. «Pasa pospoloak!» batak besteari. «Ezin dut». «Surveillant!».

Etorri da erizaina. Begiratu ditu. Ni ez. Zer ikusi ote du?

Garrasika, ate joka jarraitu du besteak. Bortxatzaileei deika eta irainka. Nik jada *Txori erresiñula* buruz ikasi dut…

Bat-batean agertu dira kartzelazainak… Ez bakarra, zer nahi ote duen galdezka, ez, tropela baizik, bospasei. Errieta egin diote oihulariari. Isildu da. Alde egin dute, ez noiz etorriko diren, ez beste argibiderik eman gabe.

Orain arte lasai egon diren beste bietariko bat, arabieraz oihuka hasi zaie. Irain-soka ederra nire ustez! Ni ere hasi naiz euskaraz, sasikumeka. Eta berriz urduria, garrasika, ate joka...

Euria, iluntzea.

Badatoz bila. Lasai daude zaindariak. Kerik ez dago. Aspaldi ekar gintzaketen ziegetara. Irriz ari dira, haien artean, gertatutakoari buruz hizketan. Gaur «berandu» afalduko dugu. Bazkaria ekarri duen kartzelazainak «gertatu denarekin…!» kexu modukoa egin du erretilua eman didanean…

### TXORI ERRESIÑULA

Txori erresiñula, üdan da khantari
Zeren ordian beitu kanpoan janhari
Negian ezt'ageri, balinban ezta eri!
Udan jin baledi, konsola neinte ni

Txori erresiñula ororen gehien
Bestek beno hobeki hark beitü kantatzen
Harek dü inganatzen, mündia bai trunpatzen
Bera eztüt ikhusten bai botza entzüten

Botz haren entzün nahiz herratürik nago
Ni hari hüllant eta hura hürrünago
Jarraiki nintakio bizia gal artino
Aspaldi handian desir hori nian

Txoria zünen eijer khantüz oihanian!
Nihaurrek entzün dizüt igaran gaiian
Eia! Guazen, maitia, bi biak ikhustera
Entzüten badüzü xarmatüren zütü

—Amak ützi nindizün bedats azkenian;
Geroztik nabilazü hegalez airian.
Gaiak urthuki nindizün sasiño batetara
Han züzün xedera, oi! ene malürra

Txoria, zaude ixilik, ez egin khantürik
Txoria, zaude ixilik, ez egin khantürik
Eztüzü profeiturik ni hola phenatürik
Ez eta plazerik ni thunban sarthürik

—Bortiak xuri dira elhür dienian,
Sasiak ere ülhün, osto dienian.
Ala ni malerusa, zeren han sarthü nintzan?
Jun banintz aitzina, eskapatzen nintzan.

Xoria, zaude ixilik, ez egin nigarrik.
Zer profeitü dükezü hola aflijitürik?
Nik eramanen zütüt xedera laxatürik
Orhiko bortütik, ororen gañetik.

## INKOMUNIKAZIOA

Isolamendukoen ziegak eta zigor ziegak ondoan daude. Korridore banatan. Isolamendukotik irtetean eskuinera dagoen korridorean hasten dira zigor ziegak. Bertan daude.



Beraz, atzo zigor ziega bat erre zen. Zigor ziegetakoak patiora jaitsi zituzten. Afaria berandutu zen. Zigor ziegetakoak eta ni bost eta erdiak arte eduki gintuzten kanpoan.

Gaur isolamenduko beste bi jaitsi dituzte nirekin patiora. Ez zekiten ziegarik erre zenik!

«A!, horregatik eman ziguten afaria hain berandu…», aipatu du batek.

## IKUSTALDI AMAIERA

Une zaila da ikustaldi amaierakoa. Preso daukatenarentzat eta ikustera etorri direnentzat.

Kartzelazainek profesionalki egiten dute beren lana: preso daukatenak, denbora murrizketagatik egiten dituen protestei entzungor, haur ttipiei bezala mintzatuz… Ikustaldi kutxa txikitik atera eta badaramate umilaziorako bidean.

Kartzelan gelditzen denak, 35 minutu goxoak ahalik eta gehien gorde nahi lituzke bere buruan, bere bihotzean, bere azalean, maite dituenen, maite

dutenen usaina arropetan ahalik eta luzaroen gorde; kartzelaren giro hitsaz isolatu…

Hor daude kartzelazainak ordea, bere gorputz biluzia arakatzeko, bere arropak banan-banan, kleenex pakete barrua ere, miatzeko, ikustaldiaren lurrina desagerrarazteko: preso dagoena ziegara iristerako deus materialik ez duela ziurtatzeko, ahalik eta gutxien arimazkorik.

Kartzelan gelditzen denak, miaketari aurre egiten dio, berriro ere janzten hastea eskatzen du guztiz biluztu aurretik.

«Ez!, guztiz biluztu!». Eta biluzik dagoela: «Itzuli zaitez!». Atzealdea erakusteko. Oraingoan ez diote ahoa irekitzerik eskatu.

Amaitu da umilazioa; orain labirintoan barrena, kontzentratuta, kartzelazain saldoaz inguratuta.

«Zentroan», autobusaren zain dagoenaren itxurak egiten, Zuzendari anderea dago. Ikustaldi garaian, ikustaldi kutxen inguruan ibili da, piztia harrapakinaren inguruan bezala.

Ondotik pasatu naizenean, «egunon!» esan dit. Ez diot erantzun.

«Ez al duzu informaziorik nahi?».

«Zerbait esan behar baldin badidazu, esadazu».

«Egunon esan eta ez duzu erantzuten».

Isiltasuna erantzun.

Bidean aurrera, gora goaz.

Ondoan datorkit. Ez diot begiratzen, auskalo zein keinu egiten ari diren haien artean…

Ziegara iritsita barrura sartzen zait. Esaten diot idatziz eskatu dudala bilerak gela batean egitea, ez ziegan. Ez duela jaso oharra, zuzendari-ordeak izanen du. Hurrengorako, ados, oraingoa bi minututxo besterik ez direla izango. Nik badakit ezetz. Maite dute ziega barruan elkarrizketa luzatzea. Gainera, barrurakoan ziegako atea nabarmen itxi du, bi minututxo baino gehiago izango diren seinale.

Abokatua datorkidala, bihar; ez dakiela harekin egoterik izango ote dudan… ikusiko duela (?). Ondoren, egin dizkiedan eskaeren zerrenda aipatzen du (azenarioa), eta segituan, kartzela barruko nortasun txartelerako ar-

gazkiarekin dagoen «arazoa» (makila): argazkirik ezean ez dudala ikustaldi gehiagorik izango… Korapilatzen da.

«Nire nahi adina argazki eta bideo badituzue» esan diot, hartzeko hortik.

«Nola guk? Nortzuk guk?».

«Zuek, Frantziako Estatuak. Ez al zara zu estatuaren partaide?».

«Bai».

«Horixe ba!».

«Ez dut ulertzen zergatik izan behar den desberdin zurekin».

«Egin ezazue argazkia, nahi baduzue».

«Baina burua jaitsiko duzu?».

«Egin ezazue».

«Zergatik urduritzen zara?».

«Mehatxuka zatoz».

Jarraitzen du. Mozten diot esanez bi minututxo besterik ez zirela izango eta luzatzen ari dela. Lehen aipatu diodanez, nire intimitatea babesteagatik nahi nuela bilera beste gela batean. Iruzkin ironikoa egin du, hurrengoan nire intimitatea babestua izango dela, eta zergatik mespretxatzen ditudan galdegin dit; zergatik ez naizen ongi hezia.



Joan da. Gozoa zegoen atea gurutzatu duenerako. Bere menpekoen aurrean nork agintzen duen erakutsi nahiko du, beraz norgehiagoka arituko da nirekin.

Joan da. Arrebak-eta ekarritako arropa garbiak poltsatik atera, eta miaketa guztien azpitik eta miaketa guztien gainetik ekarri ditudan maitearen malkoak nireganatu ditut: egarri greba bitartean gainean zuen lepoko zapia sartzea lortu dut!

Afaria ekarri bitartean, leihotik kanpora begira egon naiz, lehen aldiz, lasai, ikustaldiaren goxotasuna gordelekuetatik ateratzen, berriro burutik beheraino gizatasunez janzten.

Maite zaituztet!

## LA SORTIE

Kartzelako buruak haserre esan dit
Ez naizela haiekin batere «poli»
Haiek beti diote, «bonjur», «bonapeti»,
Ni, begiratu gabe, isil nago beti
Hipokresi gutxi
Giltza hark du noski
Giltzapean nau ni…
Nahi duzu kortesi?
«silbuple» esango dizut, oso goxoki
Gure Herritik atera, «buala la sorti»
Gure Herritik atera, «buala la sorti»

## ALJERIARREN TALDEKO 10a

Orain artean inoiz entzun ez dudan auzokidea jaitsi da gurekin.

Arabiar kutsu itxia du. Gauza asko ez dizkiot ulertzen. Koranari buruz mintzatu zait, gaindiezina dela, Alaren hitza baita. Fedea.

Ahal izan dudanean, nire korana euskara dela esan diot.

Ulertzen duela, bai, Aljerian kabilak daudela. Bera kabila dela.

Ni baino lehen egondako euskaldun kantariaz aritu gara. Indartsuak dira haren kantuen oihartzunak.

Re-ko irlatik dator, badirela han euskaldunak. Haietaz aritu gara, Mikel izeneko batek ondo jokatzen duela futbolean.

Nola izena duen galdetu diot. Ez dut oroitzen izena, arabiarra dela badakit. Gaineratu du, Espainian jokatu zen 82ko Mundial hartan aljeriar taldeko 10ak bi gol sartu zizkiola Alemaniari (edo bigarren gola sartu ziola), «haren izen bera dudanez, horrela ezagutzen naute: aljeriar taldeko 10a».

## MINTZA PRAKTIKA

Oso nekatuta bukatu nuen atzoko eguna.

Ikustaldia izan nuen goizean. Gainera, ezustekoz, ikustaldi bikoitza egiten utzi ziguten: ordu eta erdi luzea. Arratsaldean, abokatua etorri zitzaidan

eta ia bi orduz egon ginen solasean isolamenduaren luzapena dela-eta antolatutako entzunaldia baino lehen.

Luzapena berretsi bitarteko entzunaldian isilik egon nintzen. Ondoren, beste ordu erdi bat abokatuekin hizketan.

Atzo arte, hiru hilabetetan 8 ordu eta 50 minutuz hitz egiteko aukera izan nuen. Atzokoarekin beste 4 ordu eta 10 minutu! Mozkorraldia.

Orain beste hamabost egunetako isiltasuna dut (kartzelazainen galdera eta aipamenak alde batera utzita), atzo hitz egindakoa mamitzeko.

## «EZ DAKIGU NOLAKOA DEN»

Atzoko entzunaldian nitaz kexu zen zuzendaria.

Beste preso batzuk nolakoak diren jakiterik izaten dutela, nirekin aldiz ez dagoela modurik. Zalantza eragiten omen diet.

Onartzen dute isolamenduaren eragin kaltegarria… baina nola aterako naute isolamendutik nirekin komunikatzea lortzen ez badute?



Horixe omen da gakoa eta: lehendabizi bahitu, ondoren inkomunikatu eta isolatu, bahitzaileekin komunikatu dezadan haiek inkomunikaziotik ateratzea merezi ote dudan erabakitzeko...

Ez nien hitzik egin.

## FESTA!

Atzo kartzela-isolamenduaren hirugarren hilabetea ospatu nuen.

Senideek Gabonetako 5 kilotako paketetik falta zitzaizkidan 600 gramoak ekarri zizkidaten: babarrunak eta ajoarrieroa!

Gainera, atzo, hilabeteko lehen ostirala izanik, eri diren presoen askatasuna eskatzeko bazkari-errefusa egitea egokitzen zitzaidan.

Atzo ekarri zidaten kantinatutako lapikoa eta berotzekoa ekarri zidaten…

Denak egin zuen bat hiru hilabete gaizto hauetako bazkaririk onena izan zedin.

Lo-kuluxka ere egin nuen!

## «BAZKALDUKO AL DUZU?»

Gaur bazkalorduan ireki didate atea lehen aldiz.

«Bazkalduko al duzu?».

Atzo, abokatuekin egotetik itzultzean, ziegan nuen afaria; atera egin nuen: errefusa.

Gaur zer egin.

## ITXURAK ENGAINATZEN DU

Poloniarra, kabila, euskalduna... Bada paristar bat ere gure artean, bere burua bretoi gisa aurkezten duena.

Hitz-aspertuan galdegin diot ea jana berotzen duen, edo nola egiten duen, goizaldeko ordu txikiak arte lo egon ondoren ordu batean jaikitzen baita promenadarako.

Gaur, jaiki eta mergezak jan dituela esan dit. Gaur ez genuela mergezik esan diot, identifikatu ez dudan haragia baizik.

«Musulmana naiz», erantzun dit.

Bi gauza ikasi ditut, paristar-bretoia musulmana dela eta gaur jan dudana txerrikia zela.

### ELKARTASUNAREN IZEN PROPIOAK

— Urtarrilaren 7an, Bautista Barandalla, Juan Jose Rego eta Jon Agirrerekiko, eritasunagatik aska ditzaten.
— Urtarrilaren 8an, Peru Aranburu eta lagunekin jasandako istripuarengatik.
— Urtarrilaren 8an Xabier Gojenola eta lagunarekin jasandako istripuagatik.
— Urtarrilaren 8an, Mikel Arretxe eta bere senide eta lagunekin izandako istripuagatik.

## DISPERTSIOAK BELARRIAN MIN

Oihuka jaitsi naiz patiora: «Non à la Dispersion!», «Les prisonniers basques au Pays Basque!»

Hamar minutuz egon naiz garrasika: eztarria, birikak eta hiri-erdiguneko lau hormak berotuz.

Promenada bukatuta, ziegara eramateko zetozela entzun dudanean berriro hasi naiz oihuka.

Bota dudan garrasiak min egin omen dio belarrietan miatzera hurbildu zaidan kartzelazainari: «Ez, ez, ez, Dispertsiorik ez!», «Euskal Presoak, Euskal Herrira!».

## IDAZTEA EZ DA SUZEDANEOA

Bananduta daudenen artean, inkomunikazioa hausteko, elkarren berri izateko, aurrez aurrekoaren ordezkoa da idazketa.

Baina bere ordezkatze-lan horretan ez du aurrez aurrekoaren suzedaneo izaera. Ez da gutxiago. Bere horretan, hartu-eman osoa eraikitzen du. Desberdina da.

Noski, aurrez aurrekoarekin alderatzen hasiz gero, galtzaile izango da beti idazketa bidezko komunikazioa. Ezin alderatuzkoa da, ordea.



Idazketa ordezkoa da, zentzugabekoa delako aurrez aurre dauden bi pertsonak, mututasunaren ezintasunak jota ez badaude, elkarren artean idatziz komunikatzea. Baina bere ordezkatze lan horretan komunikatzeko modu osoa, aberatsa, irudikorra, oroimen pizgarria eta zorion eragile ere bada.

## EZ NAUTE MIATU

Igande goiza.

Dei-argia piztu dut. «Begia» etorri da.

«Zer da, dutxarako?».

«Ezin al duzu atea ireki?».

«Zer da, promenadarako?».

«Ezin al duzu atea ireki?».

«Bai irekiko dut, baina zertarako da?».

«Ireki bada!».

Etorri dira. Ireki dute.

Promenadara atera nahi dudalako piztu dudala argia, ea zein ordutan den.

Orduan bertan.

Jantzi bitartean atea itxi dute.

Etorri dira. Atera naiz. Ez naute geldiarazi ziegako atean, arropa gainetik ukituz egin ohi didaten miaketa hutsal eta umiliagarrirako…

Harritu egin zait gorputza. Nire kabuz gelditu naiz ia, miatu nintzaten!

Bazterrean jarri dira, abiatu naiz, ur botila eskuineko eskuan, *Eusko Gudariak* abestuz… ez oso ozen, lo daudenak ez esnatzearren.

Ia bi oren beranduago ere, txangotik itzuleran, ez naute miatu.

## «EZ GAUDE ESKOLAN»

Batzuetan ahoa irekitzeko eskatzen didate. Bestetan ez.

Eskatzen didatenetako unea gogorra da. Uko egiten diot. Hizketan ari naizela eta argi dagoela ez dudala ezer ahoan esaten diet, uzteko.

Presatuak badira eta gizatxar ustelak ez badira uzten naute. Baina nork agintzen duen erakutsi beharra dutenik baldin badago haien taldean, estu hartzen naute.

Sei edo zazpi nituen aurrean. Uko egin nion. Jantzi eta banindoalarik, haietako batek ahoa irekitzeko agindu zidan. Ezetz. Telefono deia.

Senideek ekarritako jakien poltsa eskuan neukan. Kartzelazain batek, poltsa jasoa nuela zioen orria zekarren eskuan, sina nezan. Besteetan bezala, hizketan ari nintzela eta argi zegoela ez nuela ezer esan nien, senideekin egotetik nentorrela, ez nintzela ez zaldi edota esklabo bat!

Estu hartu ninduten. «Intzidentea» edo nik dakit zer, bazetorren. Aurrean nuen batek «hau ez da eskola, hau kartzela da!», esan zidan.

Begietara begiratu nion eta ahoa ireki, deus ez nuela erakutsiz.

Ez zen aski. Gehiago nahi zuten. Iskanbila. Erakutsi niola esaten nion. Ez zela aski.

Eztabaidaren une batean, berriro ere begietara begiratu eta apur bat gehiago ireki nuen ahoa.

OK.

Pasatzen utzi zidaten.

## «ATERA MIHIA»

Abokatuak ikusi eta gero *fouille à corps* (gorputza erabat biluziz egindako miaketa sakona) egingo zidatela aurreratu zidaten.

Joan ziren abokatuak. Ezagutzen ez nuen gela batean sarrarazi ninduten. Kartzelazain bakarrarekin. Handia. Burusoiltzeraino moztua ilea.

Biluzteko. Gainekoa kendu eta gero, janzten hasi nahi nuela esan nion. Ezetz. Osorik.

Eta ahoa irekitzeko esan zidan, eta ireki nuen; eta mihia ateratzeko, eta atera nuen.

## DUTXAKO ABENTURAK

Gaur dutxara joateko ia hogei minutuz egon naiz zain.



Dutxan, janzten ari nintzela, kartzelazaina atea ireki eta barrura sartu da! Hori besterik ez nuen behar!

Dutxarakoan eta itzuleran ere ez naute miatu.

## «VIVE L'ETA»

Goizetan gimnasioa betetzen da.

Ziegako leihora igota ikusten dut, estai berean baitago.

Han zegoen bat isolamenduko batekin hizketan aritu da.

Beranduago «Vive l'ETA!» entzun dut; bitan.

Leihora agertu naizenerako denak zebiltzan jadanik beren zereginetan.

Ostiralean telebistan esan zuten hemen nagoela.

## KONSTITUZIO EGUNA: «GORA ETA!»

Moulinsen nengoela egokitu zen Konstituzio espainiarraren eguna.

Erakundearen lehergailu andana hiru egun lehenagokoei segidan. Arratseko telebista berrietan entzun nuen. Parean nuen auzokoak ere. Atera hurbildu eta zirrikitutik «Gora ETA!» oihuka aritu ginen.

Hiru egun neramatzan gose greban, eta jakin berri nuen emazteak ia astebete zeramala egarri greban. Egarri grebari ekitea erabaki berri nuen. Gora ETA!

## ASPALDI ELKAR IKUSI GABE!

Hiru patiotan ez gara beti berberak egoten.

Hiruzpalau egun ziren auzokoarekin batera ez nindutela atera.

«Aspaldi elkar ikusi gabe!» esan diot.

Segituan ohartu naiz, berez behin bakarrik ikusi dugula elkar. Geroztik elkar entzun besterik ez dugula egin.

Zuzendu dut: «aspaldi elkar entzun gabe!».

## AURKEZPENA

Orduan ohartu naiz kartzelazainek «aurkeztu» gintuztela.

Elkarrekin jaitsi gintuzten lehen aldian, bera nire patio aurretik pasarazi zuten, elkar ikus genezan.

Geroztik, kontu handia egiten dute patiora sartu eta ateratzeko ordenarekin. Ni lehena sartzen banaute ni aterako naute azkena. Bigarren sartu dutena bigarren eta azken sartutakoa lehen.

Ez dago ahotsezkoa ez den bestelako kontakturako aukerarik.

## MARMARKA

Atea ireki didate.

Ikusten ez dudan kartzelazain baten marmarra entzuten dut. Aurrean dudanak ozen errepikatzen du besteak ahapeka esandakoa:

«Promenadara aterako al zara?».

«Ez».

Berriro ere ikusten ez dudan kartzelazainaren marmarra. Besteak, ozen:

«Dutxatuko al zara?».

«Ez».

Ikaslea izango da. Ikasi du bada dagoeneko film ia mutu honetako elkarrizketa bakarrenetakoa.

## MOZORROTUAREN OSTIKADA

Lapur zanpatzaileak etxean sartu zirenean, arma luzeekin destatu, lurrean ahospez etzan arazi, eskuak bizkarrera lotu eta izena galdegin zidaten.

Ez nuela deus esateko esaten bukatu aurretik buruan ostikada jo eta haserre galdetu zidan berriz izena mozorrotuak.

Etxean geundela, itzultzailearen aurrean galdegin nion haietako bati ea bera ote zen ostikoz jo ninduena. Galderak sutan jarri zuen. Ez omen zen asko babestuta sentitzen mozorroaren atzean.

Galdeketa egiten ari zidaten gelatik aterarazi ninduen, beheko egongelara jaitsi ninduen, atea bortxaz itxi eta bere aurpegia niretik bost zentimetrotara kokatuz, bere onetik aterata, «gaizki portatu al naiz ni zurekin?» galdegiten zidan behin eta berriz. Nola jakin nezakeen bera izan ote zen? Jo zidanaren botatzarra ere ikusteko aukera izan ez banuen.



Eskuak bizkarrean loturik, galtzontzilotan ninduten oraindik. Bera ordea, ninja dortokaz jantzirik, babestekoak, mozorroa, armatua… Irainka hasi zitzaidan: «Kaka baino gutxiago haiz niretzat, aurpegira tu egitea ere ez duk merezi!».

Mozorrodun asko ikusi dut geroztik. Galdera berriro egiteko egokierarik izan ez dudan arren, niretzat mozorrodun guztiak (eta mozorro gabeak ere!) dira ostikada horren erantzule.

### «JE N'AI RIEN À DÉCLARER»

C'est vous
qui avec un coup de pied sur la tête
(«Je n'ai rien à déclarer»)
m'avez redemandé mon nom
au nom du peuple français ?

Celui-là couvrait sa tête avec une cagoule
comme vous.
Il n'avait pas de visage
Comme vous.
Ça pouvait être n'importe qui,
c'était peut-être vous.

Ce n'était personne,
il représentait l'État français
comme vous.

## FRANTZIAR HERRIAREN IZENEAN

Galdeketan, denbora luzez mutu egon ondoren komisarioari (edo inspektorea zen?) lapurren moduan sartu zirela esan nionean, hark argi utzi zidan, lapurren moduan sartu baziren ere, beraiek «Frantziar Herriaren» izenean egiten zutela.

## AZUKREA

Auzokoak azukre asko hartzen du. Nik guti. Afalorduan, atea zabaltzen digutenean, kartzelazainei nire azukrea hari emateko eskatzeko ohitura dut.

«Ez», esan dit gaurkoak. «Zuk ez duzu egunonik ematen, ez duzu mesedez eskatzen; nire haur txikiak ere zu baino hobeto hezitakoak dira».

Keinua egin diot. «Mesedez...» hasi natzaio.

«Ez. Bihar». Itxi du atea.

Auzokideak ez du gaur terik edango. Azukrerik ez duenean ez omen du terik edaten.

## IDATZ PROIEKTURAKO EKARPEN GEHIGARRIA

Marixolen ekarpena: «Bazeudek bi mundu horietan hik aipatu gabeko bereizgarri batzuk, nik bizi izandakoarekin lotuta daudenak: alferkeria, utzikeria, frustrazioa, menpekotasuna, beldurrean oinarritutako harremana, eroskeria...».

## 200 gr.

Kartzela zuloetan atentzio bereziz entzundako berria: 200 gr. pentrita aurkitu dituzte «La Santé»ko isolamenduan.

Auzokoak bozkario oihua bota du. Ez dut uste kartzelazainak asko poztuko zirenik.

Giltzapean daudenak poztu egiten dira, isolamenduan 200 gr. leherkari sartzeko gaitasuna izan dutelako. Giltza dutenek arnas hartuko zuten aurkitu dutelako, baina batez ere beren sistema krudelean horrelako zuloa egiteak kezkatuko zituen.

Isolamenduan zeuden laurak beste kartzeletara sakabanatu dituzte.

Horietako bat da Moulinsen parez pare neukan ziegan zeukatena. Gose eta egarri greban nengoela, arratsaldero, atea jo eta inori ikasitako adorezko «Atxik gogor!» eder hori esaten zidana.

Atxik gogor, hik ere!

## ERRADIOGRAFIA



Aurre abisurik gabe deitu naute erradiografiak egitera.

Iristen diren guztiei egiten omen diete. Niri duela hiru hilabete egin zizkidaten Moulinsen. Emaitzak jakiteko tematu nintzenean ez nuela deus esan zidaten.

Hemengoak, birikak eta hortzak hartuko dizkidala esan dit. Biluztu naiz gerritik gora. Arnasa hartu. Kito. Ondoren, hortzak. Oraingoan ez naute dentistarengana eraman.

Emaitzak noizko? galdegin diot. Bere berri ez badut osasuntsu nengoenaren seinale izango dela esan dit. Izan ere jende asko dute artatzeko eta osasuntsu daudenei hori jakinarazteko ere ez omen dute astirik…

Gutxiago kartzelaratu beharko zenituzkete, esan diot.

Nire hortzen erradiografia begiratu du, bera medikua ez izan arren ba omen daki zer edo zer. Ez duela deus larririk ikusten esan dit, eta gaineratu du giltzapetu askok eta askok hortz arazo larriak izaten dituztenez horiekin baino ez direla aritzen…

Beraz, arazo txikiak dituztenek hortzak usteldu arte itxaron beharko dute artatze txanda hartzeko.

## IRRINTZIA AZPIDATZIEKIN

*Eusko Gudariak* abestuz ateratzen naiz kaiolara. Talaia daukat gain-gainean. Gaur talaiako kartzelazaina nabarmen jarri da. Ikusteko moduan. Irriz ari zen.

Ukabila pixka bat gorago altxa dut. Garrasiak ozenago bota ditut. Eta irrintzia azpidatziekin.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*LES ISOLÉS*: bakartuak, isolatuak.

## «ZER ORDU DA?»

Zigor ziegetako leihoak ateratzen gaituzten kaioletara begira daude.

*Mitard*-ekoek noizean behin: «E! isolamendukoak! Zer ordu da?».

Talde bat osatzen al dugu bakartuta ere? Plurala arraroa egiten zait.

## BOTEREDUNAK BIKTIMA

Ziegan hogeita bi orduz naukana minduta dago. Ez baitiet bere «egun onei» erantzuten.

Ezin dut bere mina ulertu.

Defentsazko biolentzia ote da ere haiekiko gaizki hezitakoa bezala agertzea? Kondena larrituko al didate?

## ISOLAMENDUAREN LUZAPENA

Isolamenduko tortura luzatzeko erabakia hartzeko arrazoien artean «nire jokabidea» dago. Kartzela eskualde zuzendariak sinatuta.

Zer irakurri ote du nire jokabideaz? Nire jokabidea duten presoak isolamendura zigortzen ote dituzte?

*Eusko Gudariak* abestu, dispertsioaren aurkako oihuak bota, baraua egin, kartzelazainei ez begiratu eta ongi hezitakoenak omen diren kortesiazko formulei ez erantzutea da nire jokabidetik azpimarratu daitekeena.

A, bai! Beste hau ere kontuan hartuko zuten: entzunaldian zuzendariak esan zuen «inguruan gertatzen zenak nirekiko eragin edo harremanik ez balu bezala nengoela kartzelan». Hau da «ez banengo bezala» zela.

Horregatik ote naukate isolamenduan? «Egon» arte?

## BA AL DAKIZU ZER DEN ISOLAMENDUA?

Ohi duen bezala, eta nire eskaerari muzin eginez, Kartzela-buru andereak ziegara sartuta bertan antolatu du bilkuratxoa.

Kartzelazain bat dago kanpoan, adi. Pastanagrea edo azenarioarekin datorkit. Aitzakia: isolamendu luzapenaren aginduaren kopia ematea (jadanik zuzendariak eman didana… berak ez jakin, nonbait); azenarioa: euskarazko liburuak eskuratzeko eskaera baimendu izana. Hori bai, ©-dunak behar dute izan, eta ikustaldi bakoitzean bost gehienez. Haiek hartuko dituzte eta ikuskatuko niri eman aitzin.

Eta emazteari igortzea debekatu dituzten egunkariak? Erregelamendua aztertzen ari direla… ekarriko dizkidatela, segur aski.



Eta tenis pilota? Segurtasun aldetik izan ditzakeen arazoak aztertzen ari direla…

Dena kolore ederrez tindatzen du. Ohitua naukate hiru hilabete eta erdi exkaxean. Ezagutzen ditut. Piztiari hezurra jasoko duen esperantza eman eta beste aste bat igaroko da.

Laster botako naute hemendik.

Orduan eta denbora gehiago eman ziega barnean eta orduan eta buruhauste gutxiago haientzat!

Nire eskaera oroitarazi diot: bilerak gela batean egitea nahi dudala.

Beretzat praktikoa dela horrela egitea...

Baietz, sartu, esan beharrekoak esan eta badoala, baina nik agian izan dezakedala zer erantzun eta… tupustean galdegin diot: «Ba al dakizu zer den isolamendua?» (Gaztetan, fisikako irakasleari «ikusi al duzu inoiz guri ikasarazi nahi diguzun espektrograma famatu hori?» galdetu nioneko filosofia berari jarraikiz).

Oso gogorra dela erantzun dit.

«Ez, ez, galdera da ea egon al zaren inoiz isolamendu egoeran?».

«Inoiz espetxeratu nauten galdegiten badidazu…».

«Ez, galdegiten dizudana da ea zuen ikastaroetan isolamenduko egonaldirik jasanarazten dizueten, guri egiten diguzuena zer den jakin dezazuen».

Ezetz esan dit. Badoa aterantz.

Tortura dela diost.

«Zu zara horrela bizi duen bakarra», saiatzen da nire salaketa indargabetzen.

«Bederen izango dut eskubidea tortura dela sentitzeko, ezta?».

«Bai».

Atea ixtera doaz, hatz erakuslea altxatu dut, haiengana luzatu dut. Ez dut «J'accuse» esan beharrik izan, soilik: «L'isolement c'est de la torture!».

## ILUNPEAN

Arratsaldeko seiak aldera lurperatzen gaituzte.

Eraikin bateko bigarren estaian nagoen arren lurpean egotea bezalakoa da. Leihoa izan arren, leiho horrek ez du aterabiderik eskaintzen. Berdin egon zitekeen ziega lurpean. Atea beti dago itxita, baina seiak aldera, giltzazko sarrailari eskuz ixten diren beste bi morroilo gehitzen zaizkio. Ez daude olioztatuak eta egiten duten zaratak atea ixten dela azpimarratzen dute krudelki, beren intziri, irri karkaila, eta karkaxekin.

Bukatu da eguna. Lurpean zaude. Ez du inork irekiko 13 edo 14 ordu barru arte.

Bakartuta dagoenaren bakardadea. Hor dago telebista. Hor dago ohea. Irakurri. Idatzi. Giltzapetuak, bere adimenez, bakardadeari aurre egiteko maratoian egun bat gehiago gainditze bidean du.

Bera zigortzeko asmatutako egoera abantaila bihurtzeko abagunea du. Inor sartuko ez den ziurtasunak askatasuna demaio. Behatxuloa dute komunikatzeko modu bakarra. Errondak. Ordu erdiro, Orduro. Gau guztian zehar. Behatxuloaren zarata. Argi pizketa. Esna egonez gero, traba. Erdi lo egonez gero, ernegu. Lo egonez gero, batzuetan esnatu. Eta gauero, esnatua izateak sortzen duen urduritasuna.

Babesa. Superbibentzia. Antolaketa.

Lagunei, preso dauzkaten besteei idatzi; maitearekin elkarrizketatu, senideekin komunikatu. Beranduago, film on samar bat dago telebistan. Gaur patata frijituak eta freskagarri bat hartuko ditut...

Giltzapetua bere munduaren babeslekuan barneratzen da. Ez daukate preso, pertsona da; non dagoen ere ahantz dezake une batez. Bere bihotzeko zorionak dena kutsatzen du, zanpatua egonik ere zoriontsu da.

Behatxuloa. Sabaiko argia. Kartzelazainak ez nau ikusten. Idatz mahaian eserita nago. Armairuko atea zabalduta geratu da orri zuriak hartu ditudanean. Kartzelazainak ez nau ikusten. Sabaiko argia piztu eta itzaltzen du. Garrasika deitzen nau.

Idazten ari naizen horretan murgilduta nago. Gustura. Euskaraz erantzuten diot: «Badakizu hemen nagoela!».

Deika jarraitzen du.

«Zoaz antzarak ferratzera! Badakizu hemen nagoela!».

«Zure burua ikusi nahi dut!».

«Hemen nago! Badakizu! Utzi bakean!».



«Hori al da nahi duzuna?»

Kartzelazainak, ordura arte ezagutzen ez nuen arma sekretua du bere boterearen adierazgarri. Sabaiko argia kanpotik piztu dezakeen bezala kanpotik ere ziega ilunpean utz dezakeela deskubritzen dut.

«Gau ona pasa!» esaten dit ilunpean utziz. Badoa. Badoaz. Barrezka.

Arrazoiaren neurria gainditzen duen mina. Gutxiespena. Amorrua. Piztia baten modura erabiltzearen ondorioz azkenean animalia zauritu bat bezala altxatu naiz ilunpean.

Besteren desesperazioa ulergaitza da beti: ziegako ate kolpeak; ziegari su ematea norbere bizia arriskuan jarriz; gose eta egarri greba egitea; «zaindaria!, zaindaria!» negar batean deitzea.

Burua hotz izatea, yoga, nor garen eta zergatik gauzkaten hemen... Dena doa pikutara. Gizatxarkeria. Menderakuntza.

Jaiki naiz ilunpean. Atera iritsi eta dudan indar guztiz kolpatzen hasi naiz. Sekulako danbatekoak. Burdinazko atea dantzan jarri dut danbateko bakoitzean.

Auzokoak kexu dira. Nik, segi. «Piztu argia!» oihukatzen dut euskaraz.

Hurbildu dira, trufaka, nik esandakoa errepikatzen dute ahal moduan, batzuek gazteleraz ari zaizkit: «¿qué pasa?»…

Minberatuak zaizkit eskuak. Oinetakoa hartu eta kolpeka jarraitzen dut.

Piztu dute noizbait argia.

Behatxulotik begiratzen naute: «Horrela, bai! Orain ikusten dugu zure burua!».

Sekulako danbatekoa eman diot ateari haiek begira ditudan bitartean.

«Berriro itzaltzea nahi duzu?», egiten didate mehatxu. Baina badoaz, irriz, fier, beren gaueko zanpaketa-ekintza burututa.

Idazten ari naizena utzi eta maiteari idazten hasi natzaio. Eskua dardarka. Umilazioaren mina. Bere babesa, nigan. Bere indarra, nigan. Bere goxotasunaz goxa nazan, kartzelako ilunpe basatian aurrera egiteko argia, bera.



## AHANZTURAREN PUTZUAN

Hemen gaude,
isiluneak uxatzen
udaran euliak uxatzen diren bezala.
Isiluneak, bakarmortuan, malkoen aitzindari dira-eta.

Hemen gaude,
gure baitara bilduta,
oihartzunik gabeko elkarrizketan,
legediez deus jakin nahi ez duten zauri sendatzaileen
behar gorrian.

Hemen gauzkate,
segundo askoren
gehiegiren
meta erraldoiaren pean,
ahanzturaren putzuan
denen jakinaren gainean
egun argiko oinaze ikusezinean.

> Kartzelan, bakarturik,
> pertsonaren bizirautearen aldeko borroka
> hil ala bizikoa den zuloan,
> duintasunak ala heriotzak irabazten duen lekuan,
> pertsonek
> ala pertsona izandako izaki itzaltsuek
> irabazten duten borroka-lekuan,
> pertsonek
> ala pertsonak bizirik lurperatzen dituzten
> herioaren mandatariek
> irabazten duten ezerezean.

## KARTZELAREN IRAKASPENAK

Entzun izan dut kartzelan asko ikasten dela, kartzelak irakasten duela. Esaldi horrekin kartzelatik zerbait «onik» atera daitekeela onartzen da.

Kartzelatik atera daitekeen «on» bakarra gu gara. Gu. Norbera. Bere duintasuna osorik.

Eta kito.



> **KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**
>
> DUINTASUNA (kartzelazainen hiztegian): harrokeria, desobedientzia, lotsagabekeria, iraina…

## ATEA IREKITZEN DEN UNEA BALIATU

Egunean zehar gauza gutxi dago kobazulo kanpotikoarekin harremana duena.

Baina ondo buruan izan behar dira, kobazuloko atea irekitzean eta itxi baino lehen eskatzeko.

Bestela, atea ixtean… ahaztu dut! Inguruan badaude, argitxoa piztuta ere ez dira segituan etorriko. Gradudunaren beharra dute atea irekitzeko.

Minutuak aurrera. Frustrazioa! Ezintasuna!

## «STAR ACADEMY»

Promenada-kaiolan kantari.

Zigor ziegetatik oihua: «C'est pas ici la Star Academy!».

## LANA, PERTSONA, UNIFORMEA

Berriro ere ez naizela ongi hezia.

«Egun on» esan dit kartzelazainak.

Ni mutu.

«Egun on».

Edukazioa, bederen «mesedez» eskatzeko erratza eta kirola egiteko bizikleta eskatzerakoan.

Ni mutu, baina ez horregatik pentsatu gabe: «kobazuloa garbitzeko erratza eskatu behar izatea ere! Nire eskubidea den kirola egiteko eskatu behar izatea ere! Jendea eta herriak pobretu eta gero, laguntza eskatzen dietenean "mesedez" eskatzera behartzen dituen inperioaren zerbitzari hauek!».

Begirunea eskatu dit orduan, ez uniformeari, pertsona gisa baizik. Berak ez nauela hona ekarri... Bera bere lana ahalik eta ondoen egiten saiatzen dela...

Itxi du atea krisk-krask...

A! Zerbait gehiago gehitu nahi dio gaurko ikasgaiari, krisk-krask ireki du atea... Esan du esan beharrekoa.

Ni, beti mutu, nirekiko: «bapo geldituko hintzen».

Krisk-krask, itxi du.

Giltza banu agian esango niokeen zerbait.

## BERRIZ ARGAZKIA

Dutxatik bueltan zain nuen fotografoa.

Nire izenez deitu nau, ea argazkia egitea onartzen nuen. Idazkuna ez nuela eutsiko esan diot.

Ziegan sartu da nirekin, hormaren ondoan jarri naiz, burua lurrera begira, begiak itxita.

Burua altxatzeko agindu dit.

Nengoen bezala ateratzeko erantzun diot.

Klisk! «*Parloir*-era joateko agiria egiteko da» esan dit.

Agian, xantaia gisa lehenago esateko asmoa zuen.

Kito argazkiarena.

> **KARTZELAN JAKITEN DA**
>
> «Kartzelan jakiten da, eta ez jatordu oparoetan, etsaia nolakoa den».
>
> *Serbiar esaera.*

## TRUFAZ

Gaur, nire abizena trufa doinuz ahoskatuz esnatu naute.

## ERRETILUA



Besteen ziegak berriro irekitzen dituzte janari erretilu hustuak erretiratzeko. Nirea ez. Biharamun arte egoten da harraska gainean.

## DESCARTES

Descartes kaleko 9.ean naukate: idazten dut, beraz bizirik nago.

## ETSIPENAREN LITERATURA

Etsipenaren literatura: norbere porrotaren justifikazioa; besteren ez-etsipenaren iraingarri; literatura *collabo*-a; kintakolumna.

## «SINDIKALGINTZAN?»

Dispertsioaren aurkako oihuak bota ditut ziegatik patiorako bidean eta patiotik ziegara itzultzerakoan.

Itzuleran kartzelazaina trufaka: «Zer? Sindikatzeko asmoz?»

Dagoeneko zigor ziegetakoek ikasi dituzte oihuak: «Isolement torture», «Les prisonniers basques au Pays Basque» egiten dute oihu beraiek ere. Beraien ekarpena: «Le mitard c'est le placard» (Zigor ziega *armairua* da).

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*CAMISOLE CHIMIQUE*: farmako-uhalak. Farmako-uhalekin lotzen dituzte preso emakume asko.

GUANTANAONED

*PANAME*: Paris

## *PALAIS*-ERA

Goizeko lauretan esnatu naute kartzelazainek. Gau osoa pasatu dute argia piztuz. Urduri. Aztoratuta. Ez didate esan epaitegira ateratzen nindutenik eta nik ez nuen uste hain goiz izango zenik.

«Jantzi! 20 minutu dituzu».

Jantzi naiz.

Sartu dira lauzpabost kartzelazain.

«Erantzi!»

Miaketa, gorputz miaketa egin behar didate! Absurdoa eta zanpaketa. Umilazioa.

Behera naramate. Lau eta erditan kutxa txiki batean sartzen naute. Hiru ordu laurden emango ditut bertan, zutik, hormako graffitiak irakurtzen.

Badatoz berriz. Oraingoan jendarmeak dira.

«Erantzi!»

Gorputz miaketa. Profesionaltasuna, begirune zerbaitekin. Hala ere besazpitan sartu dizkit hatzak, nikia janzten utzi eta gero eta burua ukituz ileak ere nahasi dizkit. Ukitzen nauenean ez ukitzeko oihu egiten diot eta uzten nau.

Bagoaz. Marixol daukaten kartzela-atariraino. Jendarme auto bat ateratzen da. Marixol dago! Ikusten dut, ikusten nau, gure esku lotuak altxatzen ditugu, elkar agurtzeko. Ia lau hilabete elkar ikusi gabe!

Bidean, aurretik doa bera daramaten autoa. Marixol ikusten dut. Atzera begira dator, jarrera bortxatuan! Bere aurpegiak gaueko iluntasunean jen-

darmeen argi laranja eta urdinen artean eguzkiak bezala argitzen du nire bihotza.

Pixa egitera geratu gara autobideko atseden-leku batean. Berariaz egin dute. Inor atzean ote dugun ikusteko-edo.

Lehendabizi ni atera naute. Gero bera. Elkar musukatzeko baimena eskatu diot jendarmeari. Buruak esan dit, gero, agian, epaileak baimena emanez gero, epaitegian izango dugula aukera.

Marixol pixa egitetik itzuleran ni naukaten auto aldera hurbiltzen da, irribarretsu, indartsu, jendarmeek zakar pusatuz urrutiratzen dute.

Eguna argitzen hasi da. Lehen egunsentia dakusat, ekialdera goaz eta. Une batez, eguzkia eta Marixolen aurpegia, biak batera ikusmiran.

Epaitegi sarreran Marixol oihuka, bultzaka daramate emazteen ziega-kutxen aldera.

Ni epaileagana naramatenean *Eusko Gudariak* kantatuz noa. Isiltzeko agindu arren bukatu arte jarraitu dut.

Epaileari eskatu diot Marixol eta biok elkar besarkatzeko baimena. Jendarme buruak esan didala epaileak baimena emanez gero ez dagoela arazorik.



Ados.

Denborak jada ez du existitzen.

Epaile gelatik ziega-kutxen bideko korridore beldurgarrian segizioa gerarazten du jendarme buruak: dena ondo badoa utziko gaituztela elkartzen itzulerako bidean. Eta dena ondo pasatzen bada egongo dela aukera gehiago. Baina nik edo nire emazte edo «konkubinak» lehen bezala oihu eta garrasi egiten badugu ez digutela utziko.

Txintxo-txintxo naramate. Marixol? Gero jakinen dut.

Kutxa-ziegan nagoela, goizean parez pare izan ditudan jendarmeak badoaz. Aio.

Handik gutxira kartzelazain bat datorkit: «euskaldunak daude hor».

E!? euskaldunak? Hasi naiz galdezka. Bai, euskaldunak!

«Iepa! Nor haiz?».

«Eta hi?».

Ezin isildu, hizketan, kantuan, bertsotan, komunikazioa, nahiz eta ez ditudan ikusten, nahiz eta ez ditudan ezagutzen!

Hirugarren euskaldun bat dakarte… eta laugarren bat. Hor aritu gara honetaz eta hartaz. Batek ez daki oraindik euskara…

Halako batean, besteen jendarme-zaindariak eta kartzelazainak urduritu dira:

«ETAkoak dira», batak besteari, «elkarrekin jarri dituzue».

«Bai». Arrunta dela esan dio.

Haietariko batek keinua egin du nigana begiratuz. Nonbait ni ez naiz arrunta. Ez horixe! Lau hilabeteren buruan, lau orduko kalaka etengabea. Graffitiak egin ditut hormetan —bertsoak—, musuak Marixol eta bion partez. Data. «Orain Borroka, Orain Herria, Orain Bakea». «Irabazi dugu».

Itzultzeko ordua. Hamar ordu pasatu egin ditugu epaitegian! Ordubeteko itaunketarentzat.

Bidean goazela ea pixa egin nahi dudan galdegin didate. Baietz, ezetz, agian... nahi badut hura dela unea, gero ezingo dela. Baietz orduan.

Geratu gara autobideko atsedenlekuan. Ilun dago. Banaramate ondo zainduta, pixatokian inor ez dagoela ikuskatu eta gero. Ez dut egin.

Ateratzean, hor daukate Marixol. Jendarmeek inguruak «ziurtatu» dituzte, inguruan hedatu dira. Arriskurik gabeko muxua izango da gurea!

Arma luzeak eskutan, biribila osatzen dute gure inguruan. Inguratzen gaituzte biribilean, arma luzeak eskuetan.

Esku loturik gaude biok. Jendarme-buruak eskuburdinetara doazen kateak eusten ditu.

Denborak ez du neurririk.

> Gau ilun eta hotzean
> armadun gizonez inguraturik
> esku loturik, esposaturik
> gure ezpainen dardaran
> gure begien egarrian
> gure eskuen harriduran
> hamaika «Gora ETA!» oihukatzeko indarra
> sortu dugu.

Norbaitek aski dela esan duen arte. Banandu gaituzte. Auto banatan sartu gaituzte. Ahapetik, indarge, zoriontsu, *Eusko Gudariak* kantatu dut.

Marixol daukaten kartzelaraino joan gara aurrena, neska-laguntzen-edo! Sartu dute. Ni naukatenera ondoren. Sartu naute. Ziegan nago. Kartzelazainek, abegikor, afaria hotz izango dudala eta epelagoa ekarri didate. Ez dut behar. Ase naiz. Urtarrilaren 27a da, amaitu da bakarmortua.

## OPARIAK

Arratsaldea, hiru atera gaituzte kaioletara.

Batek tabakoa erosteko eskatu dit. Bai, erosiko diodala.

Bestea isil dago. Dei egin diot.

«Ez nago hemen», erantzun dit.

Hastapenean ez diot ulertu zer esan nahi izan duen.

Errepikatu du. Eta gero mutu. Nola sentitu daiteke hainbesteko mina horrelako txikikeria batengatik! Ezagutzen ez dudan eta inoiz ikusi ez dudan norbaitek eraginda, gainera!



Berantago, ea zer duen galdegin diot. Nik dakidala ez diodala deus egin.

Mutu.

Bazkalorduan gertatu dena gogoratu dut: auzokoaren partez bi koka-kola eta bi orangina eman dizkidate. Harritu egin nau. Bana hartu eta besteak hirugarren isolatuari emateko esan diet kartzelazainari.

Horman jo eta leihora atera naiz: Ahmed!

Deus.

Bitan saiatu eta etsi dut.

Geroxeago, auzokoa kartzelazainekin eztabaidan entzun dut.

Sumatu dut edariak ez zirela enetzat. Atea jo dut. Ireki didate. Hasieran, ez dela ezer esan didate, baina tematu naizenean jakinarazi didate edariak ez zirela enetzat, bestearentzat baizik. Leiho-hozkailura joan, hartu eta hari helarazteko eman dizkiet.

Beraz, arratsaldean, kaiolan, tabakoa eskatu didanari, edariak jaso dituenari alegia, gertatu dena azaldu diot.

Bitartean, oparigilea hor zegoen beste kaiolan, isil, mutu. Nirekin mutu.

Bakarmortuan, opariak, harribitxiak dira, elkartasun-harribitxiak.

Eta haserrea, mespretxua, erdeinua ordea, ezpatakaldiak bihotz sentiberan.

# Bretainiatik Okzitaniara

[*Sartu bezala atera ninduten Naonedeko gizonentzako kartzelatik. Esku-burdinak eta hanka-trabak jartzen hasi zitzaizkidanean* Eusko Gudariak *abestu nien, ozen. Autoz abiatu ginen, hegoalderantz. Eta gero eta hegoalderago eta gero eta hunkidura sakonagoa nigan. Hitzik ez auto barruan, mozorrodun bana alboan neramatzan. Marixolek ere nire bide bera beste auto batean egingo zuela uste nuen. Bordelen gelditu ginen ibilgailuen ezantza gordagiak betetzera, pertsonon maskuria hustera. Eta ondoren ekialdera, Euskal Herritik urrunduz. Isolamenduaren amaiera zela nekien eta urduritasun eta garaipen sentimenduak nituen. Lau hilabeteko zigorra amaitua zen, nahiz eta oraindik ere borroka asko egin beharko genuen Kolektiboko beste kideekin elkartu gintzaten*].

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*BALUCHONNÉ:* poltsa edo bidezorroarekin batetik bestera etengabe darabilten presoaz esaten dena. Hitz egokia da Bakarmortuko Kronikak amaitzeko. Goizeko zazpietan, ohi bezala aurre-abisurik gabe esnatu eta ordu erdi eman zidaten gauzak biltzeko: «*vous êtes transféré*!».

## ESKLABOAK BEZALA

Gauzak biltzen, erdi lo. Oraingoan lau kutxa bete ditut. Puska batzuk, gutunak eta gauza pertsonalak aldean eramatekotan egon naiz, baina «eskoltekin moldatuko zara» esan didatenean, nahiago izan dut dena kutxetan sartu. Sagar bat, udare bat eta botila bat ur hartu ditut soilik gainean.

Gaur ez naute biluzarazi. Aurrean baitzeuden jantzi naizenean. Hala ere, komunera joan nadin ziega itxi dute. Presatuak ziren. «Eskoltak behean dira!».

Miaketa-gela/kutxa txikira eraman naute. ERISak dira. Mozorrotuak dauden arren, hona ekarri nindutenetako batzuk ezagutu ditut.

Kalapita txikia dugu. Eskumuturrak lotzen dizkidate. Eta ondoren trabak hanketan. Protesta egiten dut. Horrela dela eta kito. *Eusko Gudariak* abesten hasten naiz trabak jartzen hasten zaizkidanean. Nire ardura duen «zaindariak» txorkatiletako trabak estu jarri dizkit. Protesta egin arren, ez dit kasurik egin. Gainera, eskumuturrekoak estu daudela esan ostean, pixka bat gehiago estutu dizkit.

Gogora datorkit, bidaiarako prestatzen ari nindutenean («paketea prestatzen» beren hizkeran), edozein arazo egonez gero eskuak atzean lotuko zizkidatela mehatxu egin didala. Ostegunean atera nindutela eta ez zela inolako arazorik egon, aurpegiratu diot, jendarmeak izan zirela, beraiek baino profesionalagoak direla.

Modu horretan loturik eraman naute kartzelako administrazioaren erakusmahaira. Hankak arrastaka nabil. Umilazioa. Denak ditut begira.

Isolamenduaren amaiera agintzen duen papera erakutsi didate bertan. Hori ere ez dut sinatu, aginduaren kopia, paper berde bat, tolestu eta hartu dut ordea. Bidaia osoan eskuan eraman dut.



Banaramate. Sarrerakoan bezala irteterakoan ere *Eusko Gudariak* abestuz noa.

Lasaitu ederra hartuko zuten Naonedeko kartzelazaindari eta agintariek.

Ez dakit nora naramaten. Epaileak, kartzela berean egongo ginela eta Euskal Herrira hurbilduko gintuztela esan zidan. Bidaia Marixolekin «batera» egiteko esperantza badut. Segituan galduko dudana. Hegoaldera goaz, ez dut gurea ez den beste segiziorik ikusten.

## PIXA EGITEN

Susmatu baino luzeagoa da bidaia.

Bordelera iritsi aitzin autoei ezantza botatzeko geratu gara gasolindegi ondoko kamioi parkingean. Jendarme eta ERISek ingurua «segurtatu» dute. Ikaratuko ziren kamioilariak! Are, bat edo batek kontrabandoren bat badarama.

Pixa egitea eskatu dut. ERISek niri ez hitz egiteko agindua omen dute. Horrela kito gaude, nik agindu bera eman baitiot nire buruari.

Nitaz «arduratzen» denak, pixa egin nahi dudala diotso buruari. «Le Colis» deitzen nau, «paketea», «paketeak pixa egin nahi du, alegia».

Onartzen dute. Hobeto segurtatzen dute inguruko perimetroa. Bizitzan egin dudan pixa-erreka seguru eta zainduena. Hankak arrastaka, belardia hasten deneraino noa, ERIS zaindariak eskuburdinetara lotutako katetxoari helduta.

Berak esaten dit non egin behar dudan. Ez du katetxoa askatzen. Joko gutxi dut eskuekin, hain estu lotu dizkit!

Hasieran kosta zait, baina ondoren, bide bazterreko pixa-erreka gogoangarrienetakoa bota dut. Luzea, amaigabea.

Bitartean jendarme eta ERIS mozorrotuak adi daude, urduri, «begira egiok kamioi gidari horri!» dio batek, kamioilari batek imintzio susmagarri bat egin duela iritzita. Pareko etxekoak leihora atera dira zer gertatzen den jakin-minez, segituan ezkutatu dira hainbeste gizon armatu ikusita, izututa.

Bukatu dut.

Ea egin dudan jakin nahi izan du batek. Txakurtxoa katez bezala naukanak baietz dio buruarekin. Eskerrak egin dudala! Bestela, auskalo!

Berriro «Labezomorroen Zaborrontzira». Txandaka bete dituzte ezantza-gordagiak. Entzun diedanez bide erdia ere ez omen dugu egin. Nora ote naramate? Segi.

Bide ezagunetik goaz. Zuhaitzak ere ezagutzen ditut!

Azken lau hilabetetan Euskal Herritik hurbilen. Marixol ere hemendik pasatuko dela bururatu zait, leku berera garamatzatenez. Ikusten ari naizena ikusiko du[1].



1 Oker nengoen, bezperan atera baitzuten Naonedetik Fresnesera. Han gaua pasatu eta biharamunean abioiz eraman zuten Tolosaraino.

# Seysses-eko kaiera

(2005eko otsailaren 1etik ekainaren 7ra)

## OSTIKADATXOA

Sartu naute kartzela berrira.

Autotik ateratzeko zain gaudela «Gallastegui» jartzen duten kartoiak ikusi ditut. Poltsa gris bat ere. Nola ez! Batzuk ekarri eta bestea eraman! Sarrerako ziega-kutxan boligrafoz mezua utzi diot Irantzuri. Ikusiko du, agian.

Hanka-trabak eta eskumuturrekoak kentzen hasi zaidanean ohi bezala *Eusko Gudariak* kantatu dut. Amaitu dudanean, zomorroak ostikadatxoa eman dit, nahigabe egin duenaren disimulu keinu txatxua eginez.

Irrintzia bota dut. Harrera-bulegoetakoek zeharo harrituta begiratu naute. Nik irribarre egin diet.

Oihanean nago. Toulouse-Seysses-eko kartzela berrian.

## SALOMONEN ZAPIA

Ostera ere miaketa.

Ez oso sakona, baina bai eskularruak deus esan gabe kentzeko, beraz lapurtzeko, adina. Hemen debekatuta daude eskularruak!...Lepoan ekarri dudan *egarri ginen garaiko* Marixolen zapia debekatua dagoela esan didate ere. Tinko eta temati esaten diet ezetz. Kartzela barrura eramango dudala nirekin. Ezetz.

Burua dator. Lasaitzeko.

Bale. Objektu pertsonala dela eta ez dudala utziko.

Erakusteko eskatzen dit, ea zer tamaina duen lepoko zapiak, musuzapiarena edo...

Erakusten diot. Luzeegia omen da eta ez duela nirekin salbuespenik egingo.

Laburragoa izan balitz ea utziko lidakeen galdetu diot.

Baietz.

Bada uzteko sartzen, eta moztuko dudala ziegan.

Ezetz, sartzekotan bertan mozteko.

Ados, emateko artaziak.

Ezetz, ez dizkidala artaziak emango. Eta bertan ez badut mozten berari emateko, debekatutako beste gauzekin batera jartzeko.

Hartu du zapia, galdetu diot zein den tamaina egokia eta hortzekin zatitu dut.

Zati txikia enetzat eta bestea berak hartu nahi zuen.

Ez, ez. Jarraitu dut. Bigarren zatia. Hirugarrena. Beraz, zapia lautan moztu dut.

Buruak menpeko bati esan dio apuntatzeko hiru musuzapi ditudala orain. Gero niri esan dit errazagoa zela hasieratik *fouillean* gordetzeko eman izan banio.



Begi biribil-biribilekin begiratu naute denek zapia sakrifikatu bitartean.

Ziegan, oheratu aurretik korapiloak eginez osatu dut zapia eta lotarako lepoan bildu dut, ohi bezala.

Niretzat gordetzen ditut arbitrariotasunaren erreinuari eta bere zerbitzariei buruz otutzen zaizkidan irainak.

Zapia josiko dut ahal bezain laster.

## ARGAZKIA N. ALDIZ!

«Jarri hormaren kontra! eta eutsi honi!».

Ez. Nire izena eta kartzela zenbakia agertzen den txarteltxoa hartzeari errefusa egiten diot. Urduri daude jadanik.

Eztabaida eten du batek: «Ez gara jadanik hasiko!». Berak hartu du txarteltxoa eta burua beherantz eta begiak itxita ditudala ateratzen didate bahituz geroztiko n. argazkia. Kito.

## IDAZLEA NAIZ

Kartzelako buruek galdekatzen nauten lehen aldia da.

Ez nago isolamenduan. DPS izaten jarraitzen dut, hala ere. Konturatu naiz bai, denbora gutxiren buruan.

Lanbidea galdegiten didatenean ohikoa erantzuten diet: kazetaria, idazlea.

«Argitaratu al duzu ezer?», galdegiten didate ezezkoa espero duenaren doinuz.

«Bai».

Harrituta begiratzen naute. Begirunezko keinua: «Izan ere ez gaude ohituak liburuak argitaratu dituztenak izatera, kontrakoa baizik...».

Zer ote da kontrakoa?

## OIHANEKO LEGEAK

Bakarmortuan telebista doanekoa zen naufragoontzat. Oihanean astero ordaindu behar da. 8,5 €!

*Oihaneko lehen legea:* Telebistak astero 8,5 € balio du. Kalkulua egin daiteke urtebetea zenbat ateratzen den…

*Oihaneko 2. legea:* Telebistarekin batera, prezio berean, hozkailua dago (kartzela honetan Fagor markakoa!).

*Oihaneko 3. legea:* Ezin da hozkailua soilik alokatu.

*Oihaneko 4. legea:* Ziega batean bi preso egonez gero, biek ordaintzen dute telebistaren alokairua, 8,5 € bakoitzak.

*Oihaneko 5. legea:* Bietako batek, administrazioaren maltzurkeria zenbaterainokoa den kontuan hartu gabe, berak telebistarik nahi ez duenez ez duela ordainduko esango balu, biek baten prezioan telebista gozatuko dutelakoan, oker dago: telebista (eta hozkailu) gabeko ziega batera aldatuko dute.

*Oihaneko 6. legea:* Ez dute alokairu-kontratuaren kopiarik ematen.

*Oihaneko 7. legea:* Telebista apurtuz gero… ordaindu egin behar da.

*Oihaneko 8. legea:* Ziegara iristean telebista, tele-aldagailua eta hozkailua bertan daude jada… Ordura arte bertan eduki dituztenek utziak, beraz

erabiliak: tele-aldagailuak ez du pilarik, telebistari ezin zaizkio kateak aldatu, kate bakarra besterik ez da ikusten, hozkailuak ez du apalik...

## PUBLIKOA / PRIBATUA

Kartzela hau mistoa da (ez sexuari dagokionez, noski): presoen zaindaritza erakunde publikoen esku dago, beste guztia alegia, bazka, kantina, izarak... pribatua da.

Oharpen kritiko bat entzuten duten bakoitzean horixe azpimarratzen dute kartzelazainek: «a! gu zaintzaz soilik arduratzen gara...».

Zenbat trikimailu! Lapurrak lapurrari dio aurrea hartu!

## EZ DUT EZER

Sarreran dituzte nire gauzak guztiak.

Ez ia dut ezer:

- — Beharrezkoekin emandako poltsa: hortzetako orea eta eskuila, xaboia, xanpua, zapia, izarak...
- — Bi gutun-azal, bat zigiluduna, orri zuri batzuk...
- — Boligrafoa galdu dut! Eta gainean dudanari oso tinta gutxi geratzen zaio.
- — Telebista ezin dut ikusi, Eraikin-buruak eman dizkidan pila erabiliak agortuta daudelako.



Zazpi eta erdietan ohera. Pasta zuriak eta arrautza-irinetan pasatako *eztakitzer* jan ostean.

## DANBORRAK GAUEAN

Eraikin-buruak ohartarazi lez zaratatsua da gaua. Batez ere goizaldeko ordu bata eta erdietan. Goikoak kristoren danborrada jo dit... Ez dakit zeren kontura. Plastikozko botilarekin burdina-barretan joz aritu da. Iskanbila. Gero, hozkailuaren zaratak.

Bai, oihaneko kilker, hontz eta piztien uluen pareko.

Hamabi orduz egon naiz ohean. Behar nuen.

## ESPAZIOA

Goizean, promenadako lehengo txandan, kanpora. Ez naute miatu.

Patioa zabala da. Orain arte ezagututako kaiolen moduko berrogeita hamar edo gehiago sartzeko adina.

Poliki nabil. Oinek ez dute ohiturarik.

## JENDEA

Jendea dago. Gutxi gara goizeko txandan.

Begiekin edaten dut.

## EGUZKIA

Arratsaldeko txandan jende mordoa. Masa. Tropela. Ez dut inor bereizten. Jendetza.

Eguzkia. Patioaren erdia eguzkitan. Koska bat dago. Bertan eseri naiz. Begiak itxi. Eguzkitan.

## BABAK

Eskuineko oina minberatua dut. Oinaren gainaldean zain batek min egiten dit. Hankan gora ere. Oinazpian baba bat dut. Ezin nahi beste ibili. *Ai nire juaneteak*.

Kirol oinetakoak eskuratu bezain pronto korrika egingo dut goizeko *promenadan*.

## EUSKALDUNAK OIHANEAN

Bigarren eguneko goiza.

Itzuli erritmo biziari lotu natzaio. Txistuka entzun dut norbait. Kasurik ez. Ez da niretzat izango.

Bigarren eraikinaren paretik pasatzean berriro entzun dut txistua. Hurrengoan, ahots bat. Segi. Ondorengo itzulian, begi ertzetik ikusi dut leiho batetik keinu egiten diotela patioan dagoen bati, nire ibilbidean geldirik dagoen ile zuridun bati.

Paretik pasatzerakoan geldiarazten nau ile zuridunak. Bigarren solairuko leihoan dagoen gazte bat erakusten dit hatzaz.

Leihokoak: «Euskalduna zara?».

Nik baietz, eta ea bera ere hala den (!). Hori galdera! Euskaraz ari zait eta! Beste bat zen egin nahi nion galdera, noski: arrazoi politikoengatik gizonen aldean preso dagoen inoren berri ez dudanez, euskalduna, bai baina preso zergatik dagoen jakin nahia zegoen gaizki formulatutako galderaren atzean.

Bizitako inkomunikazioaren tamaina erakusten du honek: urtarrilaren 28an atxilotu eta kartzelaratu zuten bera! Nik otsailaren 3an jakin dut, topo egin dugulako.

Gasteiztarra da, Berrostegieta. Beste bi ere atxilotu dituzte berarekin: Arbulu eta Zubimendi. Zubimendi nesken aldean omen dago. (gero jakin dut ez dela hala). Arbulu beste eraikinean omen dago. Promenadak irauten duen ordubetea eman dugu mintzatzen, aurrez aurre. Aurrez aurre ez, goitik behera eta behetik gora baizik. Hau lepoko mina. Ohitzea izango da kontua.

Lau hilabeteren buruan lehen aldiz aurrez aurre, euskaraz, libre hizketan! Informazio ugari trukatu dugu eta arratsalderako hitzordua hartu dugu. Saiatuko naizela libururen bat igortzen... Aholkuak ematerakoan zaildutako preso baten moduan mintzo naiz...



Hizketan ari ginela inguruan nuen guztia desagertu bezala egin da.

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*YO-YO*: Leihotik leihora gauzak (jatekoa, erretzekoa,...) elkarri pasatzeko gailua. Oihal zatiak elkarri lotuz egiten da. Puntan zama bat lotu eta albokoari indarrez igortzen zaio, hark hartu eta bi ziegen arteko zubia osatuz. Horrela ziega askoren arteko lotura osa daiteke ere.

## KARTZELA-BARNEKO SAKABANAKETA

Arratsaldeko *promenada* ordurako gutxi falta denean ireki dit atea kartzelazainak:

«Bildu zure gauzak, ziega aldaketa! Bigarren Eraikinera zoaz!».

«Zergatik?».

«Ez dakit, guk esaten digutena egiten dugu».

«Ez», diotsot, «zuek esaten dizuetena esaten duzue, eta guk egin egiten dugu».

Atzo txukundu nituen puskak. Ez dira hogeita lau ordu ere pasatu. Hilero-edo ziega aldatu beharko dudala esan zidaten bai! Baina egunero! Eskerrak ez ditudala argazkiak atera.

Badakit zergatik den aldaketa, noski. Goizeko hitz mozkorraldiaren zigorra. Diskretuagoak izatea genuen. Edota droga trafikatzaile soilak. Baina ez euskaldunak. Gure droga ez da *yo-yo*etan pasatzen. Hitzetan doa. Airean. Arriskutsuegia! Doanekoa da eta.

Gauzen erdiak bilduak ditudanean dator berriro kartzelazaina:

«Ez duzu aldaketarik!».

Zergatik?

Zuzendaritzatik deitu berri diote, aldaketa bertan behera uzteko esanez. Kito.

Segituan asmatu dut arrazoia: Unai aldatuko dute. Ni ondo zaintzeko leku onean bainago, eraikinaren brankan, zaindarien talaiaren parez pare, kamera bat zuzenean leihora begira dudala.

Atera naiz patiora. Unairen leihoa itxita dago. Aldatuko zuten. Amorrua eta barne indarra nahastu zaizkit eta irribarrez nabil, patioko mugimenduak zaintzeko duten talaia aldera mespretxu eta erronkazko aho keinada ateratzen zait.

Bat-batean, leihora agertu da Unai. Esaten diot zer gertatu zaidan. Segur aski bera aldatuko dutela... Ez ziren bost minutu igaroko graduduna ziegan sartu zaionean, leihotik urrunaraziz.

Graduduna dago orain leiho itxiaren bestaldetik patioa zelatatzen. Eraman dute Unai.

Urrats sendoz, indarturik nabil, beren ahuldadearen tamainaz jabetzeak indartzen nau. Lau preso gauzkate kartzela honetan... lau kartzelatan bageunde bezala banatuta. Gure artean sakabanatuta, komunikatzeko aukerarik gabe.

Unairi igorri diodan egunkaria bueltan datorkit. Hogei metro dago eraikin batetik bestera, kartzela sistemak infernurainoko lubaki batez bananduta.

Soilik, droga eta zigarroak pasatzen dira batetik bestera. Liburuak eta egunkariak barne posta erabiliz igortzen dizkiet besteei, Parisen dagoen epailearenganainoko joan-etorria egin eta gero...

## ESPAINOLA AL ZARA?

Itzulika nabil berriro ere, baba zanpatzen. Bakartuta, jende artean. Sendo.

«Espainola al zara?», galdegin dit urrezko irribarrea duen preso batek.

«Ez», gazteleraz erantzun diot, berak egin bezala.

«Orduan, euskalduna».

«Nola dakizu?».

«Espainiarra ez den eta gazteleraz mintzo den bat: euskalduna».

## ESPAINOLA AL ZARA? (BIS)

Galdera bera egin dit beste batek.

«Ez», erantzuten diot. «Zer ba?».



«A, gazteleraz mintzatzen entzun zaitudanez...».

## IJITOA

Nire jatorria asmatu zuenak gerarazi nau:

«Eh!, amigo!».

Espainia ezagutzen du. Han kartzelan eduki dute. Hirugarren epaiketaren zain dago hemen. Jugoslaviakoa dela esan zidan.

«Nongoa?».

«Kosovokoa...», dio.

«A! albaniarra edo serbiarra?», nik

«Ijitoa».

Munduko biztanlea, orduan.

Pixka batean mintzatu gara. Azaldu diot DPSa naizela eta atzo nirekin hizketan aritu zen bat eraikinez aldatu dutela.

Eraikin honetan gustura dagoela dio. Ez du alda dezaten nahi. Beraz, elkar agurtzen dugu.

Itzulika, bere ingurutik pasatzerakoan noizean behin elkarri keinu egiten diogu.

## JANARI ERREFUSA

Orain arteko janari errefusak isolamenduan egin ditut. Modu «pribatuan».

Hau da oihanean nagoenetik lehena. Janaria banatzen duten presoek, nire errefusa jakinarazi diedanean, gaixo dauden presoen askatasuna eskatuz atean itsatsi dudan idazkia irakurri dute. Kartzelazainek ere. Ez dute deus esan idazkiaz.

Isolamenduan ere batzuek ez zuten deus esaten, beste batzuek aldiz ziega barrukoa ere kentzen zuten!

Banatzaileetariko batek ea euskalduna naizen galdegin dit, idazkian «tx» ikusi duelako. Besteak ea ETAkoa naizen.

«Horretaz akusatzen naute», diot nik zuhurki.

«Greban zaude?», kezkatzen da bat.

«Zure errejimena!», kezkatzen da bestea.

Hain zuzen ere, sendagileak nire pisua ikusirik, 72 kg., arrantxo bikoitza emateko agindu du.

Gaur kartzelako jakirik ez dudala hartuko azaltzen diet eta nire albokoei emateko nahi badute.

Kartzelazaina zain. Azkenerako, egonarria galtzen hasita presoei esan die ea beraiek hartu nahi duten giltza.

Badoaz, adore keinuak eginez.

## BADAKIT NOR ZAREN

Norberaren ziegara sartu aurretik auzokoak eta biok hizketalditxoa izan dugu.

Bera Valdemoron egona da. Katalan jatorrikoa da, dioenez. Frantsesez dotore egiten du, katalanez ez daki ordea.

Frantziari buruz gauza on asko esaten dela... baina berak nahiago dituela Espainiako kartzelak. Frantziakoak oso txarrak direla.

Isolamendu garaiko gose eta egarri greben ibilbidea kontatzen diot... eta bat-batean ezagutu nau. Eskuak loturik nituen argazki bat ikusi duela... Keinua egin du eskuekin, aurrean lotuta balitu bezala.

Zuzendu diot, eskuak atzean loturik nituela; baina bai, ni nintzela: ile motxa, bizarrik gabe eta kilo batzuk gehiagorekin.

## SUGANDILAK EGUZKITAN

Babak min izugarria egiten dit. Goiza izan arren eguzkiak izkina batean jotzen du. Hor dauden beste sugandilen ondoan jarri naiz oinazpia begiratzeko.

Albokoak eguzkira begira jarri du aurpegia. Begiak itxita. Ni berdin nago. Hirugarren bat dator. Adinekoa.

«Iguanak bezala zaudete».

Taldetxoaren lotura egin du. Hizketan hasi gara. Badakite euskalduna naizela. Hizketaldian zehar emaztea hemen daukatela esan diet, haurra... Asmatu dute noiz atxilotu ninduten... Argazkia aipatu dute.



Bata korsikar jatorrikoa da, sendoa. Hamahiru urte daramatza kartzelan. Erreboltaria da oraindik, ez du etsi. Bestea alsaziarra da. Gizon xelebrea iruditu zait. Lauzpabost gauza esan ditu, harrigarriak iruditu zaizkidanak: ikertzailea omen da, magistratuen aurka denuntzia egiteagatik dagoela hemen….

Korsikarrak arratsalderako kirol oinetakoak ekarriko dizkidala agindu dit, ea egoki ditudan. Kartzelak emandako kirol oinetakoak errefusatu nituenez, bahitu nindutenetik baserrian erabiltzen genituen eskalapoiekin nago.

Alsaziarrak talo edo krepe batzuk eta erreximenta piloa igorri dit bazkalorduan!

Beraiei ere esan diet DPSa naizela eta nirekin arituz gero agian eraikinez aldatuko dituztela. Korsikar jatorrikoak bost axola zaiola esan du. Besteari ere itxuraz ez dio eragin berezirik egin aipamenak.

Korsikar jatorrikoak esan digu bere ama ondoan dagoen kartzelako zuzendariaren etxera joan zela eta akabatuko zuela mehatxu egin ziola. Ondo-

rioz, bera zigortu dute. Etxera hurbildu beharrean urrundu egingo dute. Barruan daukaten bitartean ez duela deus egingo esan die, baina kanpora aterata guztiak akabatuko dituela. «Ez zela inor berarentzat» esan zion zuzendariari. Nolako etorria duen! Metrailadore batek bezala egiten du hitz, tai gabe. Ondo da.

Nik zailtasunak ditut ideiak modu xinplean adierazteko.

## OIHANEAN BETE-BETEAN

Zaharrenek onartu egin naute. A zer nolako pizti koadrila dagoen! Pitzadura dezente ere. Giro ona.

Gaur, lehen aldiz ibili naiz batekin itzulika. On egin dit nire erritmo eroa baino mantsoago ibiltzeak. Eskuineko oina zisko eginda dut.

Lehenago, eguzkitan, buruetariko batekin aritu naiz luzaro. Gaizkile jendea. Gizatxarrak baino nahiago ditut. Kartzelaren mailua eta gizarte itsuaren ingudearen artean zanpatutako pertsonak.

Kartzelak egin dituzte gaizkileentzat ala kartzelak daudelako daude gaizkileak?

## BUKATU DA BAKARMORTUA

Bukatu dira ordulariari begira egoten nintzen *bakarmortuko* garaiak.

— Zazpi minutu, «zortzi jauziak».
— Bost minutu, *Txori erresiñula*.
— Hamalau minutu bertsotan.
— Hamar minutu hausnarketa.

Eta hustasuna. Hutsunea. Eta betetasuna. Barnera begira. Bizirauteko. Behartuta.

Garaitu dugu!

## ZAPIAK, LEPOKOAK, TXANOAK, ESKULARRUAK

Edonon ikusten ditut zapiak, lepokoak, txanoak, eskularruak. Ikustaldietan sartzen dituzte nonbait...

Mintzakideak esan dit niri ez didatela utziko!

## GORA EUSKAL HERRIA ASKATUTA!

Egun haizetsua.

Promenadatik bueltan leihoa zabaldu dut. «Gora Euskal Herria Askatuta!» garrasi egiteko gogoa sortu zait. Entzungo ote naute Unaik edota Ibonek?

Ostegunean aldatu zuten Unai aurreko eraikinera. Gauetan ispiluarekin leihoak aztertzen aritu naiz. Iritsi berriaren presentzia adierazten duen zapirik gabeko leiho anonimo baten bila. Badakit ostiralean epaitegira eraman zituztela. Larunbata. Igandea. Asteburua pasatu da.

Kosta egiten zait komunikatzen saiatzea ere. Hemen denak aritzen dira garrasika, leihotik leihora, *yo-yo*ekin tabakoa, mezuak edota auskalo zer elkarri pasatuz. Bart aurreko bati ea euskaldunik dagoen galdegin nion...

Leihoa zabaldu dut. Haizea. Indarra hartu eta oihu sendoa bota dut. Eta segituan erantzuna! Unai da! Hortxe dago. Nire ziegako leihotik ispiluarekin ikus dezaket. Ertz-ertzean jarrita, ispilurik gabe ere!

Epaia atzeratu dutela. Aspertzen dela.

Igorri dizkiodala egunkariak...



Ibon ez duela ikusten...

Patioan ere ez?

Ez dut ulertzen, beste aldean egotekotan bera patioan dagoenean leihotik ikusi beharko lukeelako...

Ziegaz aldatuko dutela! Berriz!

Noiz?

Oraintxe!

Eta badatoz bere bila. Badaramate. Hamar minutu soilik izan ditugu. Aurrerantzean gauero egingo dut oihu.

## SUKALDE PLAKA

Solairuko auzokide batek, nire goiko auzokideari berak emango didan sukalde plaka bat eman diezaiokedan galdegin dit. Baietz erantzun diot, guztiz ulertu gabe. Zer ote?

Behe solairukoek eta lehenekoek patio garaian dugu harremana; bigarren eta hirugarrengoek berdin. Ni lehenean nago.

Afaria ekarri dutenean auzokideak plaka eman dio kartzelazainari niri emateko. Nire ziegako atea aurrean egon da plaka kartzelazainak ziega ireki eta eman didan arte.

Zain egon naiz, goikoak noiz eskatuko. Azkenean, sabaian joz deitu diot. Agertu da leihora. Ispilua erabili dugu biok. Esan diot sukalde plaka nuela berarentzat.

«A! konpontzeko?».

Nik «zer dakit!» pentsatu dut. Berari emateko eskatu didatela.

Jaitsi du poltsa bat, sartu dut barnera eta igo du *yo-yo*arekin. Jaso eta gero galdegin dit ea nork eman didan.

Ez dakidala baina galdeginen dudala.

Potentzia erregulatzeko dela esan dit... Hor aritu da lanean, kolpetxoak entzun ditut. Sukalde plaka konpontzailearen azpian bizi naiz, beraz.

Biharamunean deitu dit. Prest zeukan. Baina nik ez dut ikusi plaka eman didana, ez dakit bere izena.

Berdin diola, berak ikusi duela.

Nola egin ote du? Plaka jaitsi dit *yo-yo*arekin. Aritu da ingurukoei eman behar diodanaren izena galdetzen, zein ziegatan dagoen... Esan dit.

Afariarekin etorri diren presoei eman diet poltsa, norentzat zen esanez. Kartzelazaina begira. Eraman diote. Oihaneko bizimodua... *Bakarmortuko* paranoiatik iritsita, hau txundigarria da!

## KAPOTAK (sexu ez-harremanak)

Frantziako kartzelatan, kanpotik datozenekin sexu-harremanak izatea, larru-jotzea, debekatuta dago.

Hala ere, batzuek lortzen omen dute, beren intimitatea ahantziz edo kartzelazainen bihotz zabaltasunari esker, larrutan egitea. Emakumeak ordainduz bereziki... Baina beti debekuari aurre eginez.

Aldiz, ziegako ilunean larrutan egin daiteke: eskuarekin, gizon eta emakumeen kasuan. Beste gizon batekin gizonen kasuan; beste emakume batekin emakumeen kasuan.

Erizaindegian kapotak daude.

## KARTZELEROEN SEXUAZ (sexu ez-harremanak)

Emakume batek esnatu nau gaur.

Atea ireki, argia piztu eta mugitu naizenean, «*perfect*» esan eta joan egin da.

Kartzelazain batek esnatu nau gaur. Baina nik bere sexua nabarmendu dut, sexu desberdinen arteko harreman sexualak debekatuta daudelako.

Kartzela-administrazioak aurrera urratsa egin omen du horretan. Sexu diskriminaziorik ez kartzela-lanpostuetan.

Sexu joera beste sexuarekikoa duen pertsona presoarentzat ordea, aurrerakoitasun horrek zigorraren neurria handitzeko moduko osagairik badu.

## BILUZTEA (sexu ez-harremanak)

Biluztea berez da umiliagarria.

Berdin litzateke umiliagarria kartzelazain/*voyeurra* biluztuaren sexu berekoa ez izanda ere.



## KONTUZ NOREKIN ZABILTZAN

Gutxika, oihaneko piztiok gure antzekoekin osatzen ditugu taldeak. Zerk erakartzen gaitu? Zeren arabera biltzen gara?

Jadanik bizpahiru presorekin izan dut harremana. Nire aldetik segituan esaten diet nirekin aritzeak duen arriskua: lekualdatua izatearena, DPSa bainaiz. Eta nirekin nor mintzo den zaintzen dutela une oro.

Horrek hainbat piztia uxatzen du nigandik. Filtro hori gainditzen duena, ontzat ematen dut.

Baina badago bigarren galbahea, kartzelazainena. Konfiantza badute, aholku emango diote: «kontuz norekin zabiltzan, arazoak izan ditzakezu». Bestela, lekualdatzen dute, edo lekualdaketa azkartzen.

Bigarren galbahearen ondoren piztia gutxi gelditzen da inguruan... Ez naiz kexu. Burkideekin egon nahi dut. Hala eskatu diot epaileari, zuzendariei, une oro.

## AITA KARTZELAN

Kosovoko ijitoa hurbildu zait. Lapurreta biolentziarekin, hori egozten diote.

Kartzelan lehen aldiz ote nagoen galdetu dit.

Ohiko erantzuna eman diot: ez; alde honetan bai, ordea. Lehenago bisitari gisa ezagutu dudala, aita kartzelan ezagutu nuela, hilabete eta erdi nuenean atxilotu zuten eta.

Berak orduan lehendik ere ikusia dudan gizon lodia erakutsi dit hatzaz:

«Hura duzu nire aita, eta hau —ondoan duen mutila seinalatuz—, nire anaia da».

## ZAINTZAPEKO MUSUA 43 URTE ONDOREN

Jendarmeen zaintzapean emandako musua aipatu diet gurasoei ikustaldi laburrean. Beraiek, aita atxilotuta Soriara zeramatenean elkarri emateko aukera izan zutena gogoratu dute!

Aita Guardia Zibilen furgoian zeramaten, Martutenetik lekualdaketan. Ama atzetik zihoan taxiz. Furgoia gelditu egin zen. Taxia, atzean. Eta guardia zibilen zaintzapean elkar besarkatzeko aukera izan zuten aitak eta amak.

Arratsa emango nukeen beren kontakizuna entzuten. Minutu baino gutxiago izan dugu. 30 minutukoa da hemen ikustaldia!

## ARTALDEA

Artaldea bagina bezala goaz ikustaldira.

Gela batean egon behar dugu zain. *Beee*. Ondoren, bakoitzaren izena eta dagokigun lokutorioa iragartzen digu kartzelazain batek. Lokutoriora sartu aurretik ultramore argiaz soilik ikusten den tintaz markatzen gaituzte eskuan.

Lokutorioa erditik banatuta dago. Alde batean bisitariak, bestean presoa. Taberna bateko barraren itxura du. Debekatuak daude ordea janari eta edariak. Debekatua dago ere hormatxoaren gainean esertzea.

«Bi minutu» oihukatzen du ahots metalikoak barne bozgorailutik. Badatoz. Atea ireki. Bukatu da. Beste gela batera. Zain. Tabakoa ere debekatua dagoen arren erretzen ari dira.

Binaka aterarazten gaituzte miaketa-gelara. Katean lan egiten dutenez besteen moduko miaketa egin didate.

Bakarmortuan, sei edo zazpi nituen niretzat bakarrik. Hemen bakarra. Lasaia. Galtzontziloak guztiz kendu gabe uztea onartu du.

Miaketa bukatu eta hirugarren itxarongela batera sarrarazten gaituzte. Bertan daude zain jadanik miatuak izan direnak. Aurrera doa denbora.

Leihotik ikusten ditugu lau kartzelazain hizketan, irriz. Gu modulura eraman behar gaituzten *artzainak* dira. *Beee*. Azkenean, gutako batek kristala kolpatu du kartzelazainei deituz, haiek entzun ez dezaketen biraoa gehituz.

Badatoz. Tropelean goaz gizonen aldera. Une batez tropeletik urrundu naiz. Emakumeen eraikinaren aldera noa. Ahalik eta gehien hurbildu eta «Gora Euskal Herria Askatuta!» oihu egin dut.

Harritu egin dira artzainak, zer egin jakin gabe egon dira...

Ardi beltza naiz.



## AZKAR JOANGO ZARELA ESPERO DUT

«Azkar joango zarela espero dut», esan dit Eraikin-buruak irribarrez.

Kalera ez, noski, beste kartzela batera baizik. Urduri daude.

## ATEA PUSKATU

Lau hilabeteko kartzela-aldiaren ondoren Marixolek lehendabizikoz ikusi du aita.

Ahizpari ordea ez diote sartzen utzi. Zerrenda informatikoan ez omen zelako bere izenik agertzen.

Niganaino iritsitako zurrumurruak dio ostikada joz puskatu omen duela atea Marixolek…

Oraingoz ez dit inork esan zigortu dutenik.

Ondoren jakingo nuen gehienetan bezala kartzelan zurrumurruaren errekak dena puzten duela eta ez zuela aterik puskatu.

## ZATOZ

Ireki didate atea. Brigadierra zain dudala behean.

Zertarako den galdetu arren ez didate erantzun. Behera iristean brigadierra eraikinetik kanporantz doa, berarekin joateko agintzen dit.

Eraikinetik irteteko dauden bi ateen artean gaudela esan dit abokatua dudala zain.

Zergatik ez didazu lehenago esan?

Orain badakizu...

Abokatuak ordubete darama zain.

## LIBURUAK

Arropak sartu dira. Liburrurik ez.

Gutuna idatzi diot zuzendaritzari beraien diskriminazio kulturala, aurreiritzi jakobinoak eta arrazismo kutsua salatuz.

Lau hilabetetan 10 liburu baino ez dut eskuratu.

Kartzela bakoitzean kontu bera. Hirugarren ikustaldirako-edo lortzen dut konbentzitzea liburuak euskaraz idatziak egon arren «normalak» direla.

## JERTSEA

Marixolek Naoneden egindako jertsea iritsi da arropekin.

Bere usaina du. Gainean hartu dut. Ohean etzan naiz. Loak hartu nau!

## ELKARTASUNA BERRIRO

Auzoko batek perrexil-sorta bat eta Marixolentzako arrosa baten marrazkia igorri dizkit.

## ATE-JOKA ETA MERCI

Ireki aurretik atea jo du kartzelazain batek! Lehen aldiz!

Eman behar zidana eman eta gero, bazkaria mahai gainean nuenez, «*bon appétit*» esan dit...

Eta nik «*merci*» erantzun!

## KONTAINERRA

Ziega deitzen diote; berez haragi biziduna gordetzeko kontainerra da. Haragi-bizi gordagia.

## HITZ ETA PITZ

Arratsetan leihotik leihora aritzen dira hizketan. Hitz eta pitz.

Auzo jendetsuetako giroa dago. Oihuak, *yo-yo*ak, irriak. Bizia. Telebistak itzalita edota atze-soinu gisa, inork kasurik egin gabe, piztuta daude.

## UKABILKADAK

Haizea harrotuta zebilen. Patioko hautsa eta zaborra batetik bestera eramanez. Urduritasuna ere.



Talde batek tabakoa lapurtu dio bati. Tentsioa.

Beranduago, elkar joka hasi dira bi. Banandu dituzte. Taldean dabilenak sudurra odoletan utzi dio bakarrik dabilenari.

Astean behin omen daude horrelakoak.

## POLIGLOTA

Zenbat hizkuntza mintzatzen dudan aipatu diot ijito kosovoarrari.

Berak mintzatzen dituenen zerrenda egin dit: serbiar-kroaziarra, beren ijito hizkuntza, gaztelera, frantsesera, italiera, errusiera, albaniera... eta besteren bat ere.

Bera da ukabilka aritu dena, bestea odoletan utzi duena.

Bortxa erabiliz burututako lapurreta egiteaz akusatua dute hemen.

«Bortxa handiarekin», azpimarratzen dit.

Sinesten diot.

## KARTZELA MODERNOAK, KARTZELAZAIN ALFERRAK

Barne bozgorailu bidez ohartarazten digute noiz den gure promenada-txanda.

Lehen txanda egokitzen zaigunetan ordua baino ordu erdi lehenago inguru deitzen dute. Batzuetan, bigarren txanda egokitzen zaigula ohartarazteko ere deitzen digute. Baina, eskuharki, lehen txanda dugula esanez deitzen ez badigute badakigu bigarrena dela gurea. Azkar ikasten dira horrelakoak. Eta kartzelazainek dei bat gutxiago egiten dute.

Gaur goizean lehen txanda baino ordu erdi lehenago ez da deirik izan, beraz, bigarrena zegokigulakoan eta igande goiza izanik, lasai egon naiz ohean. Ondoren, jaiki eta lasai gosaltzeko prestatu naiz.

Zortzi eta erdietan atea ireki du kartzelazainak, ohiko «*promenade*?» galdetuz.

«Ez duzue deitu!», egin dut protesta.

«Izan ere barne bozgorailua matxuratuta dago...», desenkusatu da.

Eta beraiek alfer-alferrak direnez ezin zitezkeen ziegaz ziega ibili ohartaraziz…

Gaur itxialdiari ekiten diogunez ez nuen irteteko asmorik; aldiz, ate aurrean txukun-txukun jarri eta kartzelazainari *Eusko Gudariak* abesteko nuen asmoa zapuztu didate... Arratsaldean egin beharko dut!

## BORONDATEZKO BAKARTZEA

Duela hamabi egun atera naiz *bakarmortutik*. Oihanean ibili naiz egunotan, eta gaur, Kolektiboko beste kideekin batera, borondatezko *bakarmortuari* ekin diot: itxialdiari ekin diogu denok.

Ziegan ordu erdiz ibili naiz, sei urrats gora, sei urrats behera...

Segituan etorri zait igarotako lau hilabetetako bakarmortuko oihartzuna eta gustura kantatu ditut *Txori erresiñula* eta nik sortutako kanta-bertsoak.

> Sei urrats gora eta sei behera
> Ziega barruan itxi gera
> Kanpoan elur eta haize
> Barruan indar eta kemena

## «BEGIA» IRRIZ

Gora eta behera nabil, kantuz.

Behatze zuloan begia. Irriz. Ikuskizunaz gozatzen nonbait.

Eskuaz behatze zuloa estali dudan arte.

## ITXIALDIAN

Posta kutxa promenadarako bidean dagoenez, auzokoari eman dizkiot nire gutunak.

Promenadatik itzuleran atera etorri zait egin duela esanez.

Ondoren, beste bi preso etorri zaizkit: behatze zuloaren estalkia altxa dute, nor diren ikus dezadan atzera egin dute eta gero ateko zirrikitutik hitz egiten dugu.

Ziega kanpoaldean egunkari zahar mendia dut. Larunbata eta igandeko egunkariak ote ditudan jakin nahi zuten.

Nahi dituztenak har ditzaketela esan diet.



Kartzelazaina etorriko zen, agurtu gabe joan dira-eta.

## 2$^{e}$ JOUR

Itxialdiaren aldarrikapenekin atean ezarritako afixetan «2$^{e}$ jour» jartzen duen orritxoa gehitu dut.

## ARBONARA NOIZ

Lehortzeko zapiak eta sukalde zapiak aldatzen dabilena euskal herritarra da. Arbonarra.

Zer moduz nagoen galdegin dit eta «Arbonara noiz?».

«Ahalik eta azkarren», erantzun diot.

Bere aferaz galdetu eta Landetan bigarren epaiketa omen duela esan dit, baina bi zigorren «nahasketa» lortuz gero segituan dela kanpoan.

«Zorte on!», esan diot.

[*Itxialdian nengoela ziega miatzera etorri zitzaizkidan. Isolamenduan egon nintzenean promenadan nengoen tartea baliatzen zuten horretarako, beraz ez nuen prozedura ezagutzen. Itxialdian nengoela, Kolektiboak hala aginduta, eta nire borondatez ezin nuela atera azaldu nien. Txoko batean egongo nintzela proposatu nien xaloki. Ezin nuela ikusi zer egiten zuten erantzun zidaten. Ziegatik ateratzeko agindu zidaten, eta ateratzen ez banintzen beraiek aterako nindutela eta ez nintzela azkar batean itzuliko mehatxatu ninduten. Ez nuen mehatxua ulertu. Balekoa iruditu zitzaidan haiek ziegatik ateratzea. Joan ziren, errefuertzoekin itzuli ziren, besoetatik heldu eta ziegatik atera ninduten, baina behin aterata ez ninduten askatu, kontrakoa, besoak bihurritu eta burua makurraraziz zigor ziegetaraino eraman ninduten nire harridurarako! Bertan bultzada eta mehatxuen artean biluzarazi ninduten. Zigor ziegan edukiko ninduten bitartean, zer gerta ere, defentsa eta protesta gisa gose grebari ekitea erabaki nuen. Bost eguneko zigorra jaso nuen*].



### KARTZELAKO HIZTEGIRAKO

*MATON:* bokia, kartzelazaina. Gaztelera ezagutzen dugunok «matón» hitza, harroputz, bera baino txikiagoak mehatxatu eta zanpatzen dituena izendatzeko erabiltzen den horretatik datorrela uste izaten dugu. Ez da horrela. *Mater,* begiratu, behatutik dator. Behatzen duena da matoia. «Begia».

## OIHANEAN BERRIZ

Goizean esnatu naute, zortziak eta bederatziak artean. Zigor ziegatik atera eta modulura goizean itzuliko naizela esateko, prestatzeko gauzak.

Prest. Zain. Kanilako ur zapore txarrekoa edaten, azken bost egunotan bezala.

Bila etorri zaizkidanean ziega behatu dute. Altxa dute koltxoia oheburu aldetik. Hortxe zegoen azkazalarekin pintura kenduz irarritako «Gora ETA».

«Gorra Etea», ahoskatu du. «Ce n'est pas bien», gehitu du. Besterik gabe.

Kantari irten naiz ziegatik. Isolamendu aldeko ate urdinak ikusi ditut. *Mitard*-ekoak berdeak dira, modulukoak bezala.

Puskekin betetako gurditzarra pusarazi didate. Ahul nago gose grebagatik. Poliki egin dut bidea.

Emakumeen eraikinaren parera iristean, gelditu eta «Gora Euskal Herria Askatuta!» oihukatu dut. Unai daukaten eraikinera iristean ordea ez dut indarrik izan.

Eraikinera sartzeko koska gainditzeko metalezko plantxa ere nik jarri behar izan dut.

Lehengo modulu berean nago, lehenean, baina beste eraikinera lekualdatu naute. Ziega berria. Oraingoan ikusmira patiora. Bertan zebiltzan ezagunak agurtu ditut. Asteazkenera arte. Zigor ziegako egonaldia eta gero itxialdian jarraituko baitut ordura arte.



Tarteka leihotik patiorako hizketaldiak egin ahal izango ditut. Unaik aldiz ez du nire oihua entzungo, eta nik ez dut bere deia entzungo.

Sare eta txarrantxak ditut parez pare. Talaia urrunago eta Ikusi markako zaintza-kamera ez hain nabarmen.

## ZIEGAN KOKATZEN

Presatuak etorri zaizkit, nire gauzekin betetako plastikozko sei kutxen bila.

Ziega zikina badago, hozkailua oso zikina dago.

Kutxetako batean dauden gauzak ez dira nireak. Bestetan, nire gauzak anabasan, nahaspilan: arropak korapiloa eginda, jakiekin, idazkiekin, dena edonola bildua. Tipulen poltsa arropen artean ondo ezkutatuta aurkitu dut.

Ohiko inbentario tristea: zer falta ote den, zer apurtu duten. Oraingoan zer gehiago dudan ere: zigortuta egon naizen bitartean eman ez dizkidaten erosketak eta prentsa. Aldiz, ostiralean jaso behar nituen sagar eta laranjarik ez dut! Aranpasekin moldatu beharko gosea baretzeko.

Argazki denak tolestuta daude. Elkarren artean itsatsita. Ez dut txukuntzen hasteko indarrik orain. Mahaia, aulkia, hozkailua, armairua eta komun-zuloa garbitzen aritu naizen bitartean bitan zorabiatu naiz.

Kutxen bila etorri direnean, gradudun emakume pottoloari kexatu natzaio argazkiak tolestu dizkidatelako.

Bertatik bertara erantzun dit: «écrivez, vous qui écrivez tant!».

Nonbait ez ditu maite asko idazten duten presoak. Ezpata eta luma. Nire lumak beldurtzen ote ditu?

Bazkalordurako konturatu naiz Marixolek igorri zidan bere eskuaren marrazkia falta dela. Kartzelazain berari esan diot.

«Faitez une réclamation!», erantzun dit ezaxolati.

Bazkaria banatzen duten mutilek esan didate begiratuko dutela. Erreklamazioa egin beharko dut eta ni nengoen ziegan dagoenarekin kontaktua hartu, ea marrazkia ohe azpian dagoen. Bertan egon nintzen bitartean behin eta berriz eskatu arren ziega garbitzeko tresnarik ekarri ez zidatenez hain zegoen zikina, garbitzerakoan aurkituko zuela hara erori bazen.

Orain baditut erratz txiki bat, lurra belauniko eskobatzera behartzen duena, eta pala. Lurreko zapirik ez, ordea!

Duela hogei egun ekarri behar zizkidaten pilak ez ditut jaso... Kristalezko Ricore potea ere desagertu da... Hirugarren miaketa arte ez dira ohartu. Niri deus esan gabe kendu didate. Orain badut berriro gatza, lehendik nuena ere kendu zidaten eta. Ez dut burukorik eta ez dut aulki txukunik.

«Idazlearen» gutun luzea jasoko du bihar Eraikin-buruak!

*Écrivez, écrivez...*

A! Elurra egin du gaur.

## GRAFFITIAREN PREZIOA

Kartzelazaina ziegara etorri zait orri batekin.

Graffiti bat egin omen duzu zigor ziegan. Isuna ordaindu beharko duzu.

Oraindik koltxoirik gabe nengoela, mahuka motxetan, ohearen metalezko plantxan egin nuen bahitu gintuztenetiko hamaikagarren graffitia, azkazalarekin pintura altxatuz: «Gora ETA».

«Zenbat gehiago lapurtu behar didazue?», bota diot.

Ez dit erantzun. Ikusiko zenbatean dagoen graffitiaren salneurria errepresioaren azokan.

## AULKIA ETA BURUKOA

Aulkia eskatu dut. Aulkia ekarri didate, lehen nuen aulkitxoaren truke.

Burukoa eskatu dut. Burukoa ekarri didate.

«Merci beaucoup», esan diot kartzelazainari.

«De rien», erantzun dit!

Altzari eskasiak sortzen duen arazoa dela-eta kartzelazaina kexuka:

«Semi-pribatuan gaude hemen, badakizu!», esan dit.

A! «semi-publikoan» geundelakoan nengoen, pentsatu dut.

## KROKIS ARRISKUTSUAK



Emazteak bere kokapena azalduz krokisa igorri zidan gutun batean. Nik gauza bera egin nuen. Bion gutunak gurutzatu egin ziren epailearen bulegoan, eta handik DNATeko poliziengana desbideratu zituzten.

Abokatuaren bisita zuela esan eta kabinara iristean poliziak zituen zain. *Procès-verbal*-a ireki diote. Patioko batek esan dit ihesaldi saiotzat har zezaketela, ea nola bururatu zaigun halakorik egitea.

Itxialdian geundela etorri zitzaidan kartzelazaina bila. Abokatua zela iragarri arren, bere ustez jendarmeak nituela zain esan zidan. Eskerrak. Dena dela ez nintzen aterako.

Gaur, senideen ikustalditik atera bezain pronto «abokatua duzu» esan didate.

Banindoan abokatuen kabinarantz, harrituta. Azken unean erreakzionatu dut: «Zein abokatu da, maître...?».

«Poliziak dira».

Horixe! «Maître Condé», nirekiko.

Beranduago kartzelazainak etorri zaizkit ziegara ea poliziak ikusi nahi ez izateko zer arrazoi dudan galdezka, orri bat bete eta sinatu arazi nahi zidaten.

Ez da bertso-sorta baterako gai txarra: «Zergatik ez dituzu poliziak ikusi nahi?».

## *BONJOUR* ESANGO DIEDAN EGUNA

*«Je répondrais poliment à votre bonjour, le lendemain du jour où vous partirez de chez nous avec la ferme intention de ne pas revenir que sur invitation expresse»*. (Gure herritik inoiz gehiago ez itzultzeko asmo tinkoarekin alde egiten duzuen egunaren biharamunean, denik eta araztasun handienaz erantzungo diet zuen egun onei)

### ELKARTASUNAREN IZENAK

— Urtarrilaren 29an, senitartekoen istripuagatik Ainhoa Mugika eta Jose Luis Campos.
— Otsailaren 4an, gaixo daudenak aska ditzaten Barandalla, Agirre, Rego.
— Otsailaren 10ean, senitartekoen istripuagatik Fernando Gorria, Alberto Figeroa, Harriet Iragi.
— Otsailaren 27an, senitartekoen istripuagatik, Iñaki Arakama.



## ZER ESAN NAHI DU «GORA EUSKAL HERRIA ASKATUTA!»K?

«Quartier des femmes» delakoaren paretik igarotzeko aukera dudan bakoitzean (ikustaldirakoan eta itzuleran; sendagilearenerakoan eta itzuleran) entzungo ez duela dakidan arren biriken indar guztiz «Gora Euskal Herria Askatuta!» oihukatzen dut.

Hasieran jendartean egiten nituen mugimendu horiek, zigor ziegako egonaldiaz geroztik, eta bereziki antiterroristakoek krokisak direla eta muturra sartu dutenetik, besteengandik bereiz eramaten naute, hiru kartzelazainez inguratuta.

Badakite oihu egingo dudala, emeak dauden aldeko parera iristean eta arren bigarren modulu inguruan ere.

Ez dute beti berdin erreakzionatzen: oihukatzeko gelditu egiten naizenez, aurrera segi dezadan bultzadatxoa ematen didate batzuek; gehienek nire

oihuak eragindako iruzkinen bat egiten dute («esnatu egin nauzu!», «hurrengoan abisatu!», «bihotzekoak emango dit!»).

Gaurkoan, oihuak zer esan nahi ote duen galdegin dit batek.

«Vive le Pays Basque libre!».

## «GIZON LASAIA DA»

Isolamenduan, bakartzean, edota zigor ziegan kartzelazainek ematen dute bazka. Neurri berezia da.

Errejimen arruntean, kartzelazainek ematea edota nahi eta nahi ez gradudun bat aurrean egotea, neurri diskriminatzailea da, presoa markatzen duena.

Marixoli hasieran kartzelazainek ematen zioten. Orain ez dakit, baina atea irekiko badiote gradudunak egon behar du beti aurrean.

Niri orain hasi zaizkit graduduna aurrean dagoela bazka ematen...

Bazka zerbitzatzen duen preso batek, aldaketaz ohartuta, harridura agertu du:



«Zergatik egon behar du "buru" batek janaria ematen diogunean? Gizon lasaia da eta!».

## ABERRIA, ZIENTZIA, OSASUNA

Berriro ere odol azterketa egiteko eraman naute erizaindegira.

Oraingoan txantxa egin diot erizainari: «aberriaren alde ematen omen da odola; nik orain zientziaren alde ematen dut...».

«Ez, zure osasunagatik ematen duzu», erantzun dit lehor.

## EZ KENDU TELEBISTA!

Egunkariaren bidez jakin dut, nahiz eta gu gauzkaten kartzela honetan bertan gertatu den.

Ordaintzen ez zuela-eta telebista bat kentzera joan zen zerbitzu pribatuko enplegatu gorbataduna.

Presoak ukabilkada jo dio masailezurrean.

Egunkariak dio presoak arazo psikologikoak dituela.

Zigor ziegara eramango zuten, pastilla dosia igota.

Kartzelazainen sindikatuko ordezkaria mintzo da: «…le problème de ce type de détenus dont on ne sait pas trop quoi faire».

Ez dakitela zer egin preso «mota» horrekin... arazo psikologikoak dituztenekin, alegia.

## NAZIO MAILAKO ITXIALDIA

Itxialdi-borrokan nagoelako ez naizela ziegatik irteten jakinarazi diot kartzelazainari.

«Nazio mailan?», galdetu dit. Lehendik Parisen kartzelazain egona dela eta euskaldunak ezagutzen dituela esan dit.

Nazio mailaz ari zenean Euskal Herriari buruz ari ote zen pentsatu dut lehen unean... berak noski Frantziako «nazio mailan» ari ote ginen galdetuko zuen.

## MIXERIA

Pozik jaitsi naiz patiora.

Bart lehen aldiz prestatu nuen janaria: Txanpinoi moleta.

Aurrerantzean prestatuko ditudan janariak gogoan, zertaz hitz egin jakin ez eta horretaz aritu naiz mintzakidearekin.

Berak ordea ez du plakarik, bostetan, afaria banatzen dutenean afaltzen du, nik orain arte bezala. Ezin du plakarik erosi, hilabetea pasatzeko 50 € besterik ez baititu: telebistaren asteroko alokairua, 8,5 €; tabakoa...

Bada ura berotzeko gailua erosteko ere ez duenik. Kableak zurituz berotzen dute ura. Horregatik egoten dira batzuetan zirkuitulaburrak.

## «ZURIA AHAZTU DUZU»

Sendagilearenera eraman naute.

Jertse gorria jantzi dut. Azpian niki berdea.

Erizainak esan dit: «zuria ahaztu duzu».

## EGUNKARIAK AZPIMARRATU GABE

Egunkariak irakurtzean, ez ditut azpimarratzen eta ez dut albo oharrik idazten.

Barne postaren bidez, «pas de lettre» jarriz, Marixoli igortzen dizkiot. Azpimarratu edo nire hausnarketaren bat idatziz gero, agian ez liratekeela pasatuko iruditzen zait.

Irakurtzen dudanari buruzko nire gogoetek gure arteko harremana aberastuko lukete. Aske ginenean, sukaldean, mahaian jarrita irakurtzen genituen egunkariak, batak besteari aipamenak eginez; bakarrik egotekotan interesgarri iritzitako artikuluak markatuz, besteak egunkaria hartzean arreta jar zezan.

Orain, asko jota egunkariak koipe arrastoren bat edota tearen orbain errugabeak besterik ez daramatza.

Eta nire eskuen fereka, begien isla, pentsamenduen oihartzuna.

Urteotako elkarbizitzari esker, irakurtzen dituenean, nik zer pentsatzen dudan asma lezake.



Markarik gabe ere bion arteko zubi dira egunkariak.

### EZKONTZA OROIGARRIA

(Kartzelan ezkondu diren bi kideri)

Uraren indarrak egiten duen bezala
Borrokarenak egiten du bidea

Zuhaitzaren sustraiak lurrean bezala
Gure erroak daude herriaren baitan

Eskutik eskura
Ahotik ahora
Euskal Herria badoa
Euskal Herria badator
Askatasunera

## BEGIRADA BORROKA

Etxarterako ordua denean, ziegak banan-banan ireki eta bagoaz zezenak bagina bezala.

Goizez ordubete eta arratsaldez beste bat. Hori da ziegatik at ematen dugun denbora. Hezkuntza, kirola, lana, ikustaldia, erizaindegia edo bestelako konturen bat dutenek badute ere beste irteerarik noski, denbora gehiago pasatzen dute ziega-kontainerretik kanpo. Baina, oro har, 24 ordutatik 22 pasatzen ditugu ziega barruan.

Gradudun batzuek, ziegatik ateratzen garenean ere nork agintzen duen erakutsi beharraren beharraz, beraiek esan arte ate aurrean geldi egoteko agintzen digute.

Atea ireki, zapatak jantzi eta abiatzeko ohitura dut. Ate ondoan gelditzeko agintzen didatenean ordea, geldi egon beharrean gora eta behera ibiltzen naiz, *Eusko Gudariak* abestuz.

Lehengoan, ate aurrean egoteko agindua jaso eta gero, jadanik abiatu gintezkeela iruditu zitzaidanean, estaiko aterantz abiatu nintzen.

Kartzelazain batek oihuka, lepoko zainak lodituta, bere onetik irtenda, ate ondoan geldirik egoteko agindu zidan.

Eskuharki ez diet begiratu ere egiten kartzelazainei. Honi ordea begiak begi-ninietan iltzatu nizkion. Abiatzeko baimena eman zigutenean ere begiradaz trabeskatzen jarraitu nuen.

Ez begiratzeko horrela, esan zidan, gaitzituta.

«Zuk esan behar al didazu nola begiratu dezakedan?», ihardetsi nion.

Hika egin zidan orduan berak:

«Bada hik horrela begiratzen badidak, nik...».

«Zuk», moztu nion, «hasteko, niri zuka hitz egin behar didazu».

Bizkarra eman eta alde egin nuen.

Hor gelditu zen, ahoa bete hortz beste preso eta kartzelazain harrituen artean.

## «BONBAK JARTZEAGATIK AL ZAUDE HEMEN?»

Promenadako azken minutuak dira. Bakarrik nabil itzulika.

Izkina batean dauden bi gazteetariko batek deitu nau: «e! cousin!».

Hurbiltzen natzaie. Ondoren esango didatenez, bata aljeriarra da eta bestea marokoarra.

Bigarrenak esan dit kokaina afera batengatik dagoela hemen eta segituan: «Bonbak jartzeagatik al zaude hemen?».

Hilabete daramat kartzela honetan, hamar egunez itxialdiagatik eta zigor ziegako egonaldiagatik ez naiz patiora agertu. Hala ere, denek dakite zerbait.

«Ez, euskalduna naizelako», erantzun diot.

«Hori zer da, errumaniarra izatea bezalakoa?».

Baiona aipatu diot, baina Bukarest esan banio bezala izan da.

Elkarrizketa amaitzen ari ginela, beren jatorria baliatuz, Aljeriak bere askatasunaren alde egin zuen bezala ari garela gu esan diot aljeriar gazteari.



Zertaz ari nintzen ba ote zekien zalantza egin dut une batez. Segituan uxatu da nire zalantza; bai, bazekien, Eraikin-burua harkien semea dela esan baitit.

## «SENTITZEN DUT»

Txangotik ziegara sartzeko unean, kartzelazainak (goizean nire abizena errepikatuz esnatu nauen emakume berak), sendagilearenean ordua dudala esan dit. Ea joan nahi dudan.

Baietz esan diot, unitate psikiatrikoarekin izanda ere! Nola esan ezetz Eraikinetik kanpo haize pixka bat hartzeko aukerari, emeen auzunerantz oihu egiteko aukerari eta hizketalditxo bat izateko aukerari?

Hiru minuturen buruan bila etorriko zitzaizkidala esan dit.

Ordu eta laurdenen buruan etorri dira!

Amorratuta esan diot ez garela piztiak, begirunea zor zaigula.

Aitzaki-maitzaki hasi zait, berak ez dakiela ezer, bera ere zain egon dela...

Hurrena, bazkarekin etorri denean, «Je suis désolé pour tout à l'heure», esan dit, bazka-zerbitzarien aurrean!

## MATALAZAK

Gaur, zaildu batekin ibili naiz goiz eta arratsaldez.

Halako batean, gazte bat hurbildu zaio, larrituta, matalazak jarriko dituztela-eta.

Nik, matalazak aldatuko zizkigutela pentsatu dut, eta ideia ona iruditu zait (nahiz eta zurrumurru hutsa izan zitekeen ere, halako ugari baitago hemen: duela hamabost egun telebista-aparailuak aldatu behar omen zituzten).

Gaztea ez da aldatzeaz ari ordea, gehitzeaz baizik. Ziega bakoitzean matalaz bat gehiago jarriko dutela, bigarrena, lurrean. Orain arte bakarrik egoteko zoria izan dutenek beste batekin partekatu beharko dutela ziega.

Joan den udan mila presotaraino igo omen zen biztanleria. Orain zortziehunetan omen gaude...

Txango-kide esperientziadunak esan didanez, lasai egon gaitezke... kriminaltzat gauzkatenak bakarrik uzten gaituzte ziegetan, hori bai, hilabetean behin ziegaz aldaraziz.

## ZENBAT DENBORA?

«Zenbat denbora daramazu?», galdetu dit zailduak.

«Lau hilabete», esan diot... baina bost dira jadanik!

Txarrena pasatu dudala esan dit. Urtebetera inflexio puntua omen dago. Eta hortik aurrera oreka.

## KARTZELA MUNDUAREN ESKOLA

Kartzela eskola omena da; delinkuentzia eskola. Askotan esana eta entzuna da.

Ikustaldi aretotik itzuleran datozen adingabeen tropela ikusi eta gutarikoek irriz diote: «hara! etorkizuneko kriminalak!».

Zer irakasten dute kartzelan? Kanpoan irakasten duten gauza bera: engainua, amarrua, toleskeria, gezurra, otzantasuna, esanekotasun faltsua, zigorraren menpeko onespen behartua, eta abar luze bat.

Kanpoan gainditu gabeko ikasgaiak hobeto ikasteko *egonaldia* da kartzela. Izan ere, kartzelan dagoena ikasgairen bat huts egiteagatik baitago.

Kanpoan bezala, kartzelan ere trafikatzen da. Harrapatuz gero, zigor ziegara. Kanpoan bezala, kartzelan ere otzana izan behar da boterearekin. Egun argitan. Ezkutuan arauak hausteko. Kanpoan bezala, hemen ere botereak badaki arau hausleekin eskuzabal izaten, ezikusiaren egiten... behar denean hobeki estutzeko, menpeko bihurtzeko, salatari lanetarako errekluta ezin hobeak lortzeko.

Tolesgabetasunari, azpikeriarik gabeko erreboltari ordea, beldurra diote, birus kutsakor gaiztotzat dute. Inork egindako arau-haustea arrazoitzen badu, sistemaren akastzat joko dute. Nahiago dute, amarruz egitea, ezikusiarena egin ahal izateko, aldarrikatuz egindakoa baino.

Horrela funtzionatzen du gizarteak. Adibidez, zergak ez ordaintzeko amarruak egitea onargarri izan daiteke. Zerga horiek berak ez ordaintzeko aldarrikapen arrazoitua aldiz, zigortu egiten da, gogor, etsenplu emateko.



## DISPERTSIORIK EZ!

Ikustaldiaren biharamuna.

Goizaldeko lauretatik dantzan zebiltzan semea eta arrebarekin oren erdi eskas besterik ez. Istripu berri baten berri izan dut. Sakabanaketaren aurka protesta egitea erabaki dut.

Oihuka atera naiz ziegatik txangora, eta oihuka itzuli naiz. Nahiko lotsati, hala ere. *Bakarmortuko* 20 minutuko saioekin konparatzerik ez. Egia da ere jendartean 3 minutuk eragin handiagoa dutela.

Itzuleran «txostena» (partea, *raport*-a) dudala ohartarazi dit kartzelazainak.

Kartzelazainak dardarka jartzen ditu oihu txikienak. Oihua dute beren amesgaiztoaren eragiletzat: mutina!

Gertakariari buruz galdekatzeko deitu naute. Nire ekimena arrazoitzeko esaterik ba ote dudan. Eman dizkiet arrazoiak: bidaia luzea ikustaldi laburrerako, arriskua, istripuak.

Nola ez, kartzelazainek ez dute zerikusirik istripuekin, ezta ikustaldien iraupenarekin, ez beste ezerekin. Haiek arautegia aplikatzen dute.

Beren egoera uler dezadan adibide bat jarri nahi izan dit gradudunak:

«Pentsa zuk presoak Euskal Herriratzearen alde egin duzun moduan besteak hasten badira... —ez daki zer esan— Iraken alde oihuka!!» —aurkitu du!.

## MAILA JAITSI

Presoek, preso zailduek gutxiago, ez dute kartzelazainekiko begirunerik.

Kartzelazain omen da azken aukera. Polizia, jendarme, CRS, zinpeko izaten saiatu, eta denetan ezezkoa jaso ondoren, kartzelazain izatea da gelditzen zaien aukera bakarra.

«Beraz, haiekin hitz egiterakoan maila jaitsi egin behar da...», esan dit zaildu batek.

## KENDU AFIXA

Begitan hartuta naukan kartzelazain eme txikia etorri zait erizaindegira laguntzera.

Gradudunа da. Mugimendu guztiak gradudun batek zaindurik egiten ditut. Kartzela blokatzen dute batetik bestera naramaten bakoitzean, Bakarmortuan egiten zuten bezala.

Atean dudan afixa ikusi du. Ez du irakurri. Bost axola zaio. Ez dio xingola belzdun ikurrinari erreparatu.

«Afixa kentzeko esan nizun».

«Kendu nuen. Hau beste bat da».

«Bada ken ezazu».

«Kenduko dut, bai, arratsean».

Gauza bera esaten ote die atean emakume biluzidun argazkiak jartzen dituztenei?

## GORA EUSKAL HERRIA ASKATUTA!

Bagoaz oinez, *konboian*. Ni eta hiru bizkartzain.

Iritsi gara emakumeen modulutik hurbilen dagoen ibilbideko gunera. Ohi bezala «Gora Euskal Herria Askatuta!» oihukatu dut indar guztiz.

Kartzelazain txikiak ez du maite nire oihua. Berez ez du nigandik datorren deus maite... ez ateko afixarik, ez oihurik, ez eta zenbat idazten dudan ere (bera izan zen kexatu nintzenean hainbeste idazten nuenez idazteko esan zidana).

«J'en ai marre!», bota du, «aspertu naiz! Itzuleran oihu egiten baduzu, partea jarriko dizut», mehatxatu nau.

Azkar bukatu dugu azal-medikuarenekoa (bazirudien sartu aitzin bazekiela zer nuen zorbera, krema mota piloa emateko agindu dit eta bazkaltzera joan da... nabaria zen berak zuena: presa).

Itzuleran, iritsi gara emazteen auzunetik hurbilen dagoen puntura. Indar guztiz oihukatu dut, «Gora Euskal Herria Askatuta!».

Ez du deus esan, gradudun txikiak. Iritsiko da partea, ordea. Bigarrena, mehatxatu nauenean berak ere bazekienez: «jadanik bat baduzu, ezta?».



Ea zer prezio jartzen dioten kartzela honetako faxista-kumeek gure herriaren aldeko oihuari.

## ESKOLARAKO ARGIBIDE AFIXA

Patioan kontatu didate: duela hogeiren bat urte, kartzela batean honoko idazkia jarri zuten: «IRAKURTZEN ETA IDAZTEN EZ DAKITENAK HONA SARTU».

## LANBIDEA

Azken hogeita lau ordutan bi kartzelazainek aipatu didate beraiena lanbidea dela.

Kartzelazainek kontzientzia-arazoak izan ohi dituzte. Edozein pertsonak dituenez gain, beren zereginak arazo latzak sortzen dizkie.

Egiten dutenaz kontzientzia pixka bat dutenek bederen beren buruari etengabe errepikatzen diote lana besterik ez dela egiten dutena, inork egin beharrekoa.

Ikustalditik bueltan biluzarazi nauenak, latexeko eskularruak janzten zituen bitartean «c'est un mètier» bota dit alai. Miatzeaz ari zen.

Gaur goizean atea ireki didan kartzelazain emeak, «monsieur, monsieur» deitu nau, eta erantzun ez dudanez, «faitez-moi un signe» eskatu dit.

Umore txartuta galdegin diot ea bera izan den goizeko seietan esnatu nauena.

Ez, noski, ez da bera izan. Beste bat da beti «erruduna». Eta gero desenkusa moduan: «je fais mon mètier», «nire lana egiten dut, ez besterik».

## TXISTU EGITERIK EZ

Buruhauste latza dute kartzelazainek ikustaldira eramaten nauten bakoitzean.

Lehen egunetan tropelean eraman ninduten. Geroztik kontsigna jaso dute eta modulutik kanpoko bidea gradudun batek eta bi kartzelazainek zainduta egiten dut. Dena blokatzen dute. Prozedura ondo olioztatu gabe dute oraindik, ordea.

Ikustaldia dugun guztiok, hogeita lau, banan-banan deitu eta behe solairuko itxarongela batean sartzen gaituzte. Beranduago niri ez beste denei irteteko agintzen diete. Bakarrik uzten naute. Tropelean daramatzate ikustaldien aretoraino. Ondoren eramango naute ni, ondo zainduta... berriro ere haiekin itxarongela batean sartzeko!

Bakarrik nagoen bitartean, ohitura dudanez, kantari hasten naiz... *Txori erresiñula* bukatu bitartean bost minutu inguru igaroko dira. Etorri zaizkit bila. Hala ere, oraindik zain egon behar dut zentroan. Eraikin modernoa da, sabaia oso gora dago. Txistuka hasi naiz. Alai. Gogoz, gustura. Oihartzun ederra dago.

«Albisu!, hemen ez da txistu egiten!», agindu dit kartzelazainak.

Banekien ez dutela bizi-pozik. Isildu egin naiz. Estatus politikoaren aldarrikapen zerrendan ez da agertzen txistu egiteko eskubidearena.

Puzkarrik botatzeko eskubiderik ba ote dagoen galdetuko nioke gustura. Ez du merezi, ez baitute umorerik.

Isildu egin naiz, berriro ere txistu egiteko gogoa egingo zaidan arte.

## IDAZTEA, IGERI EGITEA

Idaztea igeri egitea bezalakoa da niretzat.

Kartzelan bizirauteko, ur gainean etzan eta ur korronteak askatasunaren lur ertzera eraman gaitzan itxaron daiteke.

Nik nahiago dut igeri egitea, egunez egun askatasunerantz ahalegina egitea.

Idaztea igeri egitea da, Marixolekin batera eskutik helduta askatasunerantz igeri egitea. Gure semearekin batera igeri egitea. Bizitzea.

## NAUKATE

Hona ekarri ninduten.

Hemen naukate.

### POSTA-KONTROLA

Ez da trufa
gure gutunekin egiten ari direna.
Gure gutunekin egiten ari direna
krudelkeria da.

Hala ere

gauero
maitasun hitz eztiek
higanako
bidea aurkitzen diten
txarrantxa, horma, burdina eta sare artetik.
Txarrantxa, horma, burdina eta sare artetik
niganako
bidea aurkitzen diten
maitasun hitz eztiek
gauero



## AHAZTU EGIN ZAITUT

Gaur dagokit astean behineko liburutegiko txanda.

Itzuli behar ditudan komikiak ziegatik hartu eta segituan jaisten saiatu naiz. Kartzelazainak ez dit utzi ordea. Etorriko dela nire bila.

Ordu erdiren buruan deitu dut interfonotik.

Bazkalordua dela ia, berandu dela liburutegira joatekoa.

Bazka banatzen azaldu da bila etorriko zitzaidala esan didan kartzelazaina:

«Ahaztu egin zaitut».

Egia esan du. Gutxiespen irain krudelenaren zapore mingotsa duen egia. Deus ez garenaren aitorpena.

**DOLUA**

Juan Jose Urrutia euskal herritarra hil da Uruguayn.

Atzerriko samina. Urrutiko mina. Min urria. Urritua. Itxialdia eta bazka errefusa egin dut. Dolua.

## ATEA IREKITA

Atea irekita utzi didate jantzi bitartean.

Irten, eta zaindaririk ez pasabidean.

Beraz, aldean zaindaririk gabe jaitsi naiz gradudunaren bulegoraino.

Bukatutakoan, nire kabuz, laguntzarik gabe egin dut ere ziegarainoko itzulerako bidea.

## EUSKARA DEBEKATUA

«Agian debekatua dago euskaraz oihu egitea», esan dit intzidente txostena betetzeko kargua duen kartzelazain gradudunak.

Arautegian ez dudala halakorik irakurri ihardetsi diot.

Aurrekoan, emazteen auzunetik igarotzean «Gora Euskal Herria Askatuta!» oihu egiterakoan itzulpena eskatu zidana da.

Berak itzulpena eskatu eta nazkatuta zegoela esan zidan gradudun eme potoloak *raport-a* jarri.

### ELKARTASUNAREN IZENAK

Mikel Zubimendi, Aingeru Arrospide, Bautista Barandalla, Jon Agirre, Juan Jose Rego.

## GALTZETAN PIXA EGINDA

Galtzetan pixa eginda, aurpegia hanpatuta, bi kartzelazainek besoetatik gogor helduz, hankak erdi arrastaka ekarri dute gizona.

Inguruan kartzelazain multzoa, hizketan, irriz.

Gu geunden itxarongelan utzi dute itxita, gu handik atera gaituztenean.

### ZABORTEGIA

«Kartzela da jendartean traba egiten dutenentzako proiektu sozioekonomiko zehatz baten zabortegia: horregatik kartzela, nagusiki, jende txiroz beteta dago»

*Xose Tarrío (fies) (Egunkarian irakurrita)*



## KARTZELA-ZENBAKIAK GARA

Erizainak, nirekikoak eten eta telefono deia erantzun du:

«Je suis avec un détenu».

«Avec une personne», esan diot eskegi duenean.

Berak, «ez, kartzelazaindari batekin ari bainintzen...».

Ez zait orduan bururatu, baina aski zuen «avec un patient» esatea.

Nahiz eta kartzela kanpoko zerbitzua izan, erizaindegia kartzela-sistemaren baitan dago. Gure mediku-txostenak ez dituzte izen-abizenen arabera gordetzen, kartzela-zenbakien arabera baizik.

## «ZERGATIK PORT BOU-RA?»

Euskal militanteak Espainiar poliziaren eskuetan uzteko Kataluniako mugaraino eramaten. Nahiz eta horretarako Atlantikotik Mediterraneorainoko bidea egin behar duten.

Ohiturik gauzkate. Senide eta lagunek ere Kantauri itsasotik Mediterraneorainoko bidea egin behar dute, Pirinioen punta batetik bestera.

Zori ona izanez gero, polizia espainiarrek ez badute atxilotzen, itzulerako bidea senitartekoen babesean egingo du gose grebak ahuldutako euskal militanteak.

Patioan, Ile de Ré, Port Bou eta Euskal Herria geografikoki kokatzen dakien batek galdetu dit:

«Zergatik Port Bou-ra?».

## «J'AI FOUILLÉ VOTRE CELLULE»

Txangotik itzuleran kartzelazain bizar-guria, jantzi eta zapata berriekin zain daukat ziega irekitzeko.

«Ziega miatu dizut», esan dit.

Harritu nau. «Esatera behartuta al zaude?», galdegin diot.

«Ez», irribarre egin du, «baina konturatuko zinen, dena dela».

Bai. Lurrean bota arrastoak, ohea deseginda, arropak mugituta...

[*Kolektiboan, borrokaldiaren urrats berri gisa gose greba egitea erabaki genuen*].

## BON APPÉTIT (gose greba 1)

Hasi dugu gose greba.

Kartzelazain batzuentzat izurria banu bezala da, azkar ixten didate atea. Beste batzuek ordea zalantzan jartzen dute greban nagoenik:

«Vous faites vraiment la grève?»

Hirugarren egunean, batek, zabarkeriaz ala gaiztakeriaz, atea ixterakoan:

«Bon appétit!».

## ETA-KOA EDO GAL-EKOA? (gose greba 2)

Bosgarren egunean, Kolektiboaren grebaren eta aldarrikapenen berri ematen duen afixarekin atera naiz patiora.

Denetarik jaso dut: axolagabekeria, elkartasuna, jakin-mina, iruzkin mingarriak.... Kalean jasotzen diren moduan.

Egonaldia amaitzera nindoala, atzetik ahots batek «zenbat hil dituzu?» galdetu dit.

Ondoren, aurrean jarri zait eta begietara begiratuz galdegin dit:

«Zer zara, euskalduna, ETAkoa ala GALekoa?».

Nik ere begietara begiratuz erantzun diot:

«Euskalduna naiz».

Erantzuna ontzat emanez poz antzean aldendu da bere oniritzia nuela jakinaraziz ingurukoei:

«Il est basque, il peut rester».



## OIHUENGATIK EPAIKETA (gose greba 3)

Zazpigarren egunean izan dut «epaiketa».

Zigor ziegarako «epaiketa» denean ziegako gauza guztiak bilduta joan behar da isolamendu eta zigor ziega moduluraino, zigortuz gero puska guztiak bertan daudelako jada. Hileroko ziega-aldaketa egokitzen zitzaidanez, nahitaez bildu behar nuen ziega.

Gurditxoari pusaka egin dut bidea. Bidean, kartzelazain batek galdegin dit ea nire borondatez nindoan. Beste kartzelazain bati esan dio euskaldunek horrela egiten dutela Fresnesen.

Metro eta erdi bider bi metro neurtzen duen gelaxkan sartu gaituzte epaituko gaituzten gure moduluko bostak. Laster biziatu da eguratsa.

Akusazioak:

— Bik ez zioten aski azkar erantzun *promenada* amaierako aginduari.
— Beste biri, beren arteko borrokaldi batengatik egin zieten txostena.
— Ni bitan oihu egiteagatik epaitzen naute.

Bi ordu eta erdiz eduki gaituzte han sartuta, epaiketa-antzerkiaren zain.

Urduritasuna. Epaiketan zer eta nola esan. Eskuak dardarka ditu batek. Beste bat txokora begira jarri eta errezoka hasi da...

Sartuko ote dute norbait? («Sartu», zigor ziegara alegia). Kezka, beldurra. Zigor ziega guztiak beteta omen daude, «blindatuta» omen dago zigor modulua. Besteak nire aurretik pasatuko dira. Azkena naiz ni.

*Epaiketa* ostean berriro gelaxkara ekartzen dute *epaitua*:

- — Promenada amaierako deiari muzin egin zietenek datozen sei hiletan zigorrik jasotzen ez badute bete beharrik gabeko zortzi egunetako zigorra jaso dute.
- — Borrokalariek berdin, zortzina, bete beharrik gabe (Kartzelazaina izan balitz kolpatua 45 eguneko zigorra bete beharko lukete!).
- — Niri, oihu bakoitzagatik («Non à la dispersion, les prisonniers basques au Pays Basque» eta «Gora Euskal Herria askatuta!») hamabost egun ezarri didate. Nirekin ere eskuzabalak izan dira ordea (edo egia da zigor ziega guztiak beteta daudela…), bi zigorrak nahastu dituzte, hamabost eguneko zigor bakarrean utziz, eta datozen sei hiletan deus ez badut egiten ez ditut beteko.

Harrezkeroztik, zorionez, ez da beste istripurik egon.

Zigor modulutik itzuleran, gurditxoa pusatuz emazteen modulu aurretik pasatzerakoan, entzuten ez dituen oihuen ordez, gelditu eta ukabila altxatu dut, ahapeka «maite haut» esanez.

Xehatuta iritsi naiz ziega berrira. Ziega antolatzen hasi aurretik atseden hartu dut.

## AFIXA ERREKISATZERA (gose greba 4)

Hamabigarren egunean, berriro irten naiz afixarekin patiora.

Oraingoan, zutabean bermatuta egon naizen bitartean kartzelazainak hurbildu zaizkit eskuetan zer ote nuen begiratzera.

Ziegara itzulita afixak debekaturik daudela esanez etorri zaizkit, emateko.

Ohean etzanda, ez dakidala non dagoen esan diet... Horman ditudan beste afixei begiratuta alde egin dute.

Etorriko dira, noski.

## GREBA AMAIERA (gose greba 5)

Greba amaitu dugunean, bazka-mutilak poztu egin dira, beste presoak ere, baita kartzelazainak ere! Ni ere bai.

Kartzela-buruak jakin-minez daude: nik bultzatu ote dudan borrokaldia jakin nahi dute eta bestela nola izan dudan ekimenaren berri.

## «PUZTU EGITEN HAIZ»

Aurrezki kutxen lapurretengatik preso dagoen batek esan dit, kartzelazainen aurrean igarotzean tente jartzen naizela, puztu bezala.

Eta hori ez dutela maite.

## SARTU-IRTENAK

Laster askatuko dute bat, baina kartzelako atetik aterata ere ez omen da lasai egongo.

Beste batek dio, etxera iritsi arte, Espainiara pasatu arte, ez dela lasaituko.



Ondokoak kontatzen du nola zigorra bete ostean irten zenean atarian jendarmeak zain zituela, ordura arte jakinarazi ez zioten akusazio berri batekin berriro sarrarazteko.

Azken orduko faxak.

## ARAUA ETA SALBUESPENA

Ez didate garrasi egiten uzten, denek gauza bera egingo balute gobernaezina litzatekeelakoan: «Denek egingo balute?! Adibidez, Iraken alde?».

Ez didate uzten beste euskal presoei egunkariak barne postaz helarazten. «Denek egingo balute?!» diote...

Baina, inork egin al du oihu Iraken alde? Saiatu al da inor beste preso bati egunkariak barne postaz igortzen?

Araua eta salbuespena. Biak ditugu guretzat. Biak gure aurka erabiltzeko.

## XANTAIA-SISTEMA

Frantziako justizia administrazioan, kartzela prebentiboa polizien torturaren eraldaketa da.

Lehen, 48 ordutan ebatzi behar zuten atxilotua kartzelaratu edo ez. Ikerketa azkartzeko bortxa-metodoak erabiliz.

Orain, poliziek ez dute presarik, lasai lan egin dezakete. Badaezpadako kartzelaratzeak aski denbora tarte ematen die. Presoa bere minetan egosten den artean instrukzioak berez egiten du aurrera, bestelako ikerketarik gabe.

Orduan hasten da epaile eta polizien «ikerketa», xantaia-jokoa: «zu izan zarela onartzen baduzu, emaztea askatuko dut». «Zu izan zarela onartzen baduzu, zure etxetik hurbil dagoen kartzelara eramango zaitut». «Zure konplizeen izenak ematen badizkidazu...».

Justizia hitzaz mozorrotzen den sistema hau giza borondatea zanpatzen aditua da: «Nik nahi dudana ematen badidazu, zuzena dena egingo dut». «Zuk egin bidegabekeria zuzentzeko nik zurekin gauza bera egingo dut, zure hurbilekoak sufriaraziz... ».

## KOMUNIKABIDEAK

Komunikabideen aroan bizi gara. Telefono mugikorrak: edonon gaudela ahotsa eta irudia urrunera eramaten dutenak. Internet: edonolako informazioa eskura jartzen duena. Teknologia berriak. Nanoteknologia. Martitzeko argazkiak. Urrunagokoak ere.

Hemen, telebista aloka dezake presoak. 10 kate ditu. Ez berak hautatuak. Bat alemanez. Irratia ere izan dezake, lauzpabost eredu desberdinen artean hautatu eta gero. Egunkariak jaso ditzake, harpidetzaz, kantinan erosiz. Beste guztia debekatua dago. Leku askotan, ordenagailua ere.

Auzokoarekin hitz egiteko, ispilua leihora ateratzen dugu: ahotsa eta irudia. Barreei irudia jarriz. *Ispiluzketa*.

Leihotik leihora, izara edo arropa zatiekin egindako *yo-yo*en bidez, tabakoa, egunkariak, jakiak trukatzen dituzte presoek. Baita lauzpabost ziegaren distantziara dauden leihoen artean. Distantzia handiegia denean, bi *yo-yo* kateatzea lortu behar dute. Bakoitzak bere aldetik jaurtitzen du oihalezko soka korapilodun baten muturrean lotutako ur botila erdi betea, ahalik eta urru-

tien irits dadin itzuliak eraginez. Kateatzea da helburua. Bi sokak nahastuz gero, kontu handiz arrantzatu behar du bietako batek. Egonarri handia behar da. Kideak igorri behar duenaren behar handia ere. Edota asperdura sakona. Arratsero luze irauten duen dantza eta mugimendua da.

Gauez, oihan honetako piztia bakoitzak badu ere bere irrintzia, bere oihua, bere-berea duen ahoskatzeko modua, doinua.

Askotan, ispilurik gabe, *yo-yo*rik gabe, hitz hutsen laguntza soilarekin, norberaren desesperazioa gordetzen duten bakarrizketak entzuten dira. Hurkoak entzun, ulertu eta erantzuten diola uste du bakoitzak, hizketan jarraituz, bestea entzuten dagoelakoan.

Auzokoa deika.

Emadazu zigarro bildu bat.

Ez dut erretzen.

Zigarro-orri bat.

Ez dut erretzen.

Kaferik duzu? Azukrerik? Terik? Emadazu zerbait.



## BIZIRIK ALA HILIK

Berandu da. Laster etorriko da kartzelazaina.

Argia piztu eta erruleta bati bezala eragingo dio behatxuloko estalkiari. Behatu ere egin gabe. Badaki presoa bertan dagoela. Bizirik ala hilik. Baina hor dago.

Hilik badago, biharamunean jakingo dute, bizirik ote dagoen jakiteko esnatu behar dutela esanez.

Bizirik badago, esna-esna dago orain. Kartzelazainak zaintze erronda gupidagabean aurrera egin du, bizidun honen biraoa entzun gabe.

## «ZER DA ETA?»

Gose greba dela-eta ohean etzanda nago. Leiho irekitik bi preso hizketan entzun ditut.

«Zer da ETA?», galdegin du batek.

«Beren eskualdearen independentziaren alde borrokatzen dira, Euskal Herriaren alde», erantzun dio besteak.

Adorea eman dit.

## NIRE GORPUTZA

Duela hiru egun amaitu dugu greba.

Grebaren artatzerako hitzordura deitu nau sendagileak.

66,5 kg. ditut, tentsioa baxua.

Zerbait esan beharko zuen eta halaxe bota dit, nire gorpuzkera horrelakoa dela: garaia, fina eta grebetara ohitutakoa.

Duela sei hilabete 20 kg. gehiago nituela esan diot, eta ordura arte ez nuela sekula gose grebarik egin. Beraz, nire oraingo gorpuzkera eta «ohitura» oso-osorik Frantziako Kartzela-Administrazioari zor diodala.

**HIRE**

Lainoak higana
Euriak higana
Hire
hutsunea betetzen zeramanat eguna

Dantzan besarkatu dinat gorputza
Emadan eskua laztana
Malkotan noan higana

## BI SOSETAKO BORROKA

Bat-bateko iskanbila patioan.

Bi preso elkar mutur joka. Denen artean txikienak izango dira. Harri txirbilaren aldean ari dira. Oinen dantza, hautsa eta zarata. Arnasestuka.

Gainontzekoak, zirkulu erdia osatuz begira, adore emanez daude, bien alde berdin, borrokaren alde baitaude, ikuskizunaren alde. Borrokaldia eteten saiatu den bati, heldu batek, irribarre alaiez besoak zabaldu eta bidea moztu dio. Bera da arbitroa eta odola nahi du.

Leihoetako batekin hizketan ari nintzen hasi direnean. Leihokoari begiratu diot, arbitro odolzaleari, gazteei... «ez al du inork geratuko borrokaldia?».

Beste patio-txandan ijitoen patriarkak lehen muturrekoen ondoren eteten zituen borrokak. Hemen ez dago halakorik. Kartzelazainak gustura egongo dira talaiatik ikuskizunari begira.

Azkenean, zerbait esan dute bozgorailutik.

Amaitu da borroka.

Ezagun bati aipatu diot harrituta nengoela inork ez duelako borrokaldia eten.

«Bi sosetako borroka izan da-eta!», esan dit. Goizetik zegoela iragarrita, jakinarazita.

Gose grebaz geroztik indarrak guztiz berreskuratu gabe, ahul nago. Baina ez banengo, sartuko al nintzateke tartean?

## STAR

Ikustaldi ondorengo miaketa umiliagarria. Ahoa irekitzearen garaiak amaitu badira ere.



Ohi bezala, gainekoa miatu ostean eta galtzak jaisten hasi aurretik nikia hartu dut, janzteko asmoz.

Gaurkoa voyeurra da nonbait, biluzik ikusi nahi nau.

«Star bat izatearen ordaina da», bota dit gaizto, eta galtzak ez ezik, galtzontziloak ere eskutan hartu eta eskuztatu dizkit.

## GOSARIA PATIOAN

Lehen txandako batzuek gosaltzeko denborarik hartu gabe irteten dira.

Patio ordua aurrera doan heinean leihoetara agertzen diren bigarren txandakoekin edota ziegan gelditu diren ziega-kide eta txanda-kideekin hitz egiten egoten dira.

Batzuetan, kafea egiten diete, ur botila batean sartu eta ziegak eta patioaren artean dagoen txarrantxadun hesia gaindituz helarazten diete.

Patioan gosaltzen dute horrela.

## «DE LA PART DU PAYS BASQUE»

Orain nik eskaintzen diet elkartasuna edota laguntza iritsi berriei.

Afera ilun batengatik kartzelaratu duten batekin nabil batzuetan. Bera hurbildu zitzaidan. Greban geundeneko afixari esker jakin zuen euskalduna naizela. Ezagutzen omen ditu euskaldunak.

Orriak eta zigiluak eskatu dizkit.

Kartzelazain baten bidez helarazi dizkiot.

Kartzelazainak ziega ireki eta ematerakoan «De la part du Pays Basque», esan dio.

## VICTOR HUGO EUSKARAZ

Debekatua dugu liburuak kanpotik jasotzea. Hala ere, gu baino lehen hemen eduki zuten euskal presoak lortu zuen baimena. Eskaera berria egin dut, liburuen zerrendarekin: nobelak, saioak,...

Eraikin-buruaren ordezko lanetan ari den gradudun batek deitu nau liburuen kontuaz aritzeko. Dei batzuk egin ditu, arazoa konpondu nahian, itxuraz. Zuzendaritzaren baimena behar dela esan dit.

Horrexegatik doa zuzendaritzaren izenean eskuetan duzun oharra..., pentsatu dut nirekiko.

Faxista txiki bat da aurrean dudan gradudun, Chauvin-kume bat. Sistemaren partaide sentitzen da, bera da etxarterako ziegak irekitzean ate aurrean formazioan egoteko agintzen diguna.

Okerrena da tertulia literarioa maite duela. Birgizarteratu nahi nau, nonbait. Ai.

«Konprenitu behar dut ez dutela itzultzailerik liburu horietan jartzen duena jakiteko».

Liburu arruntak direla argitu diot. Liburutegietan erosten direnak.

Ez du ulertzen (Ez da esateko modua, benetan ez duela ulertzen!), ezin du ulertu munduan frantsesa ez den beste hizkuntzaren batean ere liburuak idatzi, argitaratu eta irakur daitezkeenik (eta hori gertatzea ez dela desbideratze sozial baten ondorioz!).

Badakizu —argitu nahi izan dit bere pentsamenduaren mamia, ulertzeko zailtasunak ditudala ohartu baita—, «mouvance» politikoak daude, eta horien txostenetan batek daki zer dagoen.

Li-bu-ru a-rrun-tak direla errepikatu diot; liburuek ez dutela hiltzen, gehitu diot, gaizto. Eta talde politikoren baten liburukia jasota ere niretzat soilik izango litzatekeela ohartarazten diot: ez baitago euskara ulertzen duen beste inor, ezingo nukeela propaganda askorik egin...

Ni naiz orain bera birgizarteratu nahi duena:

«Eta Victor Hugoren liburu bat euskaraz jasoko banu?», bota diot amua.

Begiak argitu zaizkio, kaskezurreko leize hutsean duen ilar bakarra ernatu bezala egin zaio, frekuentzia baxuko bibrazioak badira ere, zerbait igorri du: srrrr! klin! klon! klan! egin dio garunaren ordez duen ilartxoak:

«A! bai! hori bai!».

Begira geratu natzaio. Hitzik esan gabe.

«Sutala da, ezta?» bota dit, hizketan jarraitzeko gogoz.



Amaitutzat eman dut bilera, lan asko dudala esan diot eta hurrengo batean jarraituko genuela zintzilik gelditutako gainontzeko eskaerekin…

## KORRIKA

Kirol oinetakoak jaso ditut azkenean eta korrika egin dut lehen aldiz. Orain arte baserriko eskalapoiak besterik ez ditut izan.

Korrika egin asmo dudala esan diot goizeko txango-kideari.

«Horrela jantzita egiten al duzue korrika euskaldunek?», bota dit.

Adarjotze kontuetan ere herdoilduta nago nonbait, jarri dudan aurpegia ikusita adarjotzea zela argitu beharrean sentitu baita. Nire jantziak ez zaizkio egokiak iruditu, itxuraz.

Hurrengorako anorak bat utziko didala, baduela erabiltzen ez duen bat.

Euskal Herrian Korrika bukatu da. Eta ni sei hilabeteren buruan hasi naiz korrika. 20 minutuz egin dut. Hanketako beruna urtzen hasteko adina. Birikak txukun. Sudurrak itxita.

Hesiaren mugetan barrena ibili naiz korrika, Euskal Herriko mugetan barrena ibiltzen diren bezala... Nik hemengo mugetatik kanpo egin nahi nuke korrika!

## SEYSSESEKO KOLEKTIBOAREN ORDEZKARI

Kartzela-Buruak deitu nau. Aurrean du Kolektiboaren ordezkari gisa idatzi diodan oharra. Kartzelako Zuzendariari idatzi nion, euskarazko liburuak jaso ditzagun baimena eman dezala eskatuz.

Edukazioz idatzia dagoela dio, eta hala da, egia bada ere frantsesak hain maite dituen *politesse* formula hipokritak alde batera utzi eta «merci» soil batez bukatu nuela idazkia. Kultur desberdintasuna agerian uzteko-edo.

Gutunaren mamiari heldu beharrean, idatziaren sinadurari heldu dio. Urduritu zait, haserre dago:

«Preso politikoa?», ordenagailuan begiratzeko keinua egin du eta «droit commun» naizela esan dit. Eta, «euskalduna?», fitxan espainiarra naizela jartzen duela.

Oker dagoela esan diot, euskalduna jartzen duela, neronek bete bainuen bere aurrean duela bi hilabete kartzela honetara ekarri nindutenean.

Onartu du. Inperioek onartzen duten moduan ordea:

«Ados, euskalduna zara, baina euskalduna baino lehen espainiarra».

Ezetz esan diot, azaldu arren ez zegoen nonbait geopolitika ikasgaia entzuteko umorez:

«Ez dut ulertzen» esan eta moztu du elkarrizketa.

«Euskal» likidatuta. «Preso Politiko» ere. Orain «Kolektiboaren» txanda da.

Izan ere, neure burua Kolektiboko ordezkaritzat aurkeztu izana zinez ulergaitza zaie, ez baitut beste euskal preso politikoekin kontakturik. Argi gera zedin kartzela honetan Kolektiboa nortzuek osatzen dugun, orrialdearen behealdean zehazten nion izen-abizenez nortzuk ginen euskal liburuak jasotzeko baimena eskatzen genuen preso politikoak.

Kolektiborik ez duela onartzen, eta beraz ez nauela inoren ordezkaritzat hartzen esan dit. Gainera, aditzera eman dit, mehatxu erdi-ezkutuz, araudiak «eskaera kolektiboak» zigortu egiten dituela.

«Zuk, zure emazteak, edo konkubinak —maite dute hitz horren bidez azpimarratzea ez zeruko eta ez lurreko inperioen legeen arabera ezkondu gabeak garela, natura eta maitasunaren ezkontza hutsa da gurea— eta beste moduluan dagoenak, norberak zerbait nahi badu, bakoitzak idatzi behar du eskaera eginez».

Eten diot hizketaldia:

«Idazkiaren sinaduraz hitz egiteko deitu al nauzu? Ez al dugu mamiaz hitz egin behar?».

«Bai, bai...».

Kondenatuko nautenean «zentral» batera eramango nautela esan didanean, epaitua izan aurretik ez nazala kondenatu eskatu diot. Hala ere, ezin izan dio bigarren aldiz kondenatzeari eutsi, eta berriro aipatu du «kondenatuko zaituztenean...». Berak bederen nire atxiloketa-txostenak irakurrita ez du zalantzarik: erruduna.

Idazkiaren mamian sartu aurretik, aukera baliatu dut ikustaldien baldintzengatik protesta egiteko: ordu erdi, hormatxoak bananduta... Bihozgabeak direla esan diot.



Frantsesez «vous êtes», «zu zara» ala «zuek zarete» izan badaiteke ere, nola ez, berarentzat hartu du, «bihozgabea zara» esan banio bezala. Ez baitira beren «kolektiboko» kide sentitzen, norbanakoarena da ardura, soldaduak dira, albokoak egiten duenaz inolako ardurarik ez dute, beren agindupekoen ekimen eta hutsegiteek ere ez dute haiengan ondoriorik.

Beraz, mindu egin zait gizona. Begiak umel kontatu dit 30 urte daramatzala zeregin berean. Azken 15 urteak «zentral» batean. Lau hilabete barru duela erretreta... Eta zentralean zegoen artean ikusi dituela haurrak 5 urte zituztenetik 20 urte bitartean beren aitari bisita egitera joaten. Ea ez dudan uste berak ere sufritzen duela...

Begietara tinko begiratu diot, begien atzealdean bere ahotik atera den izugarrikeria hori agindu duen zerebro zatiren baten isla ikusteko ahaleginean. Lausoturik nituen begiak nonbait, ez dut berekoikeria eta besteen minarekiko sentiberatasun eza baino ikusi. Hori ere entrenamenduz eskuratzen den zerbait izango da.

Ez dit bada esan preso ohiek idazten diotela! Gizon ona izango da gainera, on puska, segur aski.

Telefonoak jo du.

Kartzelazain guztiek dute sakelakoa. Lanerako eta behar pertsonalerako darabiltena. Gizartearen aurrerapena hori ere. Horrela, bere senitartekoen berririk gabe daukaten presoak entzun dezake ziega ixten ari zaion kartzelazaina emaztearekin hizketan, biharamunean bakantzetara abiatu aitzin egin beharreko erosketez.

Oraingoan ordea «lan arazo» batengatik deitu diote Xefari: kartzelazain batek ordua baino lehen utzi behar izan du postua, bai, haurraren bila eskolara joan behar zuela-eta. Entzun ahal izan dudanez maiz egiten du eta konponbidea jarri behar zaio kontuari, ordutegiak errespetatu egin behar direla oroitarazten dio telefonoz bestaldean dagoenari. Elkarrizketa kartzela-sistemak bere-berea duen beste krudelkeriatxo bat da niretzat, pertsona xehatzeko beste zigor ikusezin horietako bat.

Ez da gizon gaiztoa ala deabrua da. Errugabe xaloa ala sadiko paregabea. Berdin dio.

Hormatxoaren gaiari heldu diot: ikustaldietan semea besoetan hartzeko hormatxoaz alde honetan etortzeko baimena eskatu diot, izan ere ez du nahi, beldur da, beste kartzeletan ez baitzegoen hormarik ikustaldi gelan.

«A, noski!, preso batzuk hain lohiak ez balira», esan dit.

Galdera ikur aurpegia jarri dut nonbait, nik ezer esan gabe azaldu baitit hormatxoa egon ezean presoek beren neskalaguna belaunen gainean jartzen dutela…

Hiru eten puntuak airean utzi ditu tarte horretan uler dezadan presoak galtzak jaitsita izango lituzkeela, galtzontziloak ere eta neskalaguna kulerorik gabe legokeela.

Eten puntuak airean desagertzen utzi ditut, ezer esan gabe. Ulertu dut: gizona gaixo dago. Eta ez da harritzekoa: 30 urte daramatza jendea torturatzen, xehatzen… Kartzela-sistemaren zigor eskua izan da. Horrek ezin du onik egin. Amiantoz jositako eraikin batean lan egitea baino okerragoa izan behar da.

Kartzelazainen uniforme urdina belaki handi bat bezala irudikatzen dut. Pixkanaka-pixkanaka bihotza idortzen die, begietako distira itzali, burmuinetan zegokeena agortu. Beren zereginaren arrazoitzeko bizpahiru arrazoibide besterik ez utziz: beharrezkoa da; nik ez banu egingo beste batek egin be-

harko luke; merezia dute... Eta horrekin batera egiten ari direna egunen batean ahantziko duten esperantza. Eta bitartean erantzukizunik beren gain ez hartzeko ohitura errotua.

Iritsi gara azkenean liburuen gaira. Beraz, eskaera kolektiboari emandako erantzuna ezezkoa da. Baina, hala ere nire izen hutsean egin dezakedala eskaera. Eta, dena dela, badagoela liburutegia.

Ihardetsi diot euskaraz irakurri nahi dudala, eta ez dudala zertan nire irakurzaletasuna eta apeta liburutegian dauden liburuetara murriztu behar.

Urrunegi joan naiz, nonbait.

Beren hizkuntza mespretxatu dudala ulertu du. Kartzela honetako hizkuntza frantsesa dela oroitarazi dit eta segituan mehatxua: ikustaldietan ere frantsesez egitera behartu gaitzaketela!

Ez nau mehatxuak beldurtu.

Eta nola jakingo duzu zein hizkuntzatan ari garen? Elkarrizketa entzuten duzue ala?

Entzuten dutenaren froga eman berri didan arren, saiatu da hanka ateratzen.



Ez, baina kabina aurretik pasatzen garenean atea ireki eta zein hizkuntzatan ari zareten entzun dezakegu.

Erantzun niezaiokeen atea irekitzean guk frantsesez egingo dugula eta aldegitean euskaraz jarraitu. Horren ordez, berriro ere begietara tinko begiratu diot.

Ez du maite.

Ni oso lasai nago.

Ondoren, kexatzeko arrazoirik ez dudala uler dezadan-edo, Kartzela «administrazioak» zenbat aurreratu duen esplikatu nahi izan dit. Duela hamabost urteko kartzelan jarriko zintuzket nik, pentsatuko balu bezala. Eta ez dut dudarik ni bezalako lotsagabe bat isilarazteko ahal balu egingo lukeela. Orain dugun paradisua preziatzen ikas nezan.

Ez dut zalantzarik asko aldatu dela. Gizartea ere aldatu egin da, ordea.

Orain, kartzelazain ar eta emeak daude. Ikustaldietan, tarteko kristala kendu dute. Telebista, irratia, egunkariak izan ditzake presoak. Egia da horrek asko laguntzen duela eguneko 24 ordutatik 22 ziegan pasatzen. Orain ere farmakoak erruz banatzen dituzte... Eta abar luzea.

Nazien garaian, panpina di-da batean apurtzen zuten. Orain, nahiago dute pixkanaka egin: beso bat orain, hanka gero, begi bat. Kaiolatua dagoen bitartean, pertsona izutu, xehatu, esaneko eta mendeko bihurtu, bezatu. Eta ateratzen denean..., A! hori jada ez da kartzelazainen ardura.

Ateratzen denerako ere aurkitu dute irtenbidea: hilabete eta urteen debaluazioa, lege hauste beragatik zigorra handitu, arau berriak, lege berriak, arau hauste berriak, zigor berriak, zigorren neurriaren gorakada...

Aski, amaitutzat eman du bilera: ez naiz preso politikoa, ez naiz euskalduna, ez dago kolektiborik, ez naiz pertsona, preso arrunta naiz eta gainera kondenatua.

Liburuak? A! bat-batean oroitu du Norvegiako enbaxadak liburu batzuk oparitu zizkietela eta hor dituztela, egunen batean norvegiar bat kartzelaratuz gero bere hizkuntzan irakurri ahal izan dezan...

Errua gurea izango da, oraindik enbaxadarik ez izateagatik!

Nondik atera dut bihozgabeak direla? Ez da bihotz kontua, garunean dute kaltea!

Aio.



## IDIAZABALGO GAZTA

Kartzela Idiazabalgo gazta urtean behin edota ezkutuan jaten den lekua da.

## ESPERANTZAREN LEIHOA

Etxartetik nire ziegako leihoa dakusat. Erdi irekita uzteko ohitura dut.

Etxartean nagoen bitartean norbait sartuz gero, aire korrontearen eraginez, guztiz irekitzen da.

Noizean behin leihorantz begiratzen dut. Irekia dagoela ikusten badut, norbait sartu den seinale... Zertarako ote? Posta ekarri ote didate?

Esperantza horrekin itzultzen naiz txangotik, sartzen naiz ziegara. Begirada zuzenean mahai gainera edo ate ondora, lurrera doa.

Ez, gaur ere ez da postarik iritsi. Ziega miatu didate.

## ORDULARIA LAPURTU

Oharkabean ordularia eraman dut poltsikoan ikustaldira. Debekatua dago, nahiz eta ez duen inon halakorik jartzen. Denbora kontrolatu ez dezagun debekatzen digutelakoan nago ni.

Eskumuturrekoa apurtuta duenez, poltsikoan eramateko ohitura dut. Miaketa hasi aurretik kleenex paketearekin batera atera dut poltsikotik. Apalean utzi ditut.

Kartzelazainak erreparatu dio. Hartu du:

«Zer da hau?», galdegin dit.

«Elefante arrosa bat» esan izan banio umorez hartuko lukeenik ez dudanez uste, egia esan diot:

«Nire ordularia».

Debekatua dagoela oroitarazi dit, ea ikustaldira etorri direnek eman ote didaten. Xeheago aztertu du ordulari zaharkitua eta torlojutxo bat faltan duela konturatu da, susmagarri iruditu zaio.

Nire ordularia dela frogatzen duten argibideak eman dizkiot, lasai. Pol-

tsikoan eramateko ohitura dudala. Ez nuela gordetzeko asmorik, ikusteko moduan jarri dudala apalean…

Berandu da. *Raport*-a egin dit.

Itzuliko dizugu «arazorik» ez badago.

## «IPARRETARRAK!»

Ziegaz aldarazi naute berriz. Oraingoan, gainera, estai aldaketa.

Ondorioz, orain arteko ezagunekiko harremana etenda gelditu da. Etxartean egokitu zaidan taldeko inor ez dut ezagutzen. Oraindik bakarrik nabil itzulika.

Badakite euskalduna naizela. Ondotik pasatu zaidan batek «Iparretarrak!» oihukatu dit.

## ELKARTASUNA (2)

Marixol *mitard*-ean dagoela esan didate.

Banoa ni ere. Baina nola? Ez dakit.

Etxarteko atea blokatzea pentsatu dut. Aurrena informazioa ziurtatuko dut.

Astegun goizetan nirekin gora eta behera ibiltzen denari esan diot.

Bihar goizera arte itxaroteko esan dit. Behar izanez gero, berak lagunduko didala blokatzen.

## «VOUS AVEZ DEMENAGÉ?»

Ziega-aldaketa zigorra da. Ziega hau duela hilabeteko bera da.

Iristean kartzelazainak irribarretsu esan dit:

«Vous retrouvez votre cellule!». Nire ziegara itzuli naizela, alegia…

Bazkalorduan, atea ireki didanak harridura faltsuz:

«Vous avez demenagé?». Ziega-aldaketa nire borondatez egin izan banu bezala…

## IZARRIK GABEKO ZERUA

Eztabaida etxartean.

Kartzela gaineko zeruan ez dagoela izarrik dio batek.

Niri galdetu didate.

Egia da, diot. Kartzela honetan nagoenetik ez dut inoiz izarrik ikustea lortu.

Izarrik ez dagoela dioten taldekoak poztu egin dira, beren talderako beste bat bildu dutelakoan.

Izarrak egon badaudela diotenek harrituta begiratu naute.

Haien harriduragatik ulertu dut «izarrik ez dagoela» diotenek zinez uste dutela kartzela gain-gainean ez dagoela izarrik!

## IZAR BAT

Izar bat ikusi dut bart!

Esan behar diet!

## STAR ACADEMY

Berriro ere besteengandik bereiz eramaten naute ikustaldietara. Denen aurrean deitu eta taldetik bereizten naute. Bereizkeria egiten dute.

Besteek, aparteko gelan ikusten naute, edo kabina txikian, gaixo kutsakorra banintz bezala. Ez hanka ez buru ez duen neurria da. Higatzailea. Juduek paparrean izarra eramanda zer sentitzen zuten asmatzeko bidea ematen duen egoera. Besteen begietara desberdintzen nauten neurriak dira. Inork ez du deus esaten.

Ikustaldia amaituta, zigortuta daudenek ikustalditarako erabiltzen duten kabinatxoan sartzen naute, bereizteko kristala duena. Ikusi eta hitz egiteko kabina, ez ukitzeko ordea.

Horrelakoetan bakartze aldiko ohitura berreskuratzen dut, kantuan hasten naiz. Gaur, zain eduki nauten bitartean, *Txori erresiñula*, *Ezkondu gara berriro*, *Bost egun infernuan* kantatu ditut. Ondoren, *Eusko Gudariak* kantatu dut, Gorak bota ditut eta baita irrintziak ere. *Internazionala*ri ekin diot, hitzez dakidan arte eta txistuka edo doinuz segidan.

Denbora aurrera doa. Ordu erdi besterik ez du iraun ikustaldiak.

Kartzelazain batzuk lotsa dira; azkar, begiratu gabe pasatzen dira kabina aurretik.

Ikustaldia amaitu eta ordu erdiren buruan miatu naute. Eta berriz ere kabinara.

Nirekin ikustaldira etorri direnak joaten ikusten ditut.

Ikustaldiko bigarren txandakoek ere bukatu dute! Miaketa gelarantz doaz, eta ni oraindik erdian lurrera iltzatutako aulkia eta metro bat bider metro bat inguru besterik neurtzen ez duen gela txikitxoan naukate.

Kartzelazain bat datorkit. Atea ireki eta argibideak ematen dizkit:

«Arazoak» izan dituztela baina badatozela nire bila. Amaieran hizketaldietan makulu huts gisa «ados?» galdetu dit.

Eta nik: «ez, ez nago ados!».

Hala ere, ateari joka aritu naizenez, atean kolperik ez emateko ihardetsi dit umore txarrez. Ordularia lapurtu zidan bera da.

Bila etorri direnean *Eusko Gudariak* kantatuz atera naiz. Ozen. Ordubetea eduki naute kabinatxoan itxita.

Gradudunak ea apalago kantatu dezakedan diost.

«Badatoz», pentsatu dut.

Belarrian min egiten diodala.

Atera gara moduluko bidera. Kontrol-guneko ordenagailuan ageri den kartzelaren planoa begiratzeko isildu naiz.

Lehen hesira iristean gradudunak diost ikasiko duela, hainbestetan errepikatuz gero.

Ea *Marseillesa* kantatzea nahi duen erantzun diot, lotsagabe.

Ez dakiela zer kantatzen dudan, «zer da kantatzen ari zarena?». Zuri-zuri.

Nik erantzunik ez. Aurreko batean, emazteen modulurako oihuen itzulpena ere goxoan eskatu zidaten eta 15 eguneko zigor baldintzatua jarri zidaten zirku-epaiketan.

Modulura iritsi arte jarraitu dut kantatzen. Bi estrofak berriro kantatzeko adinako tartea badago.

Hiru egunen buruan ikustaldia dut berriz. Oraingoan kabina txikia hartuta dagoenez, isolatua ez dagoen batean sartu naute ikustaldi amaieran. Horregatik, nire kantua pasabidean entzuten da.

Agertu da «Star» bat nintzela esan zidan kartzelazain voyeurra.

«Euskal kantuen aurka ez dut deus, baina probokatzen ari bazara ez zait batere axola *raport*-a jartzea!».

Ez diot erantzun. Estiloa aldatu dut: aspaldiko partez *Txori erresiñula* sentimenduz kantatu dut. Zigorra jasotzekotan poetikoagoa izango da.

Etorri zaizkit bila. Hizketan entzun ditut, oraingoan ez naiz «le basque» («non sartuko dut "le basque"?» eta horrelakoak esateko ohitura dute), «Star Academyren» bila datozela entzun dut. Umoretsu daude. Hobe.

Ni ere. Goazen neska-mutilak! «Eusko Gudariak gara, Euskadi askatzeko...» hasi naiz, segizioa nire atzetik desfilatzen daramadala, bat, bi, bat, bi...

Bagoazela, zeharka begiratuz ikusi dut ttattarradun bat niri begira. Nor izango ote, abokatua ala kartzelako zuzendari berria, piztia behatzen?

## «KOMUNIST?»

Bero egin du gaur. Jertsea erantzi dut etxartean.

Azpian daramat bahitu gintuztenean hartu nuen niki bakarra, eskura zegoena. Aurrealdean Argalaren argazkia du, eta atzealdean izar gorria, «Antolakuntza eta Borroka» leloarekin.

Promenada bukatuta ziegako atea ireki zain gaudela, auzoko georgiarra hurbildu zait, izarra seinalatu eta galdegin dit:

«Komunist?».

Bertatik bertara erantzun diot ezetz... Nahiz eta apirilaren 17koa eta gero baietz esan beharko nukeen agian...

SESBen suntsiketa fresko dago oraindik. Baietz esan banu, auskalo!

**KARTZELAKO HIZTEGIRAKO**

*UNE ROULÉ:* zigarreta bat, tabako bildua.

*PEDO:* haurren aurkako eraso sexualengatik kartzelaratuak diren emazteak (gizonezkoei *pointeur* deitzen zaie).

*CHICHON:* ez da turroia, ez da saltxitxoia, haxixa baizik.



## GAZTELERAZ

Kartzelazain batzuek euskaldun naizela jakinik, eta esaten den bezain idiotak ez direla frogatzeko asmoz edota niganako hurbiltasuna, giro ona sortzeko agian, noizean behin, «gazteleraz» mintzo zaizkit:

«¿Qué estás?».

Behi begirada jartzen dut, TGVz mozorrotzen ditudan artean.

## UNAI

Unairen gutuna jaso dut arratsaldean.

Alboko moduluan daukaten arren hamabost egun behar izan ditu gutunak nire eskuetara iristeko.

Gose greba bukatu eta indarrak berreskuratuta dabilela dio, besteren artean. Nire eta Marixolen gutun bana jaso duela ere...

Iluntzean irratian entzun dut Soto del Realen dagoela!

Leihora irten eta «Gora Euskal Herria askatuta» oihukatu dut amorruz.

Bihar etxartera jaitsi eta ukabila gora, zaintza-talaiatxokoari *Eusko Gudariak* kantatuko diot.

## CASTING AKATSA

Korrika aritzen den batekin aritu naiz hizketan. Astean zenbatetan egiten duen, zenbat denboraz.

Aurreko egonaldian astean bost aldiz egiten zuela esan dit.

Lehendik ere kartzelan egondakoa dela esan didanean harridura keinuren bat egingo nuen, oraingoan *casting akats* batengatik dagoela argitu baitit. Hau da, lekuko batek, tronpatuta, ezagutu zuelako.

## «BADAKIZU, EMAKUMEAK!»

Beren emazteez ari dira.

Batek jakinarazi digu emaztea atxilotu zutela aurrena, kontu egiteko esan arren dolar faltsuak xahutzen ari zenean. Ondoren, emazteak bera salatu omen zuen.

Bestearen emaztea negarrez hasi zitzaion lehen ikustaldian, ordainagiri piloarekin utzi zuela-eta. Orain pozik dago, azken ikustaldian sendoago ikusi baitu, diru arazoei garrantzia kenduz...

Besteak:

«Badakizu, emakumeak!».

Tartean sartzen saiatu naiz, alferrik, etsita daude emakumeak diruzale hutsak besterik ez direla, ez dutela beste interesik, dirua izanez gero ondo eta bestela, adio!

## ORDU ALDAKETA

Nire ordularia nire poltsikotik lapurrenera pasatu zen ikustaldiaren biharamunean igaro ginen neguko ordutegirik udakora.

Hilabete eta erdi berantago ez dut oraindik eskuratu.

Bitartean, zirkura eraman ninduten *epaitzeko*. Epaiketa zigor moduluan egiten dutenez, nire puska guztiak biltzeko agindu zidaten. Ziega desmuntatu berri nuela etorri zitzaizkidan puskak eramatea ez zela beharrezkoa esatera. Alegia, aurrez erabakia zuten ez nindutela zigor ziegara eramango…

«Ohartarazpena» besterik ez nuen jaso. Han bertan eskatu nien ordularia itzultzeko. Baietz, itzuliko zidatela.

Astebeteren buruan berriro eskatu nien, idatziz. Bilera batean ere eskatu nien. Arduratuko zirela erantzun zidaten.

Bi egunen buruan zuzendaritzari idatziz eskatzeko eskatu zidaten, aurreko idazkia zuzendaritzari egin nion arren.

Idatzi nion Kartzelako zuzendariari...

Astebeteren buruan, beste eskaera batzuk zirela eta bilera nuen gradudunarekin. Orduan ere aipatu nion ordularia... eta arduratuko zela erantzun zidan; nire zorigaitzerako, hauek «arduratu» aditzari ematen dioten esanahia ez da nik ematen diodan bera. Eskuharki, «arduratu» diotenean «utz nazazu bakean» esan nahi izaten dute.



Idazki berria prest dut.

Martxa honetan berreskuratzen dudanerako ez diot ordua aldatu beharko...

## BILUZTEA

Arrok ikustalditik itzultzerakoan soilik biluzten gaituzte. Bakana da ere ustekabeko miaketan biluztera behartzea. Salbuespen arraroa.

Emeen aldean aldiz, zigorra arrunta da presoak biluzaraztea. Segurtasuna medio *arrazoitua* dagoela onartuz gero, arrazoigabekoak dira han jasanarazten dizkietenak, segurtasun helburu gabekoak.

Ez bada presoa umiliatzea, menperatzea, pertsona gisa xehatzea.

Plazer gaiztoa hartzen dute kartzelazain emeek Marixol biluzten (baina hain garrantzitsua al da biluzaraztera behartzen gaituena gure sexu berekoa izatea?).

Hilekoa izatea ez da oztopo izaten kuleroak eskura emateko eskatzeko, eta, badaezpada, baita konpresa erabilia ere.

Kartzelazain lana. Oso lan gogorra.

Horrelako lanpostuak betetzeko, gizarteak funtzionalki ezgauza diren pertsonak ekoitzi behar ditu. Tarteka gaixo sexual eta mentalak, sexu apetak dohainik asetzen dituztenak. Sistemak beren zaintzapean jarri dituztenak objektu sexual gisa erabiliz.

Hori gertatzen da Seysses-eko Emeen Auzunean.

### ELKARTASUNAREN IZENAK

Iñaki Herran, Unai Berrostegieta, Txuma Altable, Joseba Arregi, Igor Fernandez...

## BI MODU

Kartzelan zerbait lortzeko, eskatzea, arrazoia izatea... ez da aski.

Kartzelan bi modu dago zerbait lortzeko.

Lehena da errazena, erraza, norberaren izatea eta duintasuna komuneko zulotik bezperako afariaren hondakinekin batera botatzea erabakitzen den goizaz geroztik... Kartzelazainaren zapatak miazkatuz hasi eta uzkian pot emanez amai daiteke. Haren esaneko, haren menpeko, haren eskupekoen onuradun.

Bigarrena da zailena. Kartzelari aurre egin behar zaio. Eskubideak aldarrikatu, zuzenak ez direnak aldatu, norberaren osasuna jarri behar da arriskuan, duintasunaren gotorlekuan indartu eta injustiziaren eremuari lurraldeak konkistatuz, eta txarrenean ere norberaren izatea indartuz.

### ESKER ONEKO MALKOTAN EGUNKARIAN IRAKURRITAKOAK

«Lehenik eta behin musu handi bat
euskal erresistenziari
errefuxiatu, giltzaperatu
eta sasiko gudari
zuek zarete gure eredu,
zuek tuneleko argi...».

XABIER SILVEIRA

## ZAPI ARRANTZAN

Goizero bezala, gainekoak lehortzeko zapia astindu du burdina-barren artetik.

Gaur, ihes egin dio. Ispilua aterata ikusi dut, lurrean, zaborra artean.

Lau hortzetakoarekin gakoa egiteko hortzak okertu dizkio, izara zatiekin egindako sokaren (*yo-yo*aren) muturrean lotu du eta arrantzan aritu da.

Berak ere ispilu zati bat baliatu du amua gidatzeko.

Denok geunden leihoan bere ahaleginari adi. Egonarri handia du mutilak.

Lortu du azkenean!

Zapia leiho aurretik gorantz zihoala, «artista haiz!», oihukatu diot.

Ispiluetan islatu da bere irribarrea:

«Ça va, Mikel?», galdetu dit pozarren.

«Ça va!».



Ezintasunaren aurkako garaipen txikia eskuratu du. Denon pozerako.

## HURBILDU, URRUNDU

Hurbildu, urrundu, hurbildu, urrundu.

Mugimendu elastiko zikoitzaren aldi bakoitzak gugan sortzen duen sentimendu nahasia.

### MAILUA ETA ILTZEA

Gu gaitun
Herria den mailuari
kolpea jo dezan
eskatzen dion
iltzea.
Euskal Herriaren
kartzelaren hormari
tinko erasotzen dion

iltzea
iltze minbera
behin eta berriz
kolpearen kolpez
hormaren gogorrak
okertzen duen iltzea
Baina, eta behin eta berriz
azken kolpe askatzailea
jasotzeko prest dagoen
iltze zuzena.

## «BIZIRIK ZAUDEN EGIAZTATU BEHAR DUT»

Goizeko deia. Atea irekitzen du kartzelazainak.

Batzuek jadanik ikasi dute deus ez esaten. Beste batzuek alferrikako «bonjour» zentzugabea botatzen didate mekanikoki. Azkenik bada erregelamendua taxuz aplikatu nahi duenik.

Bere soldata ziurtatzeko edota espedientea orbanik gabe mantentzeko nire erantzun ezaren aurrean, atetik edo ziegan sartu eta ohera hurbilduz «bougez un bras!» agintzen didanik. Alegia, erregelamenduaren konplitzeko goizero-goizero bizirik gaudela konprobatu nahi izaten duenik.

Beraz, hori egiten duenak, atea irekitzerakoan hilik egon gaitezkeen aukera presente izaten du.

Zer axolako zaio goizeko 7:30etan hilda ala lotan bagaude. Bezperatik hilda bagaude ere.

«Zer esan didazu goizean?», galdetu dit kartzelazainak ordubeteko etxarte aldetik itzuleran.

«Ea zergatik ez didazuen lo egiten uzten. Lasai egon zaitezkete, ez nauzue hilik aurkituko eta», erantzun diot.

«Nire betebeharra da. Zer esan didazu zuk?»

«Lo egiten uzteko. Euskaraz».

Zoaz pikutara!, alegia.

## TORTURA

«...atxilotuek sudurra puskatuta, gorputza ubelduraz beteta, hanka azpiak kolpez josita... Hori dena gertatu da hemen, baina atxilotu horiek ez ziren hil, nahiz eta torturatzen ari zirenean horixe desiratzen zuten.

Horregatik uste dut norbait torturatzea, hiltzea bezain larria dela, ia. Zeren torturatik askatzeko modu bat da hil nahi izatea».

*Egunkarian irakurria*

## TORTURA (bis)

Duela urtebete kartzela honetako zigor ziegan hogeita urte gutxiko gazte bat urkatuta agertu zen.

Bere amak zalantzan jartzen du suizidioaren tesia. Frogak ez direlakoan egoki egin. Semea hil diotelakoan edo zerbait ilun dagoelakoan dago.

Ezagutzen dut hemengo zigor ziega. Bost egun eman nituen bertan.



Kontua da zerk bultza dezakeen hogeitaka urteko gazte bat bere buruaz beste egitera.

Kartzela arduradunek aukera hori egon badagoela dakite. Zigor ziegako zigorrari ihes egiteko hil nahiago izaten du hainbatek. Horregatik ihes horretarako lagungarri izan daitekeen oro kentzen digute: zapatetako ajueta, gerriko... Bai baitakite zigor ziegan sartzen dutena heriotzaren mugan jartzen dutela. Eta zigorrak bere helburua bete dezan jasaten dutena amaitzeko modu bakartzat duten heriotza ekidin behar dutela.

## ESKOTXA

Kartzela honetan ezin dugu eskotxa erosi. Ez whiskya, bestea baizik. Adibidez afixak horman ipintzeko erabiltzen den zinta itsaskorra. Debekatua dago (whiskya bezala).

Ez da afixak edota argazkiak horman itsastea eragozteko asmoz hartutako neurria.

Norbaitek plastikozko poltsa bat burutik behera sartu eta lepo inguruan eskotxatuz bere buruaz beste egiten saiatu zenez geroztik kendu zuten

kantinako erosgaien zerrendatik. Plastikozko poltsak ez dituzte debekatu bederen.

Piper beltzik erosterik ere ez dago… kartzelazainei eraso egin eta begietara bota diezaiekegulakoan!

## ELKARTASUNAREN IZENAK

Jagoba Terrones, Gotzon Beloki, Marixol Iparragirre eta Mikel Albisuren senitarteko eta lagunek izandako auto istripuengatik, sakabanaketaren aurkako bazka-errefusa.

## ASKATASUNA

Gaua
Zerratu ditinat leihoko burdinak
izarekin egindako sokatik behera abiatu naun
egin dinat sarean zuloa
Bigarren sare bat ere zulatu behar izan dinat
Hi haukaten modulura arteko ehun metroak
isilean, itzalez itzal egin ditinat.
Bost hesi gainditu eta beste bi sare zulatu ditinat
Izarazko soka
hire leihoko burdinetan kateatu nahian nenbilenan
horman gora igotzeko...
baina hik jadanik zerratuak hituen burdinak

Izarekin egindako sokatik behera jaitsi haiz
eta isilean
gure ohera abiatu gaitun
izarekin.

MIKEL

Gaua
Zerratu ditiat leihoko burdinak
izarekin egindako sokatik behera abiatu nauk
egin diat sarean zuloa
Bigarren sare bat ere zulatu behar izan diat
Hi haukaten modulura arteko ehun metroak
isilean, itzalez itzal egin ditiat.
Bost hesi gainditu eta beste bi sare zulatu ditiat
Izarazko soka
hire leihoko burdinetan kateatu nahian nenbilean
horman gora igotzeko...
baina hik jadanik zerratuak hituen burdinak

Izarekin egindako sokatik behera jaitsi haiz
eta isilean
gure ohera abiatu gaituk
izarekin.

MARIXOL

*2005eko apirilaren 20 eta 30ean eta ekainaren 7an*

# AZKEN HITZA

[*Maiatzean bukatu nuen hirugarren kaiera. Berriro ere gose greban geunden, senideek izandako istripuaren berri irratiz entzun eta kartzelako agintariei gertatu zenaren berri eskatu arren emateari uko egin ziotelako protestan. Bestalde, gose grebaren hirugarren astean jakin genuen kartzelako agintariek hilabetea zeramatela semea eta hirurok elkartzea baimenduz epaileak emandako oniritzia ezkutatzen. Atxilotu eta bederatzi hilen buruan elkartu ginen berriro. Urriaren 12a arte (nola ahaztu data!) eduki gintuzten Seyssesen. Egun horretan, senideak ikustaldirako zain kartzelako atarian zeudela lekualdatu gintuzten, Euskal Herritik urrunduz, Marseillako Baumettesera. Hango baldintzak ikusita gose eta egarri greba egin genuen berriro. Italiako mugatik gertu dagoen Draguinhanera lekualdatu gintuzten hurrengoan. Eta Catalunyako Perpinyakora ondoren. Beti ere, hilero ziega aldatu araziz, zaintza-neurri zorrotzekin, beste euskal presoengandik bananduta, oihanean bakartuta, gose greba, itxialdi, hizkuntz greba eta atxilotuak eskura dituen baliabide urrien bidez borrokan. Bi urte eta ia erdiren buruan, 2007ko otsailaren lehen egunetan Paris aldera lekualdatu gintuzten, Fresnesera, Kolektiboko beste kideekin batera, bakarmortuko garaiak, orain artean, amaituz. 2011ko udaberrian, azkenik eta oraingoz, Lyon-Corbas-eko kartzelara eraman gintuzten*].

## **atara**miñe formatu txikian

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso
2003

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa
2004

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza
2005

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola)
2007

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta
2008

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza
2011

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa
2011

**atara**miñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

**www.literaturakoadernoak.org**

**“Kartzelak irentsia ez izateko, norberak hobeki egokitzen zaion jarrera hartzen du. Isolamenduaren aurrean, idaztea izan zen nik hautatu nuen defentsa tresna. Hastapenetik ohartu nintzen tortura zuriaren bidez zigortu behar nindutela, eta gertatzen ari zitzaidanarekiko distantzia jartzea erabakinuen, senez esango nuke.**

**Planeta ezezagun eta gaizto batean bat-batean esnatzen den kazetari ausartaren mozorropean babestu nuen nire burua. Jasanaraziko zizkidatenekizatearen sakonenean zauritu ez nintzaten, umorea zeharo galdu eta betirako ez mikazteko baliagarri izango zitzaidalakoan”.**



**Mikel Antza**
1961
Donostia

2004. urtean atxilotu zuten Biarnon, Marixol Iparragirre emaztearekin eta semearekin batera. Bat-batean, Estatuaren zanpatze makinaren zurrunbiloan aurkituko du bere burua, artean ezezaguna zitzaion “munstroaren” barrenetan, bakartuta, isolatuta. Kartzelako hasierako isolamendu garai horretan idatziak dira liburu honetan bildutako kronikak.

ataramiñe
**www.literaturakoadernoak.org**